*Agurtzaneri,*
*nire gau eta egun iratzarrien ilargia*

*Ilargi palestinar urratuari*
*ilargi kurdu zatikatuari*
*Saharako ilargi itoari*
*ilargi kubatar eredugarriari*
*Txetxeniako ilargi umezurtzari*
*Latinoamerikako ilargi indigena zapalduari*
*Afrikako ilargi beltz bortxatuari*
*Mesopotamiako ilargi arpilatuei*
*Ipar Amerikako indioen ilargi espetxeratuari*
*Pantera Beltzen ilargi narkotizatuari*
*munduan barna mugitzen diren ilargi ilegalei*
*eta, oro har, gaueko haize hotzean*
*adarbakar urdinaren bila*
*dabiltzan ilargi errebelde guztiei*

*Ipar Euskal Herriko gazteri iraultzaileari, biba zuek!*
*Euskal ilargia ez da salgai!*

*Jon Anza eta Kepa Arizmendiren ilargi beteei.*
*Bakoitzak berea, gurea Euskal Herria!*

**GOTON:** Zuk nahi duzuna erranik ere, zure senarra han daukagu, ongi zigorturik estekatua. Eta nahi baduzu salbatu haren bizia eta zurea ere, ordu da mintza zaitezen!

**SATORBELTZ:** (Lastoa besotan sartuz) Huna lastoa, Goton jauna!

**GOTON:** Ezar-azu bi emazte horien ondoan.

**SATORBELTZ:** (Obedituz) Ba, andereak, eta nihaurek dut lasto hau nere eskuz piztuko.

**OTSANDA:** Abre basa zirtzila!

**SATORBELTZ:** Ba, sar araziko dauzkitzut, ba, zure mesprezioak!

**KLEIN:** (Sartuz Rotekin) Jauna, oro prest dira. Su emaiten ahal duguia?

**GOTON:** Ba, bainan lehenik azken galde bat zuri. (Otsandari mintzo) Azken aldikotz, nahi duzuia mintzatu, edo bizirik erre?

**OTSANDA:** Gora Nafarroa! Gureak gure! Gora gure lurra!

*IBAÑETA. Hiru gertaldiko antzerkia.* PIARRES LARZABAL. 1968.

2 § Gizon batek bertze bati sorginkeria ekintzak leporatzen badizkio baina ekintza horiek frogatu gabe, magia egiteaz salatu dutena Ibai jainkotiarrerat jo beharko du eta bere burua bertarat bota; hala, Ibai jainkotiarrak berarekin eramaten badu, salatzaileak haren ondarea hartzea zilegi izanen du. Baina Ibai jainkotiarrak garbitzat jotzen badu eta bizirik eta osasuntsu jarraitzen badu, magiaz salatu zuena exekutatuko dute. Hala, Ibai jainkotiarrerat bere burua bota zuenak, haren ondarea bereganatuko du.

*Hammurabi kodea.* Era Vulgaris aurreko 1752. urtea.

*Gau pasa sapa, gau sapa pasa*
*nere amets eroetan ikusi nuen Zaldi Ero*
*bere zaldi jostakinarekin dantzan ari zen*
*aldiero amets egin nuen ta ni Zaldi Ero!*
*Geroztik mendiriz mendi oihanak gaindi habil gauero.*
*Oglala nere herria zuriek kendu dakute aberria, hala ere*
*ez da berandu aizkora eskuetan dantzan mugitzen dut gerria.*
*Gargero ametsetan Zaldi Ero naiz gauero!*
*Askatasuna maite ta bihotza daukat bero*
*Woonded Kneen bihotza ta paha sapa buruan…*

UFESTUEK

# *Aurkibidea*

# AITZIN SOLASA

Orain artio arlo artistikoan musikan egin duen lanagatik ezagutu badugu ere, hontakoan Ernestok bere alderdi literarioa erakutsi digu. Berriozarren sortu eta Baztanen laketu duen sortzaileak Euskal Herria munduan kokatzen du, bere gizartearen inguruko kezkak agerian utziz.

Idatziak arras egitura berezia du. Ez da nobela bat. Ez da saiakera bat. Saiakera nobelatu bat edo nobela didaktikoa. Istorio nagusi baten barnean agertzen diren bertze istorioak, gertaerak. Errealitate bat bertze baten barnean. Kolore anitzetako idatzia.

«Marron bat dut zuretako» erranez hurbildu zitzaidan Ernesto bere ongietorriaren egun berean, eta horra marron hura zein zen: aitzinsolas hau idaztea. Ezetza erraten ez dakien honi alimeleko ilusioa egin zion, beraz, berriz ere ezin ezetza eman.

Ta horra non, *marrona*rekin batean, kolorez betetako testua hartu nuen kaparra batean, Mexikoko maien kolore guziak eta gehiago biltzen dituena. Horra adibide batzuk:

Gorria, iraultzarengatik , Mexikokoa, Euskal Herrikoa, eta historian barna suertatu diren erasoen kontra egin duten herrialdeena.

Xuria dudarik ez, ilargia delakotz hemen indar nagusia. Jainkosa gisa, bere bila ibilki da protagonista.

Beltza, nobela beltzaren kutsua duelakotz, misterio puntu horrekin eta istorioaren akitzeko ezustearekin.

Berdea, naturak, amalurrak… garrantzi haundia hartzen dutelakotz

Urdina, misterioaren barnean lasaitasun momentuak ere agertzen direlakotz.

Horia, sorginkeria kutsu bat duelakotz izkribuak. Istorio berarena, baina baita Ernestok pasako zitzaiona aitzinetik kontatzen duelakotz ere, iragarpen baten gisan: etxetik ihes egin behar izatea, altxapeka ibiltzea… Egiazki 2012ko maiatzan idatzia dela ematen du, 2009an idatzia izan dena.

Arras ezagunak egiten zaizkigun leku eta pertsonaietatik hasita, urrunekoak eta ezezagunak eginen zaizkigunetarat eramanen gaitu. Ernestoren alde berri bat ezagutu dut eta sorpresa ederra hartu. Nik hartu dutan sorpresa zuk ere hartzea espero dut, irakurle. Eta nik egin dudan bezala, zuk ere bidaiatzea. Bidai on.

Elurre

# GAU IRATZARRIEN ILARGIA ILBERRIA

Ez naiz oroitzen zein egunetan izan zen zehazki, zein zenbaki erran nahi dut, baina asteartea zela ziur naiz. Aitzineko eguna martxoko edo apirileko (hilabetea ere ez dut gogoratzen) besta egun horietako bat izana zen, beraz, astearte hori lau eguneko lan-aste bateko lehen laneguna zen.

Lanegunetan ohikoa nuen bezala, goizeko bortzak pasa jaiki nintzen. Nagiak ateratzeko dutxa epel bat hartu eta gero aitzineko egunetik erdi prestaturik utzia nuen gosaria hartu nuen. Seietarako bortz minutu falta zirelarik irratira buruz abiatu nintzen.

Irratiko zurezko ate zaharra berriki aldatua genuenez ez geneukan postontzirik, hortaz, posta, periodikoak eta propaganda, metalezko ate berriaren eskutokian biribildurik uzten zizkiguten.

Hiru eguneko asteburu luzearen ondoren gauza mordoa zegoen, eskutoki berria bortxatzeraino kasik. Dena bildu, irratira sartu, eta jasotakoari begiratu bat eman nion: asteburuko eta asteleheneko periodikoak, bankuko gutun-azalak, supermerkatuko eskaintzak... eta nire arreta deitu zuen Din-A 4ko gutun-azal bat. Ez zen gutun-azal erosia, baizik eta aldizkari bateko argazki koloretsuekin eskuz egindakoa. Polita. Nire izenean zetorren, JOSEBA ANBUSTEGI, horrela, eskuz eta maiuskulaz idatzia; ez zen datu gehiagorik ageri. Ez helbiderik ezta zigilurik ere. Igorlerik ere ez, doike. Norbaitek Xorroxin irratiko egoitzaraino bertaraino ekarria eta gure postaren artean utzia. Egia errateko, hasiera-hasieratik egin zitzaidan ezaguna letra hura, nahiz eta momentuan ez nintzen jaberik paratzeko gai izan.

Gainerako gauzak albo batera utzi eta jakin-minez ireki nuen gutun-azal polit hura, kopeta zimurtuz eta sobera ez hausteko kasu emanez.

«Aupa pendejo!» zioen eskuz idatzitako orri mukuru batekin zetorren gutunak. *Pendejo*? galdetu nion nire buruari, eta hitza xuxurlatzearekin batera letra berezi horren jabea izan zitekeena etorri zitzaidan burura kolpean. Gutunari buelta eman eta sinadura begiratu nuen:

*URSUS.*

Hotzikara batek inarrosi ninduen. Bortizki.

Erdi dardarka hasi nintzen, zeharo asaldaturik, emozioz eta nerbioz beterik. Belaunek ez nindutela kontzen sumatu nuen eta idazkariaren aulkian jarri nintzen. *Urde pitoa*! pentsatu nuen, *nork izan behar zian bada?* Letra hori Ursus-ena baino ezin zen izan, batez ere behetik goiti egindako eseak eta A puntadun horiek.

*Hara Ursus, aspaldiko!*

Bi urte izanen ziren beharbada Guardia Zibila bere bila etorri eta Elizondotik hanka egin zuenetik. Ezerezetik agertutako gutun hori izan zen berari buruz izan nuen lehenengo berria. Gutunaren irakurketari ekin baino lehen nire burua apur bat lasaitzen ahalegindu nintzen, emozioak gainezka egiten baitzuen nire poro guztietatik. Hasperen luze eta sakon bat eginez, gutunaren irakurketarekin hasi nintzen :

«*Aupa pendejo! Bizi haiz?*

*Nola zoak dena Baztan tropikalean? Beti bezala suposatzen diat, ez? Denak ongi egotea espero diat. Ni ongi, badakik, bizkorrean.*

*Deus baino lehen eskerrak eman nahi dizkizuet Xorroxin irratiko guztiei. Zuek jakin ez arren ikaragarrizko laguntza izan baitzineten lehenbiziko egun zail haietan. Irrati ttipi bat nian eta egunero aditzen nizuen, goiz eta arratsaldez. Ez zekiat ni baino entzule finagorik izan zenu-*

*ten garai hartan... beno, lehiaketetara deitzen duten atsoak bai beharbada, kar-kar-kar...*

*(...)*

*Korrikarena mundiala izan zuan. Beran hartu zenutenean sofan jarri eta Belaten utzi zenuten artio irratitxoari pegatuta egon ninduan. Hori Korrika xelebrea! Hori sofa maratoia! Ah ze jipoia hartu huen hik ere bizikleta gainean furgoneten gibeletik, e? Ibardindik beheiti bai, freskoago joaten hintzen, baina Belaten goiti, ai amigo, ezin huen ezta mikrofonotik solasik egin ere kasik!*

*Orain ez zaituztet aditzen, ibiltzen nauan tokietaraino ez baitzarete ailegatzen, baina tarteka interneten bitartez entzuten ditiat zuen melodiak. Beraz, bazekiat «xorrotz eta fin» segitzen duzuela. Biba zuek!*

*(...)*

*Beno, harira.*

*Afera duk istorio bat idazten ari nauala (bai, ikusten duanez, Sarrionaindietara jolasean hasia nauk) eta hire laguntza behar diat. Imajinatzen ahal duan bezala nahikoa baliabide prekarioak ditiat (idazteko toki finkorik ez, hiztegirik ez eta abar). Hortaz, behin zirriborroa idatzita, pentsatu diat hik ordenagailuz pasatzen ahal didaala, badakik, zuzendu eta holakoak. Nahi izanez gero hire ukitu literarioa ere ematen ahal diok, askatasun osoa daukak horretarako, ehuneko ehunean fidatzen bainauk hire gustu literarioaz.*

*(...)*

*«Oporretan» nagonetik ilargiak alimaleko garrantzia hartu dik nire eguneroko bizian (egunero begiratzen baitiat, zuek denak, etxekoak, lagunak e. a., ilargi horri berari begira zaudetela pentsatzeak ongi sentiarazten naik), eta ilargiaren inguruko zer edo zer idatzi nahi nian.*

*Istorioak «GAU IRATZARRIEN ILARGIA» dik izena eta hiru atal izanen ditik: «Ilberria», «Ilgora» eta «Ilbetea».*

*Ikusiko duanez, «Ilberria» izeneko atala baino ez diat igortzen gutun honekin, lehenbizikoa alegia. Bertze biak ez ditiat idatzi oraindik, baina badaezpada, zakurren eskuetan akitu baino lehen, hiri igortzea bururatu zaidak.*

*Ez izutu. Etxe aldaketa baten esperoan sortutako presan eta antsietatean zegok idatzia, nahikoa fite, eta arreta guztia sormen prozesuan paratuta. Beraz, akats ortografiko zein gramatikal dexente egonen duk beharbada. Ez dik inporta, hik pasatu zirriborroa ordenagailuz eta gero, poliki-poliki, joanen gaituk gainontzekoa zuzentzen, narrazioak osatzen, elkarrizketak garatzen eta abar, ados? Zerbait ulertzen ez baduk utzi hutsunea eta egunen batean argituko diagu.*

*Presarik ez diala ez duk erran beharrik, badakik, Baztango erritmo tropikalean, kar-kar-kar...*

*(...)*

*Beno pendejo, mila esker aldez aurretik guztiarengatik. Besarkada iraultzaile bat eta muxu borrokalariak. Zaindu, segi bizkor, eta fite artio.*

*URSUS»*

Ikaragarria.

Sinestezina.

Gutuna irakurri ondotik pentsakor gelditu nintzen une batez. Beraz, Korrika eman genuelarik hor zegoen Ursus, irratiaren bertze aldean, sofa batean nonbait... Egoera hura irudikatzeak bertze hotzikara bat eragin zidan. *Hau artista* erran nuen nire artean, *Sarrionaindietara jolasten oporretan dagoen bizkitartean. Hau artista!*

Bertze behin irakurri nuen gutuna, polikiago, lehenengo irakurketa azkar eta urdurian nerbioek estalitako pasarte edo hitzen bila.

Halako batean, erlojua begiratu eta *ostia!, zazpi eta erdiak pasa!* Eman beharreko lehenengo albistegia zortzietan neukan eta artean periodikoak ireki gabe eta ordena-

gailuak piztu gabe nengoen. Ursus-en gutun-azala gorde eta hala moduzko albistegia prestatu nuen.

Goizean zehar, begiratu bat edo bertze eman nion azaletik «GAU IRATZARRIEN ILARGIA»-ren zirriborroari, altxapeka, lankideekin deus komentatu gabe. Eguerdiko bi orduetako albistegiaren ondotik, etxera joan eta bazkaltzeko denbora hartu gabe, Ursus-ek hain era misteriotsuan igorritako istorioaren «Ilberria» atalari ekin nion.

# GAU IRATZARRIEN ILARGIA ILBERRIA

*Iluntasuna madarikatu ordez, kandel ttipiena pitz*

## Iluntasuna

Iluntasuna behar da ikusteko.

Orain dela zenbait egun arkeologo bati prentsako elkarrizketa batean irakurritako anekdota ttipi bat deigarria egin zitzaidan: Ekaingo leize-zuloko paretetan margotuak dauden zaldi multzoak arrunt ezagunak dira, hamaika aldiz ikertu dituzte, irudiak zein leize-zulo bera ere, baina berriki izan da bertzelako marra, puntu eta irudiak aurkitu direla. Hainbat urtez zaldiak begiratu, ikertu, kopiatu, interpretatu... eta ondoan zegoena ikusi ez. Zaldi multzoen edertasunak gainerako margoak eklipsatu egiten zituen nolabait.

Argi indartsu bat begietara zuzentzen diguteneanbezala da. Gehiegizko argiak itsutu egiten du.

Txikitan uste nuen herrietan izar gehiago zeudela hirietan baino, eta mendietan gehiago oraindik. Gero, argi-kutsaduraz jabetu nintzen. Izarrak hor daude beti, gure gainean ñirñirka, eta herri nahiz hirien argiek hauen gozamena oztopatzen digute.

Bi izarrek osatzen duten Sirius izeneko zeruko gorputza Maliko hegoaldean bizi den Dogon herriaren mitologian eta sinesmenetan agertzen da. Mendebaldeko astronomoek ordea, 1884. urtera artio ez zuten ikusi Sirius-en inguruan bertze izar bat zegoela. Afrikako Dogon herria zen soilik teleskopiorik indartsuenekin ikus daitezkeen izar hauen berri zuena.

Maiek, eguzki eta ilargi zikloez gain, artizar eta martitzena ere kalkulatu zituzten, ikaragarrizko prezisioarekin. Beren ilargi zikloak adibidez, hogeita lau segundoko aldea baino ez dauka gurearekin alderatuta.

Bertzetik, arbasoen herentzian edo, artizarra egun argiz ikusteko gai diren zenbait tribu daude oraindik Hego Amerikan. Izan ere, goiti horretan dago dena denbora guztian, nahiz eta eguzkia itzaltzen delarik soilik ikusten dugun.

Hortaz, iluntasuna behar da ikusteko.

*Ongi eginez geroz loa, osasuna ongi doa*

## Sandalia

*...tentsioa ia uki daiteke, eta goizik izan arren, jendez gainezka dago Plaza Zaharra. Lainoak ez du goratu oraindik eta hotza hezurretaraino sartzen da. Hurbildutakoek oihal ilunak jantzi dituzte, eta gorputza eta burua estaltzeaz gain, tristura ere estali nahi dute. Herritarrak bezala, eguna triste eta gris dago. Gaurkoa ez da aise atzenduko.*

*Argituz doa emeki-emeki hats izoztuen artean.*

*Begirada guztiak plazaren erdigunean daude iltzatuta. Hor, borreroek, prestaketekin darraie: egur idorrekin inguratu dute neska gaztea lotua dagoen ziri bertikaleko plataforma, eta lana bukaturik, olioz busti dute pilatutako egurra, neskaren negar isilean erreparatu gabe. Gero, apaiza, ozenki hasi da neskaren arima latinez madarikatzen, eta azkenik, irri gaizto eta buruko mugimendu batez agindua eman dielarik, borreroek suzko lastargiak jaurti dituzte plataformaren oinarrira.*

*Ordura artio gris zegoen guztia: zerua, lurra, arropak, inguruko harrizko etxeak... orain baina, suaren gorria nagusituz doa. Pixkanaka-pixkanaka indartuz doaz garrak*

*eta, neskaren orroen artean, itzal gorri-laranjen dantza ikus daiteke aurpegi beldurtuetan.*

*Irudia lazgarria da, eta erre usain higuingarri batek bildutakoen arnasa hartzea zailtzen du.*

*Neskaren oin biluziak soketan bihurritu egiten dira, hanken dardarak belaunak kolpatzen ditu. Gerria ezker eta eskuin mugitzen da lokarria laztu nahian eta ziriaren gibeleko aldean lotuta dauden eskuek zauriak dituzte dagoeneko sokaren estutasunagatik. Neskaren bularreko mugimendu azkar eta bortitzean arnasketa azeleratua antzeman daiteke. Zintzurra goiti eta beheiti ari da erritmo bizian, eroan, desesperatuan. Lepotik dilindan duen zintzilikarioak distira egiten du. Bitxia da lepokoa, gorri bizi kolorekoa, deigarria...*

—*Bonjour* marmota! Eta jaiki hadi ez baduk pitxer bat ur gainetik botatzea nahi.

—Mmmm... zer?

—Jaikitzeko demonio!, zazpiak dituk eta.

Begiak ezin irekiz jaiki zen Romain ohatzetik, erdi iratzarria baino erdi lo. Galtzontzilotan, aldez alde zeharkatu zuen apartamentu txikia komuneraino, eta komunetik atera zelarik gosari eder bat zeukan esperoan: laranja zukua, tea, ogi xigortua...

Mahaiaren bertze aldean Kilian zegoen, mermelada ogi xerretan hedatzen.

—Mundiala haiz, Kilian –erran zion Romainek laranja zukua hartzen zuela–. Goizeko zazpiak dituk eta fresko-fresko, alimaleko gosaria prestatu, eta batek daki zenbat gauza gehiago egin dituan ni oraindik zonbi moduan nabilen bizkitartean.

—Bon, ohitura ezberdinak ditiagu, bertzerik gabe...

Gosaltzen jarraitu zuten biek. Bat bixi-bixi tostadak prestatzen, tea hozten... eta bertzea motel-motel, begiak erdi

itxita, mugimenduak koordinatzeko nahikoa lan hartuta eta buru barneko piezak ezin antolatuz.

—*Je ne sais rien* –hasi zen Romain indarge–, hondar boladan ez diat batere ongi lo egiten. Amets arraroak zeuzkaat eta ez nauk batere ongi iratzartzen, ez diat behar bezala atseden hartzen... *je suis crevé*.

—Lotara joan aurreko kanutoa izanen duk hori –erantzun zion Kilian-ek burlaizean–, hemengo *mota* aise fuerteagoa duk hangoa baino.

—Ez, ez, serio ari nauk. Suspensezko pelikula bat bezalakoa duk, dena gris eta ilun zegok, neska bat ageri duk garren artean lepoko gorri batekin...

—Neska bat, e? Beraz hori zuan arestion etxe guztia kanpai dendarekin zeharkatzearen arrazoia? Alproja halakoa, hik neska-laguna behar duk, ez duk bertzerik. Eta erraidak, seguru neska polita zuala, ez? Zer zekiat nik, komikien super heroien antzekoa-edo, Angelina Joliren estilokoa...

—Ezetz ba, serio ari nauk! Eszena beldurgarria duk, lazgarria –haserre bizian solastatzen zion Romainek, nekeaurpegiz izularriturik–. *Putain,* hirekin ezin duk deus seriorik hitz egin. Gainera, jakin dezaan, ez zekiat neska polita ala itsusia duan, hik iratzarri nauk-eta aurpegia ikusi baino lehen.

—Bon hi, lasai hadi mutil, hau umorea!

Biak isildu eta bakoitzak berera jarraitu zuen, mutu.

Romainek *Karnag* arkeologia aldizkariaren azken alea hartu zuen, hasperen etsitu batez. Ireki, eta arreta handirik paratu gabe, orri-pasa aritu zen, argazkiak behatuz gehienbat.

Kilian jatorra zen, arras, baina batzuetan ez zituen txantxak neurtzen. Txantxak neurtu baino egoerak ez zituen kontuan hartzen. Beti bromatan, beti zirikan, bertzearen aldarteari erreparatu gabe, eta ditxosozko ametsak bene-

tan kezkatua zeukan Romain. Hagitz gaizki egiten zuen lo, nekatuta egoten zen beti, leher eginda batzuetan, eta Kilian txantxa goiti txantxa beheiti denbora guztian.

Esku artean zeukan aldizkariko argazki batek bere atentzioa deitu zuen. Hainbat jende ageri zen kristalezko bitrina baten inguruan, eta bitrinaren barnean sandalia zahar eta nahikoa zikin bat, bertzerik gabe. «Harri Aroko sandalia Konstantza lakuaren ondoan» zioen argazkiaren azpiko titularrak. Hori ikusitakoan artikuluaren irakurketari lotu zen. Harrigarria. Alemaniako arkeologo talde batek eman zuen aurkikuntzaren berri eta ia bortz mila urte izanagatik ukitu gabe bezala zegoen sandalia. Konstantza lakuaren ertzean dagoen herrixka baten aztarnategian agertu zen hogeita hamaseiko zenbakikoa izanen zen sandalia, eta arkeologoek sentsazio arkeologiko moduan definitu zuten.

Bi hitz horiek gelditu ziren Romainen buruan dantzan. Pentsakor, eta begirada argazkian josita, behin eta berriz errepikatu zituen bere baitan. *Sentsazio arkeologikoa, sentsazio arkeologikoa, sentsazio arkeologikoa...* Imajinaezina egiten zitzaion pentsatzea zer senti zitekeen bertze pertsona batek bortz mila urte lehenago landutako larrua ukitzean. Harriak bai, historiaurreko gizakiak zizelkatutako hamaika harri zituen ukituak, hala cromlechak, trikuharriak nola piramideak, baina erran bezala, harri hutsak ziren, eta euria zein haizearen erosioak egon zitekeen magia guztia ezabatzen zuela iruditzen zitzaion. Sandalia aldiz larruzkoa zen, eta, arkeologoen arabera, egileak landu bezala zegoen, bortz mila urteko magia eta energia guztiarekin. Romainek munduko urre guztia ordainduko zukeen horrelako aurkikuntzaren bat egiteagatik, bere *sentsazio arkeologiko* propioa izateagatik.

—Hi Romain, barka ezak, eta ez diat hire ama izan nahi, baina ez baduk ipurdia mugitzen autobusa galduko duk.

—*Merde!*

Kilianen hitzek Alemaniako Konstantza lakutik Chiapaseko San Cristobal de las Casas-era bueltatu zuten Romain, tupustean. Jauzi batez zutitu zen, eta ordularia begiratu zuen. Bortz minutu falta ziren autobuserako eta, aldizkaria eskuetan, gosaldu gabe eta gailunboetan zegoen oraindik.

*Hara bi: zu bat eta bertzea ni*

## Lorea eta intsektua

Palenqueko gune arkeologikoa Lakandona oihanaren azpian egon da berriki artio, altxatua, garaien sekretupean ezkutatuta, landaretza emankorrak irentsirik. Egun, gunearen eremu ttiki bat dago turismorako egokitua, baina anitz dira oraindik deskubritu gabe dauden eraikinak, edo ikertu gabe hobeki erranik. Izan ere, altxor bilatzaileek zein lapurrek oihanean barreiaturik dauden tenplu eta jauregi gehien-gehienak arpilatu dituzte, eta horrela frogatzen dute eraikinetara sartzeko egindako zuloek eta txikizioak.

Maskarak, urrezko eta zilarrezko objektuak edota material ezberdinez landutako figurak eta idoloak ebatsi dituzte, baina benetako altxorra, kultura hauen sekretuak, oihaneko zuhaitzen azpiko harrien artean daude oraindik.

Hernán Cortés konkistatzaile basati eta gupidagabea lur hauetara ailegatu baino pare bat mende lehenago utzi zuten maiek Palenque naturaren eskuetan. Zergatik? Zer gertatu zen hiri garrantzitsu honetan? Zergatik abandonatu zuten?

Batzuk tximeleta efektua aipatzen dute. Antza, tximeleta txiki baten hegalen mugimendu inuzenteak alimaleko haize erauntsia sor lezake munduko bertze puntan.

Yucataneko penintsulan El Miradorreko adibidea aurki daiteke, inguru guztia kontrolatuz lehen estatu maia bila-

katu zena seguruenik. Piramide erraldoiekin, galtzadekin eta behatoki astronomikoekin, maien aro preklasikoaren erreferentzia da. Honen gainbehera ekarri zuen *tximeleta* ezaguna da dagoeneko: eraikin publiko zein pribatuak edertzeko karea erabiltzen zuten. Kare hori lortzeko ikatz-labeetan berotzen zuten kareharria eta, labeak martxan mantentzeko, arbolak moztu eta moztu aritu behar izan zuten, ez zegoen bertzerik. Euri garaiak heldu zirelarik ordea, lurra kontzeko arbolen sustraien faltan, inguruko zingira eta lakuak ito egin ziren euriak ekarritako lur guztiarekin. Soroen produktibitatea handitzeko behar zuten ongarria zingira horietatik ekartzen zuten. Zingirak eta ongarria desagerturik, beheiti egin zuen jakien ekoizpenak, eta jakirik ez den tokian jenderik ere ez.

*Igelak ez du bizi den putzua lehortzen* zioen atsotitz inka batek, eta dirudienez, maiek ez zuten ezagutzen, edo El Miradorren ez zuten kontutan hartu bederen, eta mendeetan zehar hazitako hiri erraldoi eta dotorea, oihan erdiko hiri-mamu bihurtu zen, handikeriaren aterabiderik gabeko katea itxiz.

Palenquen, beharbada, horrelako zerbait gertatuko zen. Baina zein izan zen zehatz-mehatz Palenque hiriaren abandonua bulkatu zuen *hegal mugimendua*?

Gertakari hauek guztiak ikertzeko egitasmoan Mexikoko UNAM eta Bretainiako Renneseko unibertsitatea zeuden, ahalik eta galdera gehienen erantzuna bilatzeko zereginetan buru belarri. Klima, landaretza, piramideak zein hauen glifoak ari ziren ikertzen bertzeak bertze, diziplina arteko egitasmoan. Bai Romain bai Kilian ere atal arkeologikoan ari ziren parte hartzen.

Romainek gazte-gaztetik egiten zuen amets gotorleku eta piramideekin. Erakarpen arkitektoniko honetatik etorri zitzaion Historia ikasteko grina. Monumentu megalitikoetatik hasita XIX. mendeko gerra-gotorlekuetara, kultura ezberdinen piramide nahiz dorreetatik igarota, arkitektura ezberdinek liluratu egin zuten betidanik. Ez

zen harritzekoa. Granvillekoa zen Romain, Normandiako mendebaldekoa, eta ikusgarriak dira hiri honen alde zaharreko eraikin gotortuak, itsasoko amildegietan zintzilikatuak ageri direnak. Ezagutu dugunok aise imajina dezakegu Romain txikia gerretara jostetan Granvilleko harrizko paretatzarren artean.

Lagunek arkitektura ikasteko erraten zioten behin eta berriz, berari aldiz, ez zitzaion ezta burutik pasa ere egin. Erakarpen arkitektonikoa amua zen soilik, kultura eta zibilizazio ezberdinetan sakontzeko amua baino ez.

Egitasmoaren atal arkeologikoko lan-taldeko kide gehienak Palenqueko herrian bertan zeuden ostatu hartuta, aterpe batean eta bi apartamentutan. Gainerakoak, Romain eta Kilianekin zortzi osotara, San Cristobal de las Casasen, lau apartamentutan binazka. Hasierako banaketan Palenquen egokitu zitzaion Kiliani, gune arkeologikotik ordu erdira edo, baina berehala moldatu zuen aldaketa Romainekin egoteko. Bertzeekin ez zen gaizki moldatzen baina Romainekin erosoago egoten zen. Unibertsitateko bortz urteak elkarrekin egin zituzten eta, denbora honetan guztian, elkarrekin bizi izan ziren Rennesen, ikasleen etxe batean. Izaeraz arras ezberdinak izanagatik ongi ezagutzen zuten elkar eta horrek Chiapasen eman beharreko urtean bizikidetza erraztuko zuela pentsatu zuten.

Kilian Brestekoa zen, bretoia. Ikasle fina eta arduratsua. Pertsona goxo eta pazientzia handikoa, bere moduan baina beti entzuteko prest zegoena, eta gutitan haserretzen den horietakoa. Hori bai, tarteka-marteka, egun horretan Romainekin gertatu bezala, arazo ttikiren bat edo bertze izaten zuen bere umore beltza zela eta. Gauza gorrik ez betiere. Romain baino bi urte gazteagoa zen, beharbada ez hain heldua, edo hain serioa, eta, batzuen ustez, umorea defentsa moduan erabiltzen zuen. Egoeraren batean nondik atera ez zekienean ia beti txantxa batez erantzuten zuen, larritasuna kendu nahiz nolabait.

Izaera ezberdinekoak ziren, bai. Kilian ordenatua eta lasaia, Romain despistatua eta tematia. Uste guztien kontra baina, ederki moldatu ziren hasiera-hasieratik. Batek falta zuena bertzeak zeukan, eta alderantziz, apartamentuan erabateko oreka erdietsiz kasik. Loreek eta intsektuek daukaten hartu-emanetan bezala. Intsektua nektarra ebastera joaten da eta loreak utzi egiten dio. Honen truke, eta intsektuak jakin ez arren, bertze loreak polinizatzen dira intsektuaren hanketan itsatsirik gelditzen den polenarekin, naturaren idatzi gabeko paktua osatuz. Romain eta Kilianen laguntasunarena bezala akaso. Hori bai, nor lorea eta nor intsektua?

*Solas zintzoak guttitan dotore,*
*solas dotoreak guttitan zintzo*

## Cuzco

Ilun zegoen, eta zakur gosetuen aieneak entzuten ziren soilik. Wacaypata plazaren bazter batean, itzaletan bildurik, mertzenarioak pazientziaz eta sugegorriaren begiradaz behatzen zuen katedraleko atea. Erro herdoilduen intziriek gotzainaren irteera iragarri zuten eta, segundo batzuk geroago, bere urratsen hotsak karrikan beheiti galdu ziren. Mertzenarioak aitzina egin zuen tenpluaren ateraino. Espero bezala, ez zuen oztopo handirik aurkitu barnera pasatzeko.

Leku hauek norbaiten jainkoaren etxea izanen dira, baina zinez beldurgarriak ere. Areago gauez. Jesus delakoaren sufrikarioa beirateetan, margoetan, eskulturetan... Tortura apaingarri denean. Artelanetako aurpegi izularrituek mertzenarioaren ezusteko bisita zaintzen zuten, piztutako kandela bakan batzuen argi dantzagarrien laguntzaz. Mertzenarioak bazekien nora joan behar zuen, eta denbora

galdu gabe, Tupac Amaru Inkaren hilobirantz abiatu zen. Honen aitzinera ailegatu zelarik irribarre anker bat marraztu zen bere aurpegian eta berokiaren azpian zeraman pikotxa aterata, kolpeka hasi zen, deabruturik. Kolpe hutsek katedraleko margoen orro isilak estali zituzten. Tupac Amaru Inkaren hezurrak biltzen zituen harrizko kutxaren harlauza berehala hautsi zen eta, leherketa baten uhinaren gisan, zoko-usain usteldu eta sendo batek katedral barneko aire guzti-guztia bereganatu zuen, atmosfera ezin arnastuzkoa bihurtuz. Ia 500 urteko itxialdia, gorrotoa, inpotentzia, mendeku grina, damua, duintasuna... hori dena eta gehiago arnas zitekeen hilkutxatik sortzen zen kiratsean.

Mertzenarioak zapi batez estali zuen ahoa, eta pikotxaren laguntzaz, hezurrak mugitzen hasi zen, behar zuenaren bila.

—Hemen hago, puta-seme halakoa –xuxurlatu zuen bere kolkorako irribarre ankerra galdu gabe.

Tupac Amaru Inkaren kaskezurra hartu egin zuen. Oihal zahar batean bildu, agindutako paperak bota, eta sartu bezala atera zen, gibelera begiratu gabe, ia 500 urte lehenago Inkaren dekapitazioaren lekukoa izan zen plaza bera zeharkatuz eta gaueko laino beltzetan berehala desagertuz.

***

—Bai Mendoza andereñoa, bortz minuturen buruan hartuko zaitu.

Haydée Mendozak ez zeukan presarik, pazientzia aldiz, ausarki. Gotzainarekin solastatu ahal izateko laugarren saiakera zen hura. Zirudienez, hiru egun lehenago katedralean gertatutakoaren inguruan zurrumurruak ekidite aldera, ez zuten gehiegi solastatu nahi Artzapezpikutzan eta, akaso, arrazoi hori bera zen ere Haydée Mendozari, *La Jornada* egunkari mexikarraren kazetariari, aurreko egunetan

harrerarik ez egiteko, prentsan gehiegi ateraz gero berria bolo-bolo zabalduko zelakoan mundu guztian. Laugarrenean agertu zelarik berriz, harrera ematea onartu zuen gotzainak, gogo txarrez izan bazen ere.

—Egun on Mendoza andereñoa, eser zaitez faborez –gotzainaren solas gozoen gibelean ezinegon punttu bat antzeman zitekeen.

—Egun on gotzain jauna –Haydéek ere ezti–, galdera guti batzuk baino ez dira izanen, ez naiz anitz luzatuko. Deus baino lehen eskerrak eman nahiko nizkizuke nire deiari erantzuteagatik. Eskerrik asko aldez aurretik, benebenetan.

Gotzainak buruko mugimendu txiki batez erantzun zien kazetariaren hitzoi. Agerikoa zen erabat ohituta zegoela jendearen laudorioak eta hitz eztiak aditzen. Kazetariak, denbora gehiago ez galtzeko xedez, aferaren gako nagusietara jo zuen:

—Ikusi dudanaren arabera ez zuten inongo aterik bortxatu katedral barnera sartzeko, ezta? Erran iezadazu gotzain jauna, ohikoa al da katedralaren atea irekia egotea gauez?

—Ez, ez, ez, ezta pentsatu ere. Horrela izatekotan lapurren habia litzateke gure katedrala. Atea itxita zegoen, egun horretan nik neuk itxi nuen gainera.

—Bada, ez zuten bortxatu.

—Beheiti bota erran nahi baduzu, ez, ez zuten bortxatu. Nolanahi ere, imajinatu nahi dut ateen irekitzeko metodo modernoagoak egonen direla gaur egun, atea beheiti bota behar izan gabe...

—Lapurrek, edo dena delako pertsona horiek, giltzaren kopia bat eskuratzeko modua izan dutela pentsatzeko aukerarik bada?

—Begira Mendoza andereñoa –erran zion gotzainak begitarte gogorraz. Pazientzia uste baino fiteago ari

zitzaion agortzen elizgizonari–, uler dezaket katedraleko hilobi baten profanazioa erakargarria eta morbosoa izan daitekeela prentsarako, baina, eta zeharka bada ere, aditzera eman nahi duzuna da *gaiztakeria* horren arduradunak parrokiaren barnean daudela, sentitzen dut erratea baina oker zabiltza. Ez dago fededun baten bakea profanatzea baino aberrazio handiagorik.

—Barkatu gotzain jauna, baina oker ez banago Tupac Amaru Inka ez zen fededuna, ez? Fededuna, kristautasunaren ikuspuntutik erran nahi dut.

—Ba bai, oker zaude andereñoa –moztu zion gotzainak zorrotz–. Bataioa onartu zuen hil baino lehen, baita kristoren gorpua hartzea ere.

—Hartu… tira, hartu zuen bai, heriotzara kondenatu eta gero. Mehatxupean. Horrelako xantaia onartzeari nik ez nioke preseski fededun izatea deituko.

—Beno, aski da andereño, ez gara hona eztabaida antzuetan denbora galtzera etorri. Zer edo zer gehiago baldin baduzu ongi, bertzenaz…

—Bai, azken gauza bat. Poliziaren bertsioaren arabera esku-orri edo panfleto batzuk agertu ziren katedralaren barnean profanazioaren gauean, ezta?

—Bai, hala da.

—Ikus dezaket baten bat?

Hasperen egin zuen gotzainak, erabat pazientzia galdua dagoeneko, eta eskuko erlojua begiratzeko keinua egin zuen, denbora eskasia adierazi nahiz.

—Tori, hemen daukazu bat –erran zion gotzainak idaz-mahaiko kaxoi batetik esku-orrietako bat atereaz–. Ikusi ikusi nahi duzun guztia, baina fite, presatua naiz eta arras berandu egin zait jada.

Haydéek momentuan ez zuen deus ulertu baina ahal bezain agudo kopiatu zuen bere kaierean panfletoan ageri zen testua.

***

Egun guztia Cuzcoko karriketan barna ibili ondoren leher eginda zegoen Haydée Mendoza. Hiriko galtzada--harriek oinak nekatu zizkioten, poliziek eta apaizek burua. Hoteleko ohatze gainean amilduta posta elektronikoa begiratu zuen. Mezurik ez. Ordenagailu eramangarria alde batera utzi eta *lapurrek* zabaldutako esku-orrien testua kopiatua zeukan orrian ireki zuen kaiera. Arretaz behatu zuen.

*MESIAS BERPIZTERA DOA* zioen mezu nagusiak. Azpian, zenbaki konbinazio ezberdinak: *369+12369/963/ 147+369/369 /741+1235789*. Esku-orriaren maketazioa itxiz *LICET AB INITIO* esaldia eta beheitiko aldean sinadura zirudiena: *Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua*.

Haydéek kopeta zimurtu zuen. Talde ultrakatolikoa bazen, eta horrela zirudien, ez zeukan horren berririk ordura artio. Agian Elizaren baitan egoten diren sekta sekretu horietako bat izan zitekeela pentsatu zuen, edo bertzerik gabe, eta gotzainak erran bezala, *gaiztakeria* bat baino ez. Edozein modutan, *mesias berpiztera* bazihoan, horren berri izanen zuela pentsatu zuen irribarre ironiko batez.

*Urruneko eltzea urrez, hurbildu eta lurrez*

## Harmailak

Autobus geltokira ailegatu zen Romain, merkatuko estalki baxuekin eta hauek lotzen zituzten sokekin ia bi

aldiz muturkatu ondotik. Autobuseko motorraren harrabots marrantatuak karriken isiltasun goiztiarra urratu zuen segundo guti batzuk geroago. Eguna hastera zihoan, eta motorren asotsek diana nahigabetu baten lana egiten zuten.

Kilian Hemingway-en «Zaharra eta itsasoa» liburuan barneratzen zen bizkitartean, Romainek, erdi lo oraindik, autobuseko kanpoaldea behatzen zuen kristaletik. Erdigunetik urrundu ahala San Cristobal de las Casaseko etxe kolonialek zementuzko etxe karratu, txiki, eta areto bakarrekoei bide egin zieten, txapazko txabolen eremutik igarotzeko azkenik. Hiru eraikin ezberdin, hiru errealitate ezberdin, hiru bizimodu ezberdin. Hiri beraren osagaiak ordea, herri baten ispiluak.

Haizeak nekez dantzarazten zuen bandera nazional erraldoia gero eta txikiagoa ikusten zen, gero eta urrunago, mendiko bidearen bihurgune baten gibeletik desagertu artio.

Autobusak pazientziaz egiten zuen bere bidea, abiadura kontrolatzeko xedearekin gobernuak errepidean ezarritako baden bakoitzaren aitzinean ia gelditzeraino balaztatuz, xuabe-xuabe igarotzeko gero. Jendea bidegurutze guztietan metatzen zen, edozein garraiobideren esperoan. Berdin autobusa nola kotxea, edo furgoneta, edota suertatuz gero, kamioi baten erremolkea.

Bidaiariek sartu-atera egiten zuten bizkitartean Romainek den-dena behatzen zuen neke-aurpegiz: paisaia, zirkulazioa, jendea… inguruan zegoen guztia, baina inguru horretatik kanpo, zientzialariak laborategian zelulak mikroskopiotik behatzen dituen gisan. Bidegurutze bateko egoera deigarria egin zitzaion. Errepidearen alde batean publizitatez beteriko saltoki txikiak zeuden, produktu ezberdinen marken iragarki handien esaldi ponpoxoez atonduak. *Beti zurekin, goza ezazu, bizi ezazu, izan zoriontsu gurekin* eta halakoak.

Bertze aldean berriz, zementuzko saltoki bakarra, publizitaterik gabea. Produktuen marken ordez, indigenen aldarrikapenak ageri ziren paretetan margotuak, eta multinazionalen kartelen tokian oihalezko pankartak. Saltoki horren aitzinean makilez eta toldoz muntatutako estalkia zegoen, eta estalkiaren azpian, errepide aldera begira, berrogeita hamar bat nekazari indigena lerroan eserita. Indigenek *pasamontañas* beltzekin estaltzen zituzten beren aurpegiak.

*Nor demonio ausartuko duk kaputxadunen artean pasatzera zerbaiten erosteko?* galdetu zion Romainek bere buruari irriño bat eginez.

«*Centro de Comercio el Nuevo Amanecer del Arco Iris*» irakur zitekeen gaineko aldean. Sarreraren alboetan, paretan dilindan, atorra koloretsuak, ureko plastikozko botak eta Che Guevara nahiz Markos komandante-ordearen elastikoak zeuden salgai. Lurrean, frutaz betetako kutxa batzuen ondoan, neska beltzaran gazte bat ikusi zuen Romainek, *pasamontañas*ik gabe, bizkarrez eserita. Errepide aldera jiratu zelarik, aurpegia ikusi zitzaion eta, Romainen harridurarako, ez zen indigena. Hor zegoen ordea, zapatisten artean, batekin zein bertzeekin kalakan.

Romain neskaren gibelean zegoen pankartaren aldarrikapenen zerrenda luzea irakurtzen ari zela, autobusak arrankatu egin zuen, bidegurutzea gibelean utziz.

—Ailegatu gaituk –erran zion Romainek Kiliani nagiak atereaz.

Ez zuen oraindik Palenqueko bidea sobera ongi ezagutzen baina landaretzaren oihana itxurak horrela adierazten zion. Euria eta beroaren eraginez, naturaren leherketa ikus zitekeen, bere gordintasun osoan, eta landareak errepideraino ailegatzen ziren kasik. Romainek arras gustuko zuen horrelako landaretza, dena ezberdina eta dena berdina aldi berean.

***

Maiek Palenque abandonatzearen hipotesietako bat idorte handi batena da. Zinez ikaragarria eta sinestezina egungo begiz ikusita. Nola da posible orain oihana denak mende guti batzuk lehenago halako idortea jasan izana? Orain artio hiru idorte handi baieztatu dituzte adituek zonaldean: 810. urtetik aitzin bederatzi urteko bat, 860. urtetik aitzin hiru urteko bertze bat eta 910. urtetik aitzin sei urteko bat. Beraz, ikusteko zegoen ea idorte hauetako batek Palenqueko hiriari eragin zion bere kolapsoa eragiteraino edo bertze ezerk ekarri zuen hiriaren gainbehera.

Romainek eta Kilianek parte hartzen zuten proiektua arras egoera txarrean zegoen gune batean garatzen zen. Harri mukuruak zein pareta eroriak zuhaitz eta mota guztietako landarekin nahasirik zeuden, desolazio ukituko eta beldurrezko dekoratu fantasmagorikoa eskainiz. Romainek lehenengo aldiz ikusi zuelarik Irakeko Museo Nazionalaren antza hartu zion, non Historiaren altxorrak gizakiaren zekenkeriak bortxaturik ageri ziren.

Bagdadeko museoa berrireki zeneko irudiak zituen Romainek buruan. Espainia eta Erresuma Batuen laguntzarekin Amerikako Estatu Batuek eramandako gerra ilegalean (gerra legalik baldin badago), Sumer, Babilonia eta Siriako zibilizazioen hondarrak gordetzen zituen museoa koldarki arpilatua izan zen, eta hamaika mila pieza baino gehiago desagertu egin ziren. Ikuspuntu historiografiko batetik, azken mendeko krimena. Katastrofea. Sei urte itxita egon ondoren, eta Jordanian, Sirian eta Estatu Batuetan lau mila pieza inguru berreskuratu eta gero, arpilatzea ahalbidetu zuten interes eta gobernu berberek museoaren berrirekitzea babestu zuten segurtasun neurri handien artean.

*Hypocrites* pentsatu zuen Romainek irudiak telebistan ikusi zituelarik, *hobe zenuketen segurtasun neurri horiek*

*guztiak arpilatzea ekiditeko hartu izan bazenituzte, eta ez orain, urde zikinak.*

Palenqueko kasuan, oihanak irentsi izanak eta altxor-bilatzaileek egindako suntsiketek ematen zioten ukitu apokaliptikoa, baita Historiarendako galera dramatikoaren sentsazioa ere.

Palenque eta Bagdad, Bagdad eta Palenque. Batean zein bertzean, galdutako altxorren benetako balioa, ebatsitako balioa, ez da inoiz jakinen seguruenik.

Romain harmaila batzuetan ari zen lanean. Lurrezko tumulu bat zirudiena glifoz betetako harmaila izan zen 15-20 bat zentimetro lur garbituta, eta aurkitu eta berehala kanaberazko lehor batez babestu zuten. Romainek nahikoa ongi marrazten zuenez, harmaila horietan paratu zuten lanean indusketaren arduradunek. Brotxa ttipi batez glifoak pazientziaz garbitu, behe-erliebeei argazkiak atera, paperera pasatu, UNAMeko aditu baten laguntzaz glifoak aztertu eta interpretatu; horretan laburbil zitekeen bere lana guti goiti-beheiti.

Dagoeneko agertutako glifo guztietatik bat baino ez zuen ezagutzen, *Hunahpu*, hots, artoaren jainkoaren semea, erregeen patroiaren glifoa. Hala ere, bere ezjakintasunak ez zion sobera kezkatzen. *Pausoz pauso, orain harrian zizelkatutako glifoak ongi dokumentatu, eta gero gerokoa* erraten zion bere buruari hurrengo egunetan etorriko zen UNAMeko adituarengan pentsatuz.

Bero itzela egiten zuen, sapa, eta kanaberazko lehorraren azpian egon arren nekez jasan zitekeen bero sargoria. Gainera, oihaneko hezetasunak areago kargatzen zuen giroa. Arkeologo gaztea izerdi patsetan zegoen.

—*Il fait une chaleur à crever* –erran zuen ur botila hartuz eta sekuoia erraldoi baten itzalean eseri bitartean trago baten hartzeko.

Ez zekien zein ordu izan zitekeen, baina eguerdi behar zuen, gosetzen hasia baitzen. Landaretza basatia maite

zuen gisa berean, gorroto zuen bero sapa hura, eta Normandiako klima freskoa gogoratu zuen malenkoniatsu, nahiz gero hamaika aldiz madarikatu Normandian usu egiten dituen egun euritsuak. Sekuoiaren magalean eserita apur bat erlaxatu zelarik, lo ezak eragindako neke guztia tupustean etorri zitzaion kolpe batez. Hezetasuna, eguzkiaren aizkorakadak, nekea, izerdi itsasgarria, gosea, eulitxoak, Lakandonaren oihu isila… inguruan zeukan guztia koktel jasangaitz baten osagai bilakatu zitzaion bat-batean. Logalea sartu zitzaion baina ezin erran lo zegoenik, ezta iratzarririk ere. Harmailetako glifoak jira-biraka hasi zitzaizkion, bera eta sekuoiaren inguruan bueltaka, behin eta berriz, behin eta berriz, amesgaizto baten moduan. Artoaren jainkoaren glifoa, bere semearena, jaguar beltz bat orain, suge lumadun bat gero, buru moztuak zirietan iltzatuak, artoaren jainkoa berriz ere, gazte baten sakrifizio odoltsua, jaguarra beregana, bihotz bat odolez borborka, eguzki eklipsea, eta… blaust! Begiak ireki zituen supituki eta harmailetara abiatu zen ziztu bizian, zeharo asaldatuta. Behe-erliebe guzti-guztiak errepasatu zituen banan-banan eskua gainetik pasatuz, braillez irakurriko balitu bezala. Hondar boladan maiz izaten zuen amesgaiztoan sutan ageri zen neskaren zintzilikarioaren sinboloa agertua zitzaion jainko, suge, jaguar eta sakrifizio artean sekuoiaren magalean bizitako une surrealistan.

Harmailetan aldiz ez zen ageri. Are gehiago, ez zeukan lotura ikonografikorik. Kezkatzen hasia zen benetan. Haluzinazioak ote ziren?

Iratzarririk amesten ala haluzinazioak, nahi bezala deitu, azken finean, ametsak eta haluzinazioak, ez ote dira gauza bera? Baiezkoan zegoen Romain. Beharbada ezberdintasun bakarra da batzuk lotan gaudelarik izaten ditugula eta bertzeak esna, ez bertzerik.

—*Salut* Romain –agurtu zion Kilianek hurbildu ahala–, bazkaltzeko tenorea duk. Hi –Romainen aurpegira begira–, ongi hago? Zuri-zuria hago…

*Aho hetsitik ez eulirik sartzen*

## Hitzordua

—Lan bikaina egin duzu, zorionak. Pater harro dago zutaz eta eskumuinik beroenak bidaltzen dizkizu.

—Ez da ezeren, plazer handia izan da indio zikin horren loa etetea.

Gaueko lainoek babesten zuten hitzordu sekretua.

—Hedatu zenituen esku-orriak?

—Bai jauna, hilobiaren inguru guztian, eskatu bezala. Dena dela, zer ziren ageri ziren zifra horiek guztiak, Mesias berpiztuko den egunaren data ezkutua?

—Hori zuri bortz. Zure lana horien zabaltzea zen, eta kitto. Nolanahi ere, uste baino fiteago ikusiko dugu noraino sartua den gaizkia gizarte hereje honetan, eta ez zalantzarik izan zuk zeuk ere hori dena ikusteko aukera izanen duzula. Nola edo hala, eman diegun aukera profitatu ala ez, Gurutzearen Mendeku geldiezina abian da jadanik, eta luze gabe itxiko da ziklo heretikoa.

Kotxe baten etorrerak eten egin zuen elkarrizketa istant batez. Urrundutakoan, elkarrizketari lotu ziren berriro karrika estuaren itzalen artean.

—Ekarri al duzu kaskezurra?

—Bai, noski, hemen da. Eta nire sosa?

—Hemen daukazu. Agindutakoa gehi propina txiki bat, Paterren esker onaren adierazle.

Trukea egin zuten.

Batek mendeku gosez behatu zuen Tupac Amaru Inkaren kaskezurra. Bertzeari, dirua ikustean, hamar metroko irribarrea agertu zitzaion aurpegian.

—Beraz, hemen akitzen da gure tratua, ez? Ohore handia izan da Paterrentzat lan egitea. Nahi duzuen artio beraz –mertzenarioaren hitzei poz efeberszentea zerien.

—Bai, berdin.

Mertzenarioak buelta eman eta etorritako bidetik ospa egitekotan zela, bere solaskidearen ahotsa aditu zuen berriro:

—Barkatu, barkatu… kasik atzentzen nuen…

—Mmm?

—Paterrek zu ezagutu nahiko zintuzke, ea zure… –eskua sakelan sartuta zilarrezko nabala atondua atera zuen.

Mertzenarioa egoeraz jabetu zenerako, lurrean zapla erorita zegoen.

Sosa lurretik bildurik, lauhazka handian desagertu zen hiltzailea, mertzenarioa odolusten zen bizkitartean. Hurrengo goizean mertzenarioaren gorpua aurkitu zutenerako hilotz zegoen, odolaren gorri bizia ilun idortua.

*Norat gogoa, harat zangoa*

## Nefertiti La Iguana-n

Harmailetako glifoen paperezko kopiak ordenatzen ziharduen Romainek, San Cristobalgo apartamentuko egongela-sukaldeko mahai biribilean. Garrantzi gehiegirik eman gabe, azpitik goiti eta eskuin-ezker ari zen. Istant batez, zalantza egin zuen ordea. *Ze aldera irakurriko dituk? Beharbada bere garrantzia izanen dik antolaketak.* Berriz hasi zen, goititik beheiti eta ezker-eskuin, parean zeukan harmailetako argazkia jarraituz. Ordena berria hastean, bigarren espaloirako behar zuen glifo bat lehenbizikoan paratua zuela konturatu zen. Paper guztiak bildu eta

hasiera-hasieratik hasi zen, glifoak goiti glifoak beheiti. *Hau eromena!* Oihana bezala, denek berdinak ziruditen bere ezberdintasunean.

—*Ça va Romain?* –galdetu zion Kilianek bere logelatik ateraz.

—Hementxe, jainkoak madarikatzen, eta jadanik zorabiatzen hasia kasik. UNAMeko aditua etorriko duk bihar eta glifoen kopiak berezko ordenan eraman nahi nitian baina ez zegok modurik. Puska bat osatu, eta tarte baten buruan eta deus ukitu gabe, originalen argazkia begiratu eta hankaz goiti zegok dena, ez dik bat egiten. Edo bilatzen diadan irudia ez diat aurkitzen eta aurkitzen diadanean bertze leku batean zegok paratua, edo bilatzen ez diadanean hortxe agertzen zaidak. Hau desesperazioa hi!

—Bon, ez kezkatu, korriganen gauza izanen duk hori. Beharbada baten bat ekarri genian motxiletan konturatu gabe.

—Ze korrigan eta ze korriganondo! Ze demontre duk hori?

—Ez dituk korriganak ezagutzen? Hi nongoa haiz, Normandiakoa ala Marseillakoa? Urde pito mediterraneoa!

—Bon, barkazak Kilian, baina ez nagok hire pitokeriak entzuteko umorez.

—Hi, don Ozpin, lasai hadi pixka bat demonio... Korriganak Bretainiako ipotxak dituk, eta gehien maite ditean gauza gizakiei izorratzea duk, guri ziria sartzea. Zertaz uste duk bada, arkeologoek ez diteala Karnag-eko menhirren kopurua zehaztea erdietsi oraindik? Toki batekoak zenbatu eta gero korriganek tokiz aldatzen ditiztelakotz. Badakik, adarra jotzearren.

—Hara bertzea! Erran nahi duk mamu horietako bat duala nire paperak desordenatzen ditiana?

Bekainak goitituz eta irribarre zabal batez eman zion Kilianek baietza.

—Zakurraren putza –jarraitu zuen Romainek–. Eta hozkailua husten diana –normandiarrak ironiaz–, mamu horietako bat ere, ez?

—Mamurik ez Romain, korriganak dituk, txiki-txikiak, antilope hankekin eta giza gorputza gerritik goiti. Adar okerrak dituzte eta belarri puntadunak belarritakoz beteak, ile eta bizar luze-luzeak...

—Bon, bon –moztu zion Romainek–, falta niana, haur ipuinetan sinesten dian pisu-kidea.

—Badakik zer? Glifoz, mamuz, ipotxez eta zomorroz nazkatu nauala gaurkoz, banoak kalera itzulixka egitera ea burua aireratzen zaidaan errealitatean.

—Segi, segi, bai, eta hire errealitate karratu horretan korrigan baten bat harrapatzen baduk ekar ezak etxera afaltzeko –erran zion Kilianek isekari berriz ere–, hozkailua hutsik zegok eta.

***

Alde guztietara begira baina arreta inon paratu gabe zihoan Romain San Cristobal de las Casaseko karriketatik, alderrai. Bere inguruan, mota guztietako jendea harat-honat: turistak argazki-kamara lepotik dilindan; kaleko saltzaileak lepokoak, pultserak eta bertzelako artea eskainiz; inurrien pare oihal koloretsuetan zama bildurik zebiltzan emakume indigenak...

Bien bitartean, Kilianek aipatu korriganak buruan jira--biraka zebilzkion Romaini. Bat-batean, bolboraren formula aurkitu izan balu bezala, karrikaren erdian gelditu zen seko. *Horixe duk!* erran zuen bere baitan. Beharbada, bere amesgaiztoaren lepokoaren sinboloa pertsonaia mitologikoa izan zitekeen. *Zergatik ez?* Jakin-minari ezin eutsiz, hortxe bertan ekin zion bilaketari. Bere urratsetan gibelera egin eta zokalo ondoan dagoen ziberkafera abiatu zen pausu luzeka.

Interneteko bilatzailean «pertsonaia mitologikoak» idatzi eta irudiak botoia sakatu zuen. Aztiak, sorginak, ipotxak, dragoiak... osotara berrehun eta berrogeita hamar mila irudi inguru. Begiratu azkar bat eman zuen gainetik. Bilatzen zuenaren antzekorik ez ordea. Bere ametsetako lepokoaren itxura ezberdina zen, berezia nolabait. Zaldi baten gorputza zen, ederra, sendoa, ez oso altua, zebra baten antzekoa formari zegokionez, baina gorrixka. Aitzineko hanken gainean, zaldiaren lepoak eta buruak beharko zuketen tokian, emakumezko baten gorputza gerritik goiti, greziarren zentauroaren antzera. Emakumearen bularrak biribil-biribilak ziren, aski nabarmenduak, eta ile luze eta kizkurra zeukan. Besoak aldeetara zabaldurik zituen, eskuetan suge uhindu bana kontzen zituela.

Egindako lehenbiziko bilaketa horren emaitzen artean «Adarraren Venusa» deitutakoak izan zezakeen gutieneko loturaren bat, baina ez, eskuan zerbait kontzea ez zela nahikorik deliberatu zuen Romainek.

Deskripzioarekin probatu zuen.

«Emakume zaldia»: fotomontaia moderno eta argazki zoofiliko bakan batzuk kenduta emaitzarik ez.

«Jainkosa zaldia»: deus interesgarririk ez.

«Zentaurideak» markatu zuen, eta agertu zitzaionari begirada bat eman zion. Ez. Zaldi gorputzarekin ageri ziren emakume guztiak arku batekin ageri ziren, eta hortik ez zegoela segitzerik iritzi zion.

«Jainkosa sugeak eskuetan» idatzi zuen bilatzailean, eta emaitza zenbait erdietsi zituen. Irudiak banan-banan begiratu zituen. Zehatz-mehatz bilatzen zuenaren antzekorik egon ez arren, argazki batek bildu zuen bere arreta. Kretako Knosos jauregiko «Sugeen Printzesa» zen. Gerritik goiti izan zitekeen egia errateko: bular biribil-biribilak, aski markatuak, eta besoak zabaldurik eskuetan suge bana. Gerritik beheiti aldiz, bere ametsetako irudian zaldia egonen zen lekuan, mandar moduko batez apaindutako gona luzea zeukan.

Alabaina, eta bertze zerbaiten ezean, honekin konformatu behar. Ziberkafearen arduradun aspertuari orri bat eskatu eta «Sugeen Printzesa»ren irudia inprimatu zuen. Sarean egondako denbora zein inprimaketa ordaintzen ari zela, aitzineko egunean zapatisten kooperatiban autobusetik ikusia zuen neska karrikaren bertze aldean ikusi zuen, oinez, motxila handi batekin. *Hara bertze printzesa* pentsatu zuen, *eta zuk, non duzu jauregia?*

Espioi txar baten antzera, neskaren gibeletik abiatu zen pareko espaloitik zenbait metro gibelago, karrikaz karrika, La Iguana izeneko aterperaino. Neska aterpearen atearen aitzinean gelditu zen, eta sartu baino lehen, norbait zelatan zebilkiola sumatu izan balu bezala, begiratu bat eman zuen bere ingurura. Neskaren begiak saihestu nahian, aterpe pareko ostatuan sartu zen Romain.

Freskagarri bat hartzearen aitzakiapean aterpeko atea zaindu zuen ostatuko mahai batetik. Hamar bat minutu pasatutakoan berriz agertu zen neska, motxilarik gabe oraingoan. Romainen zorionerako, karrika zeharkatu eta ostatu berera sartu zen neska. Garagardo bat eskatuta Romainengandik bi mahaira eseri zen eta liburukote bat poltsotik aterata honen irakurketan isolatu zen.

Jakin-minak errailak inarrosten zizkion Romaini, *nor ote duk?, nongoa?, ze ari duk hemen?* Turista zirudien egia erran, munduan barna barreiaturik egoten diren hippy itxurako motxilero horietakoa, edozein azokan eros daitekeen arropaz jantzita. Mundutan barrena bakar-bakarrik ibiltzeko ausarta behar zuela iritzi zion Romainek, burujabea. Jakin-nahiak estuturik, eta lepoa edozein medikuk aholkatzen ahal duena baino gehiago luzaturik, neska horrekin solas egiteko beharra sentitu zuen. Disimuluz, liburuaren azala begiratu zuen, solasaldia nonbaitetik hasteko aitzakia bila. «Lagun izoztua. Joseba Sarrionaindia». Ez zuen ez liburua ez eta idazlea ere ezagutzen, literatura Kilianen afera zen, ez berea. Ez ezagutzeagatik ez zuen ezta zer hizkuntzatan zegoen idatzia asmatu ere egin. *Lagun*

*izoztua... alemana dirudi, ez? Edo Europako ekialdeko hizkuntza estrainio horietako bat beharbada.* Nolanahi ere, gaztelaniaz jakin behar zuen, edo indigenen hizkuntza gutural horietako bat, zeren eta zapatistekin solasean ikusia zuen errepideko bidegurutzeko kooperatiba arraro hartan.

Kontzientziaren ahots baikor eta ezkorraren antzera, institutu garaiko lagunen aholkuak entzun zitzakeen bere baitan. *Joan hadi Romain*, erraten zion Yves Marie lotsagabeak, *orain duk hire aukera bakarra. Joaten uzten baduk ez duk sekula santan ikusiko berriz. Profitatu ezak patuak muturrera zerbitzatu dian aukera.* Bertzetik ordea, *ez bota hire burua putzura* Pierre lotsatiaren aholkua, *beregana jotzen baduk zuzenean, susaran zegoan ar gosetuaren irudia baino ez duk emanen. Kointzidentzia handia izan duk aste berean bi aldiz ikustea* Yves Mariek berriz, *ez ezak aukera gal, ez diat uste hirugarrengo bat izanen duanik. Zergatik ez?,* Pierren erantzuna, *bi aldiz ikusi badik, zertaz ez hirugarren eta laugarren bat? San Cristobal ez duk hain handia. Erran nahi duana Pierre, baina nesken aferetan hire aholkuak eta ahuntzaren gau erdiko eztula, berdin-berdin. Erraiguk, institutuko lau urtetan, zenbat neskekin ligatu huen? Zero Pierre, zero. Eta hik? Bai, beharbada zertxobait gehiago ligatu huen, baina mugitzen den ororekin saiatzen hintzelako. Zertxobait gehiago ziok, hau alproja! Hi, ligatzea zero eta zertxobait ligatzea ez duk berdin, e? Gainera metodoak ez dik inporta, garrantzitsua emaitzak dituk, emaitzak! Hori erraten duk badakialako bolantak debekatuta zeudeala, itsasoan zegoan guztia arrasatu egiten ditealako...*

Yves Marie eta Pierren arteko ika-mikaz aspertuta, eta *futitzen nauk* iritzita, putzura egin zuen salto Romainek.

—Barkatu, ba al duzu zigarretarik?

*Zein patetikoa haizen Romain* erran zion Yves Mariek. *Tristea erranen nikek nik* Pierrek.

—Ez, ez dut erretzen –arrapostu zion neskak, eta irakurketari lotu zen berriro.

*Beharrik* pentsatu zuen Romainek, berak ere ez baitzuen erretzen.

—Zer da, alemana?

—Zer, barkatu? –galdegin zuen neskak begirada liburutik bigarrengoz goratuz.

—Liburua diot, zer da, alemana?

—Ez, ez... euskara da.

—Ah, zer zara euskalduna? *–ona, oso galdera ona Romain* Yves Marien ironia– Ni Romain naiz, Normandiakoa.

—Aupa –erantzun zion neskak irri txiki batez–, ni Ilargi.

—La Iguanatik ateratzen ikusi zaitut. Oporretan?

—Bai, oporretan bai. Tuxtla Gutierrezen egon naiz egun batzuk, eta San Cristobal bisitatzeko La Iguanan hartu dut ostatu.

*Tuxtlan, e?*, moztuta gelditu zen Romain. Bi edo hiru egun lehenago ikusia zuen berak zapatisten kooperatiban, eta hori Tuxtlako kontrako norabidean zen.

—Eta –berriz Romainek–, denbora anitz ibiliko zara hemen barna?

—Bai, hilabete pare bat gehiago bederen bai. Eta denbora izanez gero Guatemalaraino ere hurbildu nahiko nuke. Eta zu, zer? Zer ari zara?

—Ni? Lan, lan eta lan. Palenqueko indusketa arkeologikoetan ari naiz, eta urte oso bat emanen dut hemen barna guti goiti-beheiti.

—Arkeologoa, e? Karajo! Lan polita, ezta?

—Bai, polita bada, eta arras gustukoa dut, txiki-txikitatik izan nahi nuena edo. Baina ez pentsa, gogorra ere bada. Dagoeneneko hilabetea daramagu hemen eta oraindik ez naiz erabat laketu. Normandiako klima hotzari ohituta, gehiegizkoak dira hemengo beroak.

Neskak ostatuko ordularia begiratu zuen.

—Ederki Romain, plazer handia izan da zu ezagutzea, baina afaltzeko tenorea dut, eta aterpera itzuli beharra daukat. Bon, ea bertze batean elkar ikusten dugun.

—Bai, berdin, ni ere gustura egon naiz... eta... zera... bertze garagardorik ez duzu nahiko, ezta?

—Ez, ez, esker mila, aterpeko emakumeak ezin garbiago utzi dit sukaldeko ordutegia, ordutegi horretan ez banaiz agertzen afaldu gabe geratuko naiz. Eta goseak akabatzen nago...

—Bon, gutienez emailak-edo trukatzen ahal ditugu, ez?

Neskak zalantza egin zuen segundo batez.

—Ongi da, baduzu apuntatzeko paperik?

Izar itzalien argiak luze irauten duen bezala geratu zitzaion Romaini Ilargiren presentzia ostatuan bakarrik gelditu zelarik. Egiptoko Amarna haranean Nefertiti erreginaren bustoa aurkitu zuen arkeologoaren sentsazio bera zeukan, milaka urte lur azpian egon den edertasuna ikustearen lehenbiziko pertsona izatearena alegia. Larru fin-fina, begi beltz sakonak... baita Ilargik ezkerreko begiaren azpian zeukan marka ttipia ere, zeinak Akenatoren emaztearen bustoak falta zuen ezkerreko begia gogora ekarri baitzion. Niloko erregina imigrante ilegala goitizenez ezagutzen zen, 1912an aurkitu eta gero, modu ilegalean atera zutelako Egiptotik Alemaniarako bidean. Ilargik ordea, zerbait ezkutatu arren, ez zeukan imigrante ilegal baten itxura. *Zergatik gezurrik erran?* galdetu zion Romainek bere buruari Tuxtla Gutierrez-eko argudioari bueltaka. *Zertaz erran Tuxtlan egon zarela nik bertze toki batean ikusi zaitudalarik?*

***

Ilargiren emaila kausitu izanagatik Yves Marie eta Pierren zorionen artean egin zuen Romainek apartamentu-

rainoko bidea. Gose zen, eta korriganik ez baina zer edo zer afalduko zuen. Ilunpetan aurkitu zuen apartamentua, Kilian bere logelan itxia zegoela. Atea jo zion.

—*Bonsoir* Kilian, afaldu duk?

—Ez, ez diat afaldu. Idaztera lotu nauk eta, denbora bezala, gosea ere pasatu zaidak konturatu gabe.

—Bon, egon hadi lasai, neuk prestatuko diat zerbait oraingoan. Abisatuko haut.

Kontent zegoen Romain, animatua, eta urrundik nabari zitzaion. Sukalde ttipiko armairuak miatu zituen zerbaiten xerka. Atuna, tipula, piper berdeak, gorriak, txistor puska bat espeziekin, tomateak, arroza... aurkitutako gauza guztiekin paella prestatu zuen; mahaira bildu ziren.

—Zer ari haiz idazten, jakin badaiteke? –Romainek umoretsu.

—Deus, badakik, nire buruko saldak, bertzerik gabe.

—Tira –berriz ere Romainek–, ze saldak dituk horiek bada afaltzea eta guzti atzentzeko adina, hara ba, kontaidak.

—Istorio batekin ari nauk –kontaketari lotu zen Kilian sardexka mahai gainean utzirik–, Parisen gertatzen dituan hilketa batzuen ingurukoa. Afera duk ez zegoala pistarik, eta erailketa kateatuak dituk, biktima guztiak toxikatuak. Azkenean, biktimen arteko lotura bakarra liburu bat duk, eta detektibe batek aurkitzen dik gakoa bukaeran: liburua tinta toxikoz zegok idatzia, eta irakurlea irakurketan aurrera egin ahala toxikatzen joaten duk, liburua bukatzearekin batera erabat toxikatua hil artio.

—Eleberri beltza beraz.

—Bon, denetarik zegok, hilketak, ustelkeria, sexua, umorea...

—Ez zegok gaizki, ideia originala duk. Dena dela, nolatan eman dik orain idazteko zera hori?, lehen, unibertsitatean-eta, ez huen idazten, ez?

—Bai eta ez. Irakurtzea betitik gustatu zaidak, hori hik badakik, eta idatzi... tira, idatzi ere egin izan diat tarteka-marteka, baina ipuin motzak gehienbat. Afera duk Daniel Chavarria Uruguayen sortutako idazle kubatarrari egindako elkarrizketa bat irakurri niala lehengoan, eta erraten zian berrogeita bortz urterekin hasia zela idazten. Arras berandu iruditu zitzaidaan, ez zaik iruditzen? Hortaz, berrogeita bortz urtetara itxaron gabe, buruan nitian hainbat ideia paperean gauzatzen hasteko momentua izan zitekeela pentsatu nian.

—Hori duk hori! Biba hi, Kilian!

*Ez duk omeletarik egiten arroltzerik hautsi gabe*

## Pakal

Goiz hartako lainoari ohikoa baino gehiago kostatu zitzaion goratzea Palenqueko hiri arkeologikoan. Bihotza profanatuta sentitzearen amorruak eragindako lotsa zen. Zedro eta kaoben arteko azken lainoak sakabanatu zirelarik gau iratzarriaren aztarnak azaleratu ziren: arkeologoen lehenbiziko lan-taldea ailegatu zenean segurtasunaz arduratzen ziren zinpekoak hilik aurkitu zituzten, bizkarretik koldarki tirokatuak hirurak.

Lehen begiratu azkarrean ez zuten ebasketarik edo suntsiketarik antzeman. Omar Guzman, Mexiko DFtik etorritako UNAMeko aditua aldiz, berehala jabetu zen egoeraren larritasunaz. Pausu luzeka, erdi korrika, K'inich Janaab' Pakal erregearen piramideko eskailerak igo eta subiranoaren hilobira jo zuen. Zoritxarrez, bere susmorik txarrenak bete egin ziren.

Hirurogei urte eskas lehenago aurkitutako hilobia babesten zuen kristal lodia lehertua zegoen, eta Pakal erregea bera inframunduan irudikaturik ageri zen sarkofagoaren harlauza lau pusketan xehatuta lurrean. Erregearen hezurrak eta berarentzat egindako hil-sariak alde guztietan barreiaturik zeuden.

—*No mames güey!* –egin zuen oihu Omarrek malko bat ihesi zihoakiola kasik– Ez duk posible!

Ikaragarria bada ere, Pakal erregearen hilobiaren profanazioak sarrerako hiru gizonen biziak baino min gehiago eman zion. Polizia, anbulantziak, kazetariak eta kuxkuxeroen arreta gune arkeologikoaren sarreran pilatzen ziren bizkitartean, amorruak Omar Guzmanen errailak bihurritzen zituen hilobi profanatuan.

***

—Ez duzu sinetsiko –erran zion Omarrek Haydée Mendoza kazetariari telefonotik–, den-dena suntsitu dute baina gauza bakarra falta da. Ezetz asmatu!

(...)

Arrapostua itxaron zuen telefonoaren bertze aldetik.

—Horixe bera, Pakal erregearen kaskezurra baino ez dute ebatsi –jarraitu zuen Omarrek kontakizunarekin–, hantxe utzi dute dena, eskeletoaren gainerako hezurrak, zeramikazko figurak, intsentsu-ontziak, bertzelako ontziak, eta ikaragarriagoa dena, erregearen jadezko maskara ere hantxe bertan utzi dute. Badakizu zenbat balio dezakeen maskara horrek merkatu beltzean? Ezin dut imajinatu ere egin...

Bertze galdera batez moztu zion Haydéek telefonoaren bertze aldetik.

—Bai, bai... esku-orri batzuk zeuden han eta hemen barreiaturik. Bat hartu dut. Diktatuko dizut? (...) Apuntatu bada... goitiko aldean «mesias berpiztera doa» dago idatzia, maiuskulaz, bai? Beheiti-beheitien catholic golden eagles, gurutzearen mendekua paratzen du. (...) Honen gainean lice... licet ab initio esaldia dago, eta hau eta goitiko aldarriaren artean zenbaki pilo bat ageri da. Apuntatu: hiru, sei, bederatzi, batuketa ikurra, bat, bi, hiru, bortz, bederatzi, zortzi eta zazpi, barra, bederatzi, sei, hiru, batuketa ikurra berriz, gero bat, lau, zazpi zortzi, bederatzi... ez, ez, zazpi, zortzi, bederatzi, horixe, sei, ez, ez, sei, bortz... bon, badakizu zer? Errazena faxez igortzea izanen da, ez? Bertzenaz, hemen ageri diren zenbaki guztiekin hurrengo urtera artio egon gaitezke. (...) Bai, hori da, aste bat emanen dut hemen, ez dut uste afera honek gure lana oztopatuko duenik, izan ere, hilobia gune turistikoan dago eta gu oihanean ari gara, badakizu, tximino ulularien artean. (...) Ados, ongi da, ahal dudan informazio guztia bilduko dizut. Nolanahi ere, zer edo zer zehatzik nahi izanez gero deitu, baduzu hoteleko telefonoa, ezta? (...) Bai, erran bezala, ez bagara lehenago telefonoz egoten, erredakziotik pasatuko naiz DFra joaten naizenean. Bon, bizkitartean ongi segi, bai, aio, aio.

*Harri batek berak ez du pareta egiten*

## Antzinako Europa

—Pasaportea eta bisa mesedez.

Militarraren ahotsak ezustean harrapatu zuen Romain. Chiapasen zegoenetik askotan ikusiak zituen militarrak han-hemenka errepide bazterretan, kamioi luzeetako konboietan, baina errepide kontrolik igaro behar izatea ez.

Militarrek inguru guztia zuten hartua eta zirkulazioa moteltzen zuten beren ibilgailuak errepidean zeharkatuta. Seinaleak ez zuen zalantzetarako lekurik uzten: «ALTO TOTAL». Militarraren agindua bezala: pasaportea eta bisa mesedez.

Eskatutakoa eman ondotik, autobuseko kristaletik behatu zuen Romainek zirku hori guztia, bere errealitaterik kanpo balego bezala. Autobuseko korridorean, hara-honaka, militar gazte bat zebilen, berde olibaz, buruan kaskoa eta arma eskutan. Bertze militar batek gibeleko eserlekuetako bidaiariak identifikatzen zituen. Dokumentazioa bueltatu eta gero motxilan zeramana erakusteko agindua eman zion militarrak Romaini. Ez zuen deus susmagarririk, baina militarrak arreta eta kontu handiz miatu zuen dena. Eguzki gupidagabetik babesteko lastozko txapela, mauka luzeko elastiko bat, kantinplora, kaier txiki bat oharrez betea, karpeta bat harmailetako glifoen kopiekin, eta guti gehiago. Paradoxikoki, oharrez betetako kaierari gainbegiratu bat baino ez zion eman militarrak, eta kantinplorarekin aldiz, zeharo tematu zen. Litro bateko metalezko kantinplora zen, arrunt horietarikoa, lehenagoko gaseosa botilek zuten itxidura berdinarekin. Azkeneko hau izan zen militarraren buruhauste guztien iturburua. Hamaika buelta eman zizkion ireki nahian, hesteko sistema sakonki aztertuz eta indarka bulkatuz. Kantinplora barneko likido susmagarriaren azterketa misio zinez zail eta neketsua bilakatu zitzaion soldadu zozoari. Arazo handiei konponbide handiak logika aplikatuz, belarri ondoan astinaldi batzuk eman eta, profesionaltasun osoz, motxilan sartu zuen berriro, misio inposible horretatik heroikoki atereaz.

Romain serio zegoen, edo horretan ahalegindu zen bederen, baina bere baitarako ajataka zegoen. Militarrak motxila itzuli zionean barneko barre-algara irri diskretu batez islatu zuen agur moduan. *Gero arte Bonaparte* erran

zuen bere golkorako militarra autobuseko korridoretik urruntzen zela.

***

Eguzkiak ez zuen tregoarik ematen, gupidarik gabe jotzen zuen arkeologoen buruetan. Aurreko eguneko gertakarien ondotik apenas ikusten zen turistarik Palenquen, izan ere, gune turistikoaren atal interesgarri eta handiena, Pakal erregearen hilobia gordetzen duen piramidearen ingurua errate baterako, itxita zegoen ikerketa poliziala egin ahal izateko.

Oihan barneko indusketetan bizkitartean, gertakariek harrituta baina betiko martxan, izerdi patsetan ari ziren arkeologoak.

Romainek pare-paretik begiratzen zituen harmailak, zizelkatutako grabatu bakoitzaren gainean paperezko kopia paratuta. Azkenean, etsiturik, hori izan zen glifoak ordenatzeko modu bakarra. Laminak atzetik aurrera biltzen ari zela, Omar Guzman UNAMeko irakaslea hurbildu zitzaion.

—Lan nekeza zurea –erran zion irakasleak kopetako izerdia zapi batez idortzen zuela.

Romainek ez zekien irakaslea benetan ari zen ala, lurretik glifoen paperezko kopiak biltzen ikustean, ironikoki.

—Bada... egia erran, bai, uste baino lan gehiago eman dit glifoen antolaketak.

—Sinesten dizut, bai. Oroitzen naiz ni maien ikonografia ikertzen hasi nintzenean... irudi guztiek berdinak ziren, edo horrela iruditzen zitzaizkidan niri bederen. Ez dut pentsatu ere egin nahi zenbat gau eman nituen iratzarririk marrazkiak goiti marrazkiak beheiti. Behin eta berriz errepasatzen nituen, lorik egin gabe, erotzeraino kasik. Bat-batean, gauetik egunera, glifo guztiak ezberdintzeko gai nintzen, baita ezberdintasun ttipiena antzemateko

ere. Orduan konturatu nintzen zein zen nire arazoa. Ordura artio egungo mentalitate baten begiekin ari nintzen, eta benetan behar nuena maien mundu-ikuskeraz jabetzea zen, erabateko txip aldaketa, ez bertzerik. Zure begiez atzentzea da egin behar duzuna, eta bertze garai zein kultura bateko partaidea bazina bezala begiratu behar dituzu, urruneko hurbiltasunetik...

Adi-adi entzun zituen Romainek irakaslearen hitzak, deus erran gabe, solasaldia ez moztearren.

—Espainiarrek Palenque aurkitu zutenean XVIII. mendearen bukaeran –jarraitu zuen Omarrek–, eta hemengo piramideak, jauregiak, akueduktuak eta abar ikusirik, erromatarrak, greziarrak edo feniziarrak beraiek baino lehen egonak zirela ondorioztatu zuten, eta hori pentsatu zen kasik ehun urtez, baina aurreiritzirik gabeko buru batentzat astakeria galanta zen ideia hura. Erromatarrak hemen?, noiz?, nola?, nondik? Baina espainiarrek beren munduko begiekin ari ziren ikusten hau guztia, eta aurrean zutena baino buruak agintzen ziena ikusten zuten, ez bertzerik, mundua era itxi batean ulertuz.

Omar Guzman Romainekin ari zen solasean, baina, gaztearen presentzian erreparatu gabe kasik, bere buruarekin ari zela zirudien, begirada harmailetan josia, ikasle garaiak nostalgiaz gogoratuz. Pentsakor gelditu zen une batez. Gero, lastozko txapela esku batez astindurik, Romainen sorbaldaren gainean paratu zuen bertze eskua.

—Baina tira, agian hobe dugu itzalean atseden pixka bat hartzea zerbaiten edateko, edo burua errekako ur freskoan sartzea eguzki madarikatu honen azpian filosofatzen hasi baino, ez duzu uste?

Ur botilak hartu eta sekuoia erraldoi baten tolesdura bertikalen artean eseri ziren, itzalean. Irakasleak izerdiz blai zeukan erdi irekirik zeraman mauka motzeko atorra, eta besapeetako izerdi orbanak oihalean beheiti hedatzen zitzaizkion. Bularreko ile sendo eta beltza ageri zitzaion

askatutako botoien artetik. Ez zen batere atletikoa, eta tripa handi biribilak edozein mugimendurako traba egiten zion. Zer esanik ez sekuoiaren magalean esertzeko.

Romain, irakaslearen maniobren lekuko, ez zegoen batere eroso, eta arreta bertze zerbaitekin despistatzeko ahaleginak egin arren, begiak Omarren atorraren izerdi orbanetara joaten zitzaizkion etengabe. UNAMeko adituak usain txarra eta guzti zuela iruditu zitzaion.

—Hau misterioa! –bota zuen Romainek isiltasun ezerosoa hautsi nahian.

—Misterioa, zein?, beroarena edo ni ez deshidratatzearena?

—Ez, ez... Palenque abandonatzearena diot –erantzun zuen Romainek apur bat moztuta–. Zer demontre gertatuko zen hemen, hau guztia eraikitzeko lana hartu eta gero ageriko arrazoirik gabe abandonatzeko? –une batez isildu egin zen jarraitu baino lehen– Batek daki, beharbada ez dugu inoiz jakinen.

—Beharbada. Eta espainiarrek maien liburu sakratuak eta idazkiak erre izanak ez du gehiegi laguntzen, ez duzu uste? Nolanahi ere, nik nire teoria propioa daukat. Egiaztatzeko zaila, baina badaukat.

Hitzik egin gabe, begira gelditu zitzaion Romain, bere teoria propioaren azalpenaren zain.

—Izurrite handi baten ideia indartuz joan zait azken urteetan –jarraitu zuen irakasleak–. Baliteke. Zergatik ez? Dena dela, arazoa ez da teoria bat osatzea, teoria hori demostratzea baizik. Izurritearen inguruan zantzu bakan batzuk badaude lur geruza ezberdinetan, baina horixe dira, zantzuak soilik. Proba argi bat beharko nuke, zalantzarik gabekoa. Baina tira, agian arrazoi duzu eta ez dugu inoiz benetako arrazoia jakinen. Bizkitartean, badakizu, ikertzea baino ez zaigu gelditzen. Arkeologian gainera, erantzunak garrantzitsuak dira baina erantzun horien bila

egindako bidea garrantzitsuagoa izaten da batzuetan, eta gu horretan ari gara, bidea egiten.

Romainek, berriro ere, adi-adi jarraitu zituen Omarren hitzak. Kontraste handiko pertsona iruditu zitzaion, piura higuingarrikoa eta, aldi berean, ahots eztikoa. Hipnotizagarria. Zaila egin zitzaion izerdiz blai eta usain txarreko gizon hura unibertsitatean eskolak ematen irudikatzea. Egia erran, kutxazain automatiko batean kartoi azpian lotan aiseago imajinatzen zuen.

—Izurritea orduan, e? Hemen egon zen zibilizazio handiaren gainbehera eragiteko izurrite handia behar zuen izan, eta horrelako izurritea erregistratua geldituko zen kultiboen aztarnetan, ez? Baldintza klimatiko zehatz batzuk ere emanen ziren, ezta?

—Bai, baina ez pentsa. Zoritxarrez, uste baino errazagoa da hondamendia hedatzea. Begira, lehengoan, honen inguruko arrunt artikulu interesgarria irakurri nuen zientzia aldizkari komertzial batean. Afera da 1960. urtera artio emakumeen haurdunaldia baieztatzeko igelaren proba egiten zela. Emakumearen txiza txertatzen zioten igelari eta igelak obulatzen baldin bazuen, erran nahi zuen emakumea haurdun zegoela, bertzenaz ez. Bada, proba hau egiteko, ez zuen edozein igelek balio, eta Afrikako igel zehatz bat erabiltzen zen. Hortaz, arras kopuru handitan esportatu zuten Europara. Afrikako igelarekin batera, konturatu gabe, bertako igelei eraso egiten zien onddo arriskutsu bat garraiatu zuten. Akats txiki horren ondorioz, Europako hainbat igel mota desagertu egin zen eta bertze hainbertze desagertzekotan egon zen.

»Bistan denez, bertako ekosisteman aldaketa ñimiñoenak ondorio neurtezinak ekar ditzake, gerora demostratzen zailak izan daitezkeenak, edo batzuetan frogaezinak erranen nuke nik. Imajinatu Europako igel guzti-guztiak desagertu egiten direla zientzialari *buruargi* bati Afrikako igel bat eramatea bururatu zaiolako, eta berriki izan beha-

rrean, denboran urrunago gertatzen dela. Nola ikertu hori? Nondik hasi?

»Beraz, nork uka dezake hemen ez zela ekosisteman desoreka ttipi bat gertatu eta horren ondorioz alimaleko izurritea izan zela arto landak eta jateko guztia xehatuz herritarren emigrazio masiboa eragiteraino?

Romainek begiak ezinago irekiz jarraitzen zituen Omarren eleak, seko txundituta.

—Arazo bakarra ikusten diot teoria honi –jarraitu zuen Omarrek–, norbaitek teoria gezurtatzeko bertze norbaitek aurkeztu beharko lukeela lehenago, eta momentuz, niri dagokidanez bederen, ez dut froga nahikorik putzura salto egiteko. Beraz, badakizu, *quod gratis afirmatur gratis negatur*, probarik gabe erraten dena probarik gabe gezurtatzen dela alegia.

Liluratua zegoen Romain. Hirugarrenez. Gero eta atseginago egiten zitzaion irakaslea, eta, kalakaldiak aitzina egin ahala, hasieran hartua zion eskale itxura deseginez zihoan, azukre koxkorra uretan bezala. Begietatik sartu ez zena belarrietatik sartu zen.

—Ikaragarria litzateke bilatzen ari garen erantzuna glifo hauetan egotea –erran zuen Romainek lurretik hartutako harritxoa metro batzuk haratago botaz–, honela, behe-erliebeak interpretatzea baino ez genuke egin behar.

—Hala eta guztiz ere ez zen lan makala izanen. Demagun zonaldean dauden glifo guzti-guztiak aurkitzea erdiesten dugula, zailena geratuko litzateke oraindik, hau da, material hori guztia ongi sailkatzea eta interpretatzea. Egia erran, zenbait gauza aurkitzea da errazena batzuetan, kontrakoa eman arren, eta benetako lana gero etortzen da, bildutako guztiaren kudeaketan.

»Maien ikonografiaren kasuan errate baterako, hori gertatu zen. Apez espainiarrek maien liburuak erre zituztelarik glifoak interpretatzeko giltza erre zuten, hurrengo urteetako lana zailduz, edo hobeki erranik, mendeetakoa.

Ikerlari batzuk hinduen eragina ikusten zuten glifoetan, elefanteak eta guzti. Bertze batzuk aldiz, irudiak hitzak zirela zioten, baina osotara zortziehun glifo inguru ezagutzen dira, hitzak izateko guti, hizkiak izateko gehiegi.

»Azkenean, historian gertatzen diren karanbola horietako bati esker konpondu zen dena 1950. urtearen inguruan. Urte batzuk lehenago, Bigarren Mundu Gerran, SESBko Ejertzito Gorria Berlin nazien eskuetatik askatzen ari zela, Yuri Valentinovich soldadu sobietikoak eskuizkribu maia zenbait salbatu zituen Berlingo liburutegia birrintzen ari ziren garretatik, eta, jakin-minez jota, horien ikerketari ekin zion bere kabuz. Urteak eta urteak eman zituen eskuizkribuak aztertzen, eta azkenean, maien lurraldea sekula zapaldu ez arren, glifoak datak, izenak eta gertakariak deskribatzen zituzten hitzak eta silabak zirela ondorioztatu zuen. Horrela, irudien ordenak sekulako garrantzia hartzen du, konbinazio ezberdinek erranahi ezberdina ematen baitiote glifo bakoitzari.

»Hortaz ezabatu behar ditugu aurreiritzi guztiak, gure munduarekin zerikusirik ez duen zerbaiten aitzinean baikaude. Mendeetako akulturizazioari aurrea hartu eta glifo bakoitzaren barrura egin behar dugu salto, maien pentsamendua irakurriz, eta oihan hauetako orroa entzunez, behe-erliebeen testura sentitu.

Omarren azken hitzek zirrara eragin zioten Romaini, behatz lodiaren puntatik buruko hondar ileraino oinaztura kilikabera baten astinaldia sentituz. Irakasle izerdituaren hitzak buruan joka zituela, usu izaten zuen amesgaiztoaren irudia etorri zitzaion flash moduan. Duda-mudatan egon zen, eta, birritan pentsatuta, bere ametsetan ageri zen irudia, edo sinboloa, edo dena delakoari buruz galdetu zion azkenean irakasleari.

—Emakumea eta zaldia ez –erantzun zion Omarrek–, baina... Antzinako Europaren kulturan bada Sugeen Printzesa izeneko bat, aski ezaguna, Kretako Knosos-eko jauregikoa.

—Ah, bai, internetetik atera nuen horren argazkia, baina ez, ez da nik diodana. Alabaina –berriz ere Romainek–, erraidazu, Antzinako Europako kultura horretan ohikoak dira horrelako irudiak?

—Ez dakit. Nik bederen, zuk deskribatu didazunaren antzekorik ez dut ezagutzen, baina beno, egia erran, emakumezkoen errepresentazioak ez dira arraroak Antzinako Europan. Izan ere, emakumeak garrantzi handia zeukan antzinako kulturan –irakaslea isildu egin zen istant batez–. Nolanahi ere, hori bertze kontu bat da, ez duzu uste? Gainera, hobe dugu lanean hasi ez badugu zuen arduraduna haserretzea nahi… Hala ere, eta nahi izanez gero, bertzelako momentu batean jorra ditzakegu bertzelako gaiak, ados?

Birritan pentsatu gabe oraingoan, Romainek onartu egin zuen Omarren proposamena, eta hasieran piura nardagarria hartu arren, berarekin gehiago solastatzeko gogoz geratu zen. Arras pertsona interesgarria iruditu zitzaion. Kutxazain automatikoko irudia burutik ezabatuta, liburutegi zahar eta erraldoi batean irudikatu zuen Omar Guzman irakaslea, liburu zaharrez inguratuta.

***

San Cristobal de las Casaseko zokalon dagoen La Milpa izeneko kafetegian finkatua zuten hitzordura berandu eta presaka zihoan Romain. Errepidea zeharkatzean, jendez lepo zihoan furgoneta batek bozina jo zion.

—Ken hadi hortik, *güero*! –egin zion oihu gidariak.

*Urde pitoa* pentsatu zuen Romainek, *hobe huke balaztatzea bozinari eragitea baino*. Plaza barneko belardietan zeuden bota-garbitzaileen eskaintza ponpoxoei ezetz erran ondotik bertze aldeko errepidea zeharkatu eta hantxe ikusi zuen Omar Guzman, La Milpako terrazan garagardo bat eskutan.

—Arratsalde on –agurtu zuen gazteak–, eta barkatu atzerapena...

—Lau egun Mexikon eta hemengo *ahorita*-ra egina dagoeneko? –irakasleak umoretsu.

Ametsetan agertzen zitzaion irudia marrazten egona zen Romain. Begiak itxi, ongi gogoratzen saiatu eta, ahalik eta zehatzen, ahalik eta iruditsuen, paperean islatu. Horretan buru belarri kontzentratua, erlojuan erreparatu gabe, berandu egin zitzaion Omar Guzmanekin zeukan hitzordurako.

Irakasleak marrazkia ikusi zuenean pentsakor gelditu zen. Ez zeukan horrelakorik lehenago ikusia, baina ez zitzaion erabat ezezaguna egin. Solas egiteko indarra hartuz bezala, hurrupa luze bat eman zion garagardoari hasi baino lehen.

—Beharbada, loturaren bat izan dezake Antzinako Europako kulturarekin, nahiz eta horrelakorik, nik bederen, ez dudan ezagutzen. Zaldia alde batean utzirik baliteke egia erran –begiak marrazkitik altxatu gabe ari zen irakaslea, gogoetatsu–. Emakumea eta sugea maiz agertzen dira kultura horretan. Berez, Kreta eta Ziklada uharteetan garatutako kultura izan zen, Egeo eta Adriatiko itsasoen inguru haietan, Grezia klasikoa baino milaka urte batzuk lehenago. Arras pentsaera ezberdina zeukaten, erabateko aldrebeskeria erranen genuke egungo parametroekin alderatuta. Zuri kolorea errate baterako, hezurren kolorea, heriotzaren kolorea zen eta beltza, lur emankorraren kolorea, alaitasunarena. Gaurko ideien kontrakoa ikusten ahal duzunez. Gure jendartean kolore negatiboa da beltza, beldurgarria, heriotzarena azken finean, eta zuria aldiz, kolore ontzat daukagu, bakearen koloretzat adibidez.

»Jendarte matriarkala zen, ludikoa, eta naturari oso atxikia, ilargialdi eta urtaroetan oinarritua. Ilargi egutegia erabiltzen zuten. Emakumea ugalkortasunarekin identifikatzen zuten, sugea bezala, eta irakurketa horretan kokatzen da

hain zuzen Knososeko Sugeen Printzesa. Gure kulturan aldiz, sugea beldurgarria da, gaiztoa. Erlijio katolikoan adibidez, Adan eta Evaren pasartean, suge itxuraz irudikatzen da gaizkia, eta, emakumearekin batera, paradisutik kanporatuak izanaren ardura leporatzen zaio.

»Hor egon daiteke marrazki honen azalpenaren puska bat agian, ez dakit. Hori bai, animaliak eta pertsonak nahasteko joera ez dut uste Antzinako Europako kultura honetakoa izanen denik.

—Hori greziarren zentauroarekin etorri zen, ez?

—Bai, bai... greziarren zentauroa hor dago... baina beno, ez da bakarra. Hor dago iberiarrena ere, edota beranduago etorriko ziren iparraldeko mitologiek ekarri zituzten pertsonaia guztiak. Edozein modutan, badakizu, Historia ez da liburu itxia, eta, aurkikuntzak egin ahala, liburu horren kapituluak berridazten joaten dira.

»Dirudienez, antzinako kultura horretan hiri eta herri txikietan bizi ziren, bizi-kalitate handiarekin, eta aski da Kretako jauregiak ikustea hori baieztatzeko. Bertzetik, Jainkosa bat gurtzen zuten eta emakumeari aitortzen zitzaion sorgingoaren fenomenoan sinetsi. Herriaren baitan komunismo primitiboa zegoen ezarria, eta metalurgia ezagutu arren ez zuten armagintzarik landu, ezta gerrako jainkorik eduki ere. Kultura bakezalea zen erabat.

—Maien hasierako bertsio mitifikatua oroitarazten dit horrek guztiak, nekazariak, artistak, merkatariak eta astronomoak baino ez zirela erraten zuen bertsioa alegia.

—Bai, arrazoi duzu. Afera da maiak hori guztia eta gehiago ere bazirela, eta zerbait baldin baziren gerrazaleak ziren. Beren mitoetan ageri ziren jainkoen arteko borrokak lurreko jauntxoen artean errepikatzen zituzten, eta kasik erran daiteke beraiek asmatu zutela Izarren Gerra, izan ere, nekazaritzarako garrantzia zuten aroetan bakea errespetatzeaz gain, artizarraren igoerarekin batera gauzatzen zituzten borrokak gehienetan, zeruari eta jainkoei borroka-

ren emaitzaren alde baten ardura emanez. Egia erran, ez dakit zertan oinarritu ziren maiak bakezaleak zirela defenditzen zutenak, izan ere, borroka gehienen helburua aberastasuna eta zonaldea kontrolatzea zen, baita arerioa umiliatzea eta gatibu hartzea ere, berarekin sakrifizio bat egin eta karrikak eta plazak bere burua ziri batean sarturik atontzeko. Batek daki ez ote zen gerra izan hondamendia ekarri ziena ere, auskalo!

»Antzinako Europako kulturaren kasuan ordea, gaur gaurkoz, kontatu dizudan irakurketa ez da gezurtatu oraindik, beraz, bertze bertsiorik ezean, horretan sinetsi beharko dugu.

–Agian, irudi hau –Romainek marrazkia seinalatuz–, antzinako kultura horren garapenaren emaitza izan daiteke...

—Pentsatu bi aldiz erran duzun hori –moztu zion Omarrek–, k.a. 7000. urtean Anatoliatik etorritako kurgoen inbasioak k.a. 2500. urtean bukatu ziren, antzinako kultura honen azken gotorlekua erori zelarik, eta dakizun bezala, edo jakin beharko zenukeen bezala, Grezia klasikoa garatu zen orduan. Antzinako Europa erabat desagertu egin zen indoeuropar inbasioekin, garatzeko aukerarik ttipiena ere izan gabe. Historiako lehen genozidio kulturala gertatu zen orduan, eta ondotik etorri zena... tira, denok ezagutzen dugu hori, ezta?

—Kultura oso bat ezin da begi itxi-ireki batean desagertu, lekuren batean aurkituko zuten babesik, ez? Zer dakit nik, mendi zoko batean edo...

—Zoritxarrez ez, ez zuten babestoki hori aurkitu eta klasketako batean desagertu zen kultura hori. Uste baino errazagoa da kultura oso baten desagerpena gertatzea, begira bertzenaz Ipar Amerikako jatorrizko herriekin gertatu zena. Gaixotasun eta gerren ondorioz, bi miloi izatetik berrogeita hamar mila baino ez izatera igaro ziren ehun urte pasatxoan. Edo azteken kasua, ia hamazazpi miloi hil

egin zirela XVII. mendean espainiarrek beren itsasontzietan ekarritako arratoien birusen ondorioz. Antzinako Europan ere bertze lurralde bateko inbasioaz ari gara, eta berrikuntza zenbait ekartzeaz gain, erabateko iraultza kulturala eragin zuten, bakezalea zen zibilizazio batean bertzelako ohiturak eta egitura soziala zein materiala gerraren bidez inposatuz.

Omar Guzman pentsakor gelditu zen une batez, begirada marrazkian iltzaturik.

—Non aurkitu duzu irudia, bada?

—Hau? –Romainek zalantza egin zuen istant batez– Inon ez egia erran –Omarrek, Romainen arrapostua entzutean, bekainak goratu zituen harriduraz –. Azken boladan maiz izaten dudan amets batean agertzen den irudia da, loa galarazten didan amesgaiztoa, eta erdi erreala dena erranen nuke nik. Obsesio txikia bihurtu zait eta begiak itxi orduko hortxe agertzen zait, buruan bueltaka. Erotzeko modukoa da...

—*No mames güey!* –Omarrek irri txiki batez– Beraz, zuk behar duzuna ez da Historia irakasle bat, zuk Sigmund Freud behar duzu, hau pitokeria!

*Barrika txarretik arno on guti*

## Apostolua

Urduri zegoenean eskuak izerditzen zitzaizkion beti Haydée Mendoza kazetariari, egun horretan bezala. La Jornadaren erredakziora Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua sekta sekretuaren gutuna ailegatu zelarik, zalantza anitz izan zituen, baina egunkariko zuzendariarekin luze eztabaidatu ondotik, gutunean ageri zen hitzordura joatea deliberatu zuten. Edo zuen.

Ordua baino hamar bat minutu lehenago ailegatu zen Mexiko DFko zokalora eta katedralera sartu beharrean, plaza erdiko bandera erraldoiaren mastak sortzen zuen itzalean itxaron zuen. Ordua zenean katedralerantz abiatu zen, inguruak gainetik behatuz begi mugimendu azkarrez. Katedralaren ondoan dauden azteken tenpluen aztarnek irri ironiko bat ebatsi zioten. Hiria nahiko lur aldakorretan dago eraikia (aztekek laku baten gainean goititu zuten Tenochtitlán, eta egungo Mexiko DF Tenochtitlánen gainean dago eraikia), eta lur horien mugimenduen ondorioz, hiriburuko katedrala beheiti ari da etortzen, eta aldi berean, azteken tenplu birrinduen aztarnak goiti ari dira ateratzen, mundura azaleratzen. *Paradoxikoa* pentsatu zuen Haydéek, *edo botere indigenaren itzuleraren seinale* bukatu zuen bere burutazioa irri labur batez.

Katedraleko burdinazko hesia igaro zuelarik aztekez atzendu, eta, kristauen tenpluan sartu baino lehen, poltsoan sartu zuen eskua mugimendu instintibo batez. Pistola ukitzean lasaitu egin zen apur bat. Apenas zekien tiro egiten, baina hala eta guztiz ere, lasaiago gelditu zen armaren pisua eskuan nabaritzean.

Gutunean agindu bezala, ezker hegaleko bortzgarren aitorlekuan sartu zen. Gizonezko ahots batek berehala ekin zion hitz egiteari.

—Pozten naiz gure gonbidapena onartu izanaz Mendoza andereñoa.

—Ez nuela deus galtzeko iruditu zitzaidan, jauna…

—Apostolua, dei iezadazu Apostolua.

—Bon, ederki Apostolu jauna, erranen duzu zer nahi duzuen niregandik? –erran zuen kazetariak mesfidati eta axolagabe antzera.

—Zure periodikoan argitaratu dituzun artikuluetan ageri denez, Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua erakundeak zenbait ekintza egin ditu hondar

boladan, Jaunaren hitzaren justizia ezarri bidean –Haydéek, ez irudian, paretak baino adiago segitzen zuen solasaldia, bere kaier txikian oharrak hartuz–. Ikusi denaren arabera, agintariek zein instituzioek estali egin nahi dute gure justizia bidea, eta ekintza gehienak isilarazi edo desitxuratu egin dituzte, bandalismoarekin lotuz. Orain artio publikatu den ia guztiak zure sinadura darama, hortaz, eta guk bertze tonu batean idatziko genukeen arren, Paterrekin elkarrizketa bat egiteko aukera eskaini nahi genizun.

—Eta nor da Pater delako hori? –moztu zion Haydéek.

Irri gaizto bat entzun zen aitorlekuaren bertze aldetik.

—Pater Pater da, ni Apostolua naizen bezala, bere dizipulua alegia. Edo galdetu nahi duzuna da ea zer ardura duen Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua erakundean, bada, erakundearen burua dela erranen dizut.

Mutu gelditu ziren biak une batez.

—Erran dizudan bezala –hartu zuen hitza Haydéek–, etorri baino lehen uste nuen ez nuela deus galtzeko, baina orain ez dudala deus irabazteko iruditzen zait. Pater delako horrekin elkarrizketa egiten badugu, ezdakit-noren hitzetan oinarritutako balizko justiziaren izenean pertsonak hiltzen eta hilobiak profanatzen dituzten ultrakatoliko batzuen taldexkari propaganda ematea izanen da lortuko dugun gauza bakarra, eta oraintxe bertatik erran diezazuket hori ez dagoela gure egunkariko asmoen artean.

—Ikusten dudanez –Apostolua zorrotz zuzendu zitzaion Haydéeri–, arras ongi idazten badakizu baina fakultatean berri baten balio informatiboa azaldu zuten egunean piper egin zenuen Mendoza andereñoa.

—Beharbada –Haydéek temati–. Nahi izanez gero akordio batera hel gaitezke.

—Erran.

—Paterrekin elkarrizketa egitearen truke, eta zuen balizko asmoen inguruko galderak egiteaz gain, zuen erakundearen inguruko informazioa, datuak eta abar ematea. Den-dena publikatzeko baimenarekin doike.

—Ez zait akordio justua iruditzen Mendoza andereñoa.

—Ez dakit zertaz, baina, zuen ekinbidea pixka bat ezagututa, zer den justua eta zer ez irizterakoan ez dugula bat eginen iruditzen zait.

—Ironia maite du gure andereñoak beraz –Apostoluak ere ironiaz.

—Mmm…

—Hemen inportanteena egiten ari garen justiziazko bidea da, nola salbatu behar dugun mundu gaixo hau heresiatik, nola bueltatu dena bere ordenara. Bertzelako informaziorik poliziari soilik interesatzen ahal zaio, eta hori ez da gakoa. Gakoa da dena bere bidera itzultzea, nahiz eta horretarako gauaren argiaren bidea gorriz tindatu beharko den azkenekoz ziklo heretikoa betiko itxi dadin.

—Beraz, eskaintzen duzuen aukera bakarra da Pater horrekin elkarrizketa egitea zuen propaganda zabaldu ahal izateko.

—…

—Aizu, Apostolua, horixe da aukera bakarra, beraz?

—…

—Bai? Apostolua, entzun didazu?

Apostoluak ez zuen arraposturik eman. Kopeta zimurturik, tentuz, bere lekutik altxatu eta aitorlekuaren bertze aldean begiratu zuen Haydéek. Apostoluaren seinalerik ez.

*Ez du horrek mihi peko zainean herdoilik*

## Euskal Mesopotamia

Goizeko sei eta erdiak baino lehen jo zuen telefonoak bi gazte arkeologoen apartamentuan. Ohatzetik salto batez jaikiz erantzun zuen Kilianek. Jarraian, Romainen logelan sartu eta astinaldi batez iratzarri zuen.

—Romain, telefonoa, hiretako duk.

Loa galarazten zion amesgaiztoa zela eta lo guti egiten zuen Romainek, baina lokartzen zelarik, eta denbora gutiko loaldiak izanagatik, sakon-sakon egiten zuen. Begiak ezin irekiz, haztamuka egin zuen telefonorako bidea.

—*Allô?*

—Egun on Romain, Omar naiz. Barkatu ordu hauetan deitzea baina aurkikuntza txiki bat egin dut kasualitatez eta zure interesekoa izanen delakoan nago.

—Omar, ze Omar? –galdegin zuen Romainek esku batez telefonoa kontzen eta bertzearekin burua igurzten zuela.

—Omar Guzman, UNAMeko irakaslea.

—Ah bai, barkatu, jokoz kanpo harrapatu nauzu erabat.

—Erran bezala, interesatuko zaituen zerbait aurkitu dut, DFra etorri behar duzu.

—DFra? Ezin dut, lana daukat larunbatera artio.

—Atzendu lana Romain, indusketen arduradunari deitu diodanean zure telefonoa eskatzeko zure laguntza behar nuela erran diot eta, oztoporik paratu gabe, egun batzuetarako baimena eman dizu. Arin ibiltzen bazara eta DFrako goizeko autobusa hartzen baduzu, hemen izanen zara ilunabarrerako…

—Zerk du horrelako presarik, bada?

—Egia erran, ez dakit zehatz-mehatz aurkitu dudanaren garrantzia zenbaterainokoa den, baina erran diezazuket zure ametsetako printzesa-zaldiarekin zerikusirik izan dezakeela.

Hau entzutean Romainek ez zuen gehiago eztabaidatu. Arropa zenbait motxila txiki batean bildu, bidaiarako fruta eta gaileta batzuk hartu eta berriz lotara joana zen Kiliani *DFra partitu nauk* eta guti gehiago zioen ohartxoa sukaldeko mahai gainean utziz, autobus geltokira abiatu zen.

Bertze aukerarik ezean *categoria ejecutivo*-ko *boletoa* hartu zuen. Bidaiariak begi-klasketako batean begiztatuz ez zitzaion exekutibo anitzik ikustea iruditu hala ere.

***

Autobusak egindako jauzi batek iratzarri egin zuen Romain bere eserleku uzkurtuan. Ohatzean, eta gauez, nekez egiten zuen lo baina gero, egunez, lo seko geratzen zen nonahi. Leihotik begiratu zuelarik ketan eman zion ongi etorria Popocatépetl sumendiak, eta Mexikora ailegatu berria kontrako norabideko bidaian egokitu zitzaion bidaide batek kontatutako istorioa etorri zitzaion gogora. Antza, gerlari gazte eta indartsua zen Popocatépetl, egun batean gerrara joan zena maitalea utziz. Gerratik itzuli zelarik ordea, lurrean hilik aurkitu zuen maite zuen emakumea. Orduan, lastargi bat piztu eta gorpuaren ondoan eseri zen, bere maitalearen heriotzaz negar egitera. Gau osoa eman zuen gorpua gaubeilatzen eta bere buruari promes egin zion ez zela inoiz gehiago bere aldamenetik urrunduko. Gauzak horrela, egunak argitu zuelarik biak ala biak petrifikatu egin ziren, lurrean zetzan maitalearen gorpuaren ondoan Popocatépetl gerlaria lastargia eskutan, betiko eserita. Horra hor Romainek autobuseko leihotik ketan ikusten zituen sumendia eta ondoko mendilerroa.

***

Romain Mexiko DFko autobus geltokira ailegatu zelarik zain zeukan Omar Guzman irakaslea. Honek motxila hartu

zion Romainen aurpegiak adierazten zuen nekea arindu nahian-edo, eta taxi baten hartzera abiatu ziren.

—Ez, wolswagen eskarabajoetan ez –erran zion Romainek Omarri irakasleak horrelako taxi batean sartzera zihoala–. Horiek arriskutsuak izan daitezke –justifikatu zuen gazteak bere burua irakaslearen harridura aurpegia ikusirik–. Hotel bateko harrera-tokian taxi horiek ilegalak izan daitezkeela irakurri nuen behin, eta nahi duten lekura eraman ondotik, taxilariarekin txarkerian dabiltzan lapurrek den-dena garbitzen dizutela. Taxi ofizial handiak hartu behar omen dira.

Harridura keinua ez zen Omarren aurpegitik joaten. Eskuin-ezker begiratu zuen *taxi ofizial handi* baten bila, baina horien arrastorik ez. Eskarabajoak aldiz, harrien azpitik ateratzen ziren, hamarnaka, ehunka beharbada.

—Ez kezkatu –erran zion Omarrek taxi eskarabajo bat hartzen zuela azkenean–, horiek turista inozoak izutzeko legenda urbanoak baino ez dira. Hara, goazen.

Romainen motxila gibeleko eserlekuetan sartu eta gero kopilotuaren tokian sartu zen Omar. Ez sobera konbentziturik, bere motxilaren ondoan eseri zen Romain, sudurra zimurtuz.

—Kasualitateetan kasualitatea –hasi zen Omar behin taxiak hiri barneko ibilaldiari ekin zionean–. Atzo, gaueko ordu txikitan, odol zurrupatzaile baten hezurrak aurkitu zituzten Veneziako indusketa bateko paperak gainbegiratzen niharduen…

—Odol zurrupatzailea? –Romainek zur eta lur– Banpiroa erran nahi al duzu?

—Horixe bera, bai. Badakit arraro xamar egiten ahal dela, baina hola da. Afera da XVI. mendean Europan pestea hedatu zelarik, horrela uste zutela, gaixoei odola zerielako ahotik hil eta gero ere. Hortaz, izurritearen hedapenaren errua banpiroena zela uste zuten, banpiroek hilarena egiten zutela gainerako hilekin hilobira zitzaten,

lur azpian hildako guztien odola zurgatzen jarraitu ahal izateko. Horrela, erabat indarberriturik, bizidunen mundura itzultzen omen ziren berriro, pestea hedatzen jarraitzeko, odol gehiago edukitzeko xedez. Uste oker hori zela eta, hildako bat banpiroa izan zitekeela uste zutenean, harri edo adreilu bat sartzen zioten ahoan, bertze hildakoei odol gehiagorik ez zurgatzeko lur azpian.

»Bada, erraten nuena, Venezian horrelako kasu bat agertu da berriki, emakumezko baten eskeletoa ahoan adreilu bat sartuta duela hain zuzen. Honen harira, artikulu bat idaztea eskatu zidaten unibertsitateko aldizkarirako eta dokumentazio lanetan liburutegi nazionalean ari nintzela, egunkari, aldizkari eta zenbait dokumentuen artean, hara zer agertu zitzaidan.

Jakaren ezkerreko sakelatik atera zuen fotokopia tolestua eskaini zion Romaini.

—*Putain de ça race!* –erran zuen Romainek papera ikustean. Bere amesgaiztoetan ageri zen sinboloaren moldea izan zitekeena argi eta garbi ikusten zen dokumentuaren argazkian, bertzelako tresna, bitxikeri eta hezurren artean– Alajaina! –egin zuen oihu emozioz dardarka– Beraz, moldea existitzen baldin bada, sinboloa ere bai, ezta? Non daude indusketa hauek?

—Bardeak izeneko basamortu batean, Nafarroako hegoaldean.

—Nafarroa, Euskal Herria? –galdegin zuen Romainek hitz-totelka kasik, bere Normandia kuttunetik ehunka kilometro bakan batzuetara baino ez zela pentsatuz.

Taxia Mexiko DFko karriketatik zihoan ziztu bizian, inork fite joateko eman gabeko agindua betez. Nabari ez bazitzaion ere, irakaslea kaka eginda zihoan kotxeen norgehiagoka horretan.

—Kotxe beltz ilun hori, bazterrera baztertu! –galtzen zuen ahotsa errepideko polizia batek zirkulazio eroaren erdian.

Mexikarrek berezkoa daukate errebeldia beharbada, eta hortik poliziaren agindu errepikakor horiek agian: *kotxe beltz ilun hori, bazterrera baztertu*, edota militarren kontroleko «alto total». Batekin ez aski nonbait.

Kanpoko eromenari kasurik egin gabe, eta melodia ezberdinen bozinei entzungor, Romainek ez zuen esku artean zeukan fotokopiatik begirada goititzen.

Eskatu bezala, «Foro Alizia» izeneko aretoaren aitzinean gelditu zen taxia. Espaloian metatzen zen jende artetik bidea ireki eta eskailera estu batzuetatik igaroz, goitiko areto iluneraino joan ziren Omar eta Romain. Boliviako komunitate bateko «el Ceibo» kooperatiba indigenari buruzko dokumentala ari ziren aurkezten Tereza eta Lukas gazte txekiarrak, pantaila erraldoi baten laguntzaz. Txekiarren ondoan, agertokian ere, solasaldiaren antolatzailea zegoen, aurkezle lanetan. Artean, Romainek alde guztietara begiratzen zuen, bertan egotearen azalpena noizbait etorriko zelakoan.

—Begira –erran zuen Omarrek azkenean agertokira seinalatuz–, mahaian solasean dagoen emakumea Haydée Mendoza da, aspaldiko laguna, eta nik uste lagungarria izanen zaizula.

Haydée Mendoza Guatemalakoa zen sortzez, baina bederatzi urte zituela, Mexikora etorri zen bere amarekin, Jacobo Arbenzen garaian CIAk gidatutako kolpe militarretik ihesi. Bere amak alderdi komunistako gazte brigadetan laguntzen zuen, propaganda banatzen eta gisa horretako lanetan, eta Hondurasetik mertzenarioen erasoa etorri zelarik, Mexikoko enbaxadan babestu ziren. Handik gutira, Mexiko DFra bidaiatu zuten. Beraz, Mexikon hezi zen. Kazetaritzan lizentziatua, La Jornada periodiko mexikarrean lan egiteaz gain hainbat mugimendu sozial eta politikorekin kolaboratzen zuen eta desagertutako kultura baten kate-begi galdua aurkituko zuelakoan, bai Kurdistan bai euskal-akitaniar gunea ere sakonki aztertuak zituen ikasle garaian.

Boliviako dokumentalaren proiekzioa akitu zelarik, Omarrek Haydée Mendoza aurkeztu zion Romaini, eta, bat-bateko bisitaren nondik norakoak gainetik azaldurik, hurrengo egunerako finkatu zuten hitzordua.

***

—Bai, igo.

Eskailera maldatsuak igotzean aurreko eguneko bidaia zein bertze gau txar bateko nekea nabaritu zituen Romainek. Zakur zanpatua nola, halatsu egin zuen espaloietatik goiti.

—Beraz –ekin zion Haydéek gaztea atetik sartzen ikusi bezain fite–, Omarrek erran didanaren arabera euskal-akitaniar guneari buruz solastatu nahi duzu, ezta?

—Bon –erantzun zion Romainek nondik hasi ere ez zekiela–, figura ttiki baten gibeletik nabil eta baliteke gune horrekin lotura izatea.

—Ongi da, bai, zer edo zer azaldu zidan Omarrek.

Bere akidura aurpegia ikusirik, aulki bat eskaini zion Haydéek Romaini.

—Bon –segitu zuen kazetariak–, deus baino lehen, kafe bat behar dut nik. Zuk, nahi al duzu zerbait? Kaferik? Terik? Txokolaterik?

—Bai otoi, kafe bat.

Normalean ez zuen kaferik hartzen baina ahalkea eman zion bertze zerbait eskatzea.

Romainek egongelako paretetako argazkiak begiratu zituen Haydéek pisuko sukaldean bi kafeak prestatzen zituen bizkitartean. Argazkietako batean Omar Guzman irakaslea ezagutzea iruditu zitzaion, hogei bat urte gazteago beharbada, eta hogeita hamar kilo argalago dudarik gabe. Jakin gabe zertaz (argazkia lagun talde oso batena zen eta irakaslea eta kazetaria ez ziren ezta elka-

rren ondoan ere agertzen), harreman sentimental hasieran-akasgabea-gero-malkartsuan irudikatu zituen Omar eta Haydée, eta denborak bakoitza bere tokian paratu arren, lagunen arteko harreman apurtezina mantentzen. Edozein modutan, Omarren bilakaera fisikoa ikusirik, Haydée nahikoa ongi kontserbatzen zela iritzi zion Romainek.

—Hementxe –erran zuen Haydéek bi kafe eta pasta batzuekin egongelan sartuz.

Mahaitxo baten gainean pausatu zuen dena eta horren ingurura bildu ziren biak.

—Bon Romain, onartu behar dizut gai honek hunkitzen nauela. Urte batzuk pasatu nituen horretan, obsesionatuta kasik… –Haydéek hasperen egin zuen malenkoniatsu– Badakizu, gazteriaren energia, edozein borroka galduren bandera hartzeko grina...

Romainek buruko mugimendu mutu batez eman zion baietza.

—Nik euskal mesopotamia deitzen diot gune horri, izan ere, Mesopotamia Eufrates eta Tigris erreken arteko lurraldea zen eta arte batzuen sorburua izan zen, idazkerarena errate baterako, ez? Bada, euskal-akitaniar gune hau ere bi erreken arteko lurraldea da. Hegoaldean Ebro erreka dago eta iparraldean Garona izenekoa. Paleolitoko labar-artearen datazioaren arabera gainera, euskal-akitaniar gune honetan kokatuko litzateke datarik zaharrenak, eta erdigune horretatik urrundu ahala, gero eta denboran gertuago daude datok. Hortaz, erran daiteke ia okertzeko beldurrik gabe, labar-artea inguru honetan sortu zela. Hortik euskal mesopotamia deitzearena.

Azalpenarekin batera hamaika mapa, orri eta irudi atera zituen Haydéek karpeta zahar batetik.

—Menturaz, eremu hau gizakiaren babeslekua izan zen Europan Würm izenez eta Amerikan Wisconsin izenez deitzen den azken glaziazioan, eta izotza urtzen hasi zelarik gizakiak bertze eremuetara zabalduz joan ziren.

—Zer ari gara solasean, hamabortz mila urte Kristo aurretik?

—Pixka bat gehiago, hogeita hamar mila urte-edo Era Vulgaris aurretik. Horrela deitzea gustatzen zait niri –argitu zuen Haydéek Romainen harridura aurpegia ikusirik–, *Kristo aurretik* terminoa sobera ikuspuntu kristau eta mendebaldarra da, eta ez dut batere maite. Era Vulgaris berriz, apezpiku ingeles batek erabili zuen gure aroa definitzeko, Herri edo Aro Komuna erran nahian, latinezko «vulgus», «herri» edo «komunitate»tik. Beraz, aro kristaua aro zakarra bada, izan dadila Era Vulgaris.

Romain pizar bat moztuta gelditu zen Haydéeren azken azalpen honekin. Eskuetan zituen paperen artean ezkutatu zuen begirada.

—Gainera, ze Kristo eta ze demonio, noiz jaio zen Jesus delako hori, noizbait jaio bazen? Kristauek beraiek ere ez dakite eta. Kontutan hartzen baditugu garaiko astronomoek idatzi zituzten kronikak, baliteke errege mago delako horiek segitu zuten izarraren agerpena Era Vulgaris baino lau urte lehenago gertatu izana, beraz, eta paradoxikoa baldin bada ere, baliteke Jesukristo Kristo baino lau urte lehenago jaio izana. Ah ze kristo, e? –Haydéek umoretsu– Horrek gainera, Herodesek lau urte bitarteko haur guztiak hiltzeko eman zuen agindua azalduko luke ere.

Romainen begiek paperen artean bilatu zuten babesa berriro ere, eskolan irakaslearen galdera ekidin nahi dutenen gisan.

—Beno, barkatu Romain, harira, harira.... Non geunden? Ah bai, euskal-akitaniar gunean. Txikitua bada ere, gaur egungo Euskal Herria litzateke gune honen ondorengoa, eta ezaugarririk esanguratsuena euskal hizkuntza litzateke, euskara.

Supituki, San Cristobal de las Casasen ezagututako neska etorri zitzaion gogora Romaini.

—Nahiz eta demostratzen zaila den –zenbait hitzez osatutako koadroa hartu zuen Haydéek–, Paleolitoarekin lotura izan dezaketen hainbat hitz aurki daitezke hizkuntza honen baitan, silaba bakarrekoak, onomatopeikoak: *su, ur, lur, hotz, jan* edo *zur* bertzeak bertze.

Klima epeldu zelarik beraz, bai Europa aldera iparraldetik bai Iberiar penintsulan zehar Afrika aldera hegoaldetik, gune honetatik atera eta hedatu egin ziren jende hauek. Hizkuntzari dagokionez, lotura argiak aurki daitezke euskara eta Kaukaso zein amazigen hizkuntzen artean, eta bertze batzuk diotenaren arabera, sumeriera eta egiptoerarekin ere zenbait lotura aurki daitezke.

—Barkatu Haydée, nik uste gehiena hartu dudala baina, zeintzuk dira amazigak?

—Amazigak Sahara inguruko herriak dira, amazigera edo tamazight solastatzen direnak. Berbereak. Kontua da erromatarrek kontrolatu ezin zituztenez, barbarotzat hartu zituztela eta hortaz, latinezko *barbarus* hitzetik etorria, berbereak bezala dira ezagunagoak. Jende gehienak, baita haietako batzuk ere, berbereak deitzen die, baina nik amazigak deitzea nahiago dut. Gainera, hitz horren erranahia arras polita da, singularrean amazigh erraten da, eta gizaki askea erran nahi du. Hau usu gertatzen da, ezta? Herri batentzat gizaki askea dena barbaroa baino ez da inperioarentzat.

Haydéeren inkonformismoak gainezka egiten zuen alde guztietatik. Romainek pertsona zinez errebelde baten aitzinean zegoela antzeman zuen, amaren odol iraultzaile bera zuena Omarren arabera. *Halako upela, halako arnoa* pentsatu zuen Romainek. Solasaldiari zegokionez interesgarria iruditzen zitzaion baina ez zuen batere loturarik ikusten bilatzen zuen irudi zehatzarekin. Gaia mugatzen ahalegindu zen.

—Antzinako euskaldun edo jende hauek emakumea gurtzen zuten?

—Zaila da jakiten. Edozein modutan, gurtu gurtu ez dakit baina emakumeak garrantzi handia zeukan beren kulturan. Jainkoen artean adibidez, Mari izeneko jainkosa gurtzen zuten, zeinak ilargiarekin zerikusia zeukan. Antzinako Europako kulturako Demeterren parekoa litzateke, Conos eta Rhéaren alaba, eta dirudienez, beharbada hori Omarrek azalduko dizu nik baino hobe, maien aurreko Olmeka kulturan ere honen baliokidea zeukaten.

—Erran iezadazu Haydée, uste al duzu Antzinako Europa eta euskal-akitaniar gunea lotuta egon daitezkeela?

—Bada –kazetariak zalantza egin zuen arrapostua eman baino lehen–, ni ez naiz historian aditua baina ikertu dudanaren arabera baietz erratera ausartuko nintzateke. Beharbada antzeko kultura zeukaten Europako hainbat tokitan ekialdeko inbasioak gertatu baino lehen. Hasierako inbasioen enbatei Kreta eta Kikladak bezalako tokiek eutsi egin zuten, uharteak zirelako, eta euskaldunen kasuan, akaso mendiak izan ziren behar zuten babesa. Zoritxarrez, Kreta eta zonalde horretako hizkuntza galdu egin zen eta ezinezkoa da euskararekin alderatzea baina eskua sutan paratuko nuke hizkuntza hauek ez zirela hain ezberdinak. Kulturaren bertze arlo batzuetan ere antzekotasun gehiago aurki daitezke, errate baterako, matriarkatua izateaz gain eta jainkosa nagusi bat gurtzeaz gain, gauza guztiek lotura zuzena zeukaten naturarekin, eta horrekin batera, jaia, janaria, edaria, dantza edo sexualitatea.

»Bertze aldetik, zezena sakratua zen eta zenbait jokoetan erabiltzen zuten arren, ez zuten behin ere hiltzen. Hau ere bertze lotura bat izan daiteke Antzinako Europako Knososko jauregian dauden freskoekin, gaur egunera artio zezenketa basko-landesen bitartez ailegatu dena, zeinetan zezenarekin jolastu bai, baina inoiz hiltzen ez den. Zezena hiltzearena inbasioen ondorioz ezarri zen kultura berriaren jainko eta heroi patriarkalekin batera etorri zen ohitura izan zen seguruenik.

—Eta zaldia, sakratua al zen?

—Sakratua ez, baina presentzia handia dauka. Euskal Herriko labar-artean adibidez, zaldia da gehien agertzen den animalia.

Buelta gehiago eman gabe, amesgaiztoaren irudiaren marrazkia atera eta Haydéeri erakutsi zion.

—Honen antzekorik ezagutzen al duzu kultura honetan?

Haydéek marrazkia behatu zuen tarte batez.

—Irudi hau ez... eta antzekorik ere ez nik uste.

—Ez zutela animaliak eta pertsonak edo jainkoak nahasteko ohiturarik erran nahi duzu?

—Bai –Haydéek pentsakor–. Egon badaude kasu batzuk non txamana animalia larruz mozorroturik ageri den, Trois Frères-eko koban adibidez, txamana orein larruz ageri dena, baina hemen bezala, gizakia eta animalia uztarturik, ez egia erran. Nik lotura gehiago hartzen diot Europako iparraldeko bikingoekin, edo zeltekin beharbada. Herri horiek horrelako gauza gehiago dituzte mitologian.

—Bai, baina begira hau –Omarrek taxian emandako dokumentuaren fotokopia eman zion Romainek Haydéeri.

—Bai, prefosta, marrazki horren moldea izan daiteke. Nolanahi ere, gu Paleolitoaz ari ginen eta hau Brontze Arokoa da bederen. Izan ere, metalurgia aspaldi ezagutzen zuten baina megalitoen kultura Era Vulgaris baino bortz mila urte lehenago artio ez zen zonalde honetan garatu.

Argi zegoen. Haydéerekin solastatzea plazer handia izan zen, pertsona zinez interesgarria eta jakintsua, baina sobera urrun joanak ziren eta Romainek bilatzen zituen erantzunak denboran hurbilago zeuden, historiaurrea eta historiaren artean nonbait.

*Balu eta balitz elgarren ondotik dabiltz*

## Liburuaren erretzea

Mexiko DFtik San Cristobal de las Casasera itzultzeko, gaueko autobuserako txartela hartu zuen Romainek. Ezin bazuen gauean lorik egin, bidaiatzeko profitatuko zuen behinik behin. Beraz, egun osoa zeukan DFn alderrai ibiltzeko.

Hastapenean gogotsu ekin zion hiriko karrikak kurritzeari, hiriak berezkoak dituen asotsak eta usainak barneratu nahiz. Hogeita hiru edo lau miloi jendeen joan-etorriak, algara, zirkulazioa... hori eromena, hori inurritegia. Hiriak bizi propioa zeukala iruditu zitzaion, gizakiaren asmoen gainetik, eta hiriaren bihotza punpaka ari zela erritmo zoro eta kaotikoan. Egunak aitzina egin ahala, oihan zeharkaezina bihurtu zitzaion Mexiko DF. Lakandona oihanarekin hartu zion antza hondarrean, dena ezberdina berdin izateko, edonor galtzeko modukoa, edo hiria den piztia salbai horrek bere bidea segitzeko irentsia.

Pausu luzeka hasi zen oharkabean, semaforo zein seinale inozoena landare pozoitsu eta haragijale bilakaturik, oihaneko basapiztiengandik ihes egin nahiko balu bezala. Museo antropologikoa bere burua salbatzeko tenplu sakratua iruditu arren, ez zen haraino ailegatu eta liburutegi nazionalean sartu zen jaguar saldo bat orpoz orpo zuela.

Itzulixka bat egin zuen liburuz betetako apalategien artetik, bere burua lasaitu nahian. Gero, ordenagailu baten aitzinean eseri zen. Euskaldunen paleolitoko hizkuntza exotiko horren inguruan zer edo zer bilatzen ahal zuela pentsatu zuen: berezitasunak, bertze hizkuntzekiko loturak, hiztegia... edozein gauza, edozein hari tira egin ahal izateko.

Lehenengo emaitzen artean toponimiari buruzko lantxo bat aurkitu zuen interneten. Egungo Euskal

Herrian biltzen ziren euskarazko toki izen gehienak, *logikoa* pentsatu zuen. Hortik abiatuta, Alemaniatik haratago iparraldetik eta Afrikako iparralderaino hegoaldetik euskarazko izenak edo euskarazko oinarria zuten toki izenak ageri ziren. Klimaren epeltzearekin batera euskal-akitaniar guneko jendeek iparralderantz zein hegoalderantz egindako balizko migrazioekin Haydéek emandako orriak atera eta, begiratu azkar batean, toponimiarekin bat egin zitzaketela iruditu zitzaion. Labar-artearen datazioak begiratuta argiago ikusi zuen Haydée Mendozak azaldutako ideia.

Klima epeltzean izandako migrazioen argudioa, labar--artearen datazioak zein toponimoen euskarazko izenen dentsitatea batera zetozen. Ideia bat etorri zitzaion Romaini: euskara historiaurreko latina izan zitekeela. Egungo hizkuntza ezberdin batzuk latinetik datozen moduan historiaurreko hizkuntzak euskal-akitaniarreko migrazioetatik etor zitezkeen. Euskara beraz, edo Paleolitoko hizkuntza horietatik zetorren, edo, zuzenean, garai hartako hizkuntza bera zen. *Zer sentituko duk Paleolitoko ehiztarien hizkuntza solastatzean?* galdetu zuen bere baitan. Ideia honek liluratu egin zuen eta Ilargiz akordatu zen. Antzinako altxorra izan zitekeen hizkuntza solastatzeak are erakargarriago eta misteriotsuago bihurtzen zuen oraindik egun batzuk lehenago San Cristobalen ezagututako neska. Burutik pasatu zitzaion ideia geroko utzi eta sarean miatzen jarraitu zuen.

Hizkuntzen artean bi familia handi omen daude, familia denekaukasikoa, zeinean Txetxeniako eta Ingusetiako kaukasiarrera, Karakorum ondoko burushoa edo navajo--apatxea dauden bertzeak bertze, eta familia usko-mediterraneoa, zeinean elenita, hurrita, sumeriera, hititera, egiptoera, etruriera eta berberea egoteaz gain, euskara ere dagoen. Azkeneko familia honetako hizkuntzek mintzaira erlijioso-funerarioa konpartitzen dute. Beraz, baliteke erlijio komuna eduki izana neolitikoan. Horrelako argudioen

artean hizkuntza hauek zituzten antzeko hitzen adibideak ageri ziren: AMA-amajainkosa, ATAN-atea, ATANAS-iluntasunaren atea, KAR-garrak...

Interneten kontsultatu zituen bertze lan batzuetan datuak saldoka aurkitu zituen Romainek, hala nola, euskarak, iberierak zein etrurierak Metal Aroko zenbait hitz konpartitzen zituztela, izeba, alaba, arreba, neba, ahizpa edota asaba errate baterako, eta azterketaren egileak bere buruari galdetzen zion ea *–ba* silabak ez ote zuen matriarkatuarekin zerikusirik izanen.

Bertzetik, Romain unibertsitateko lehen urtetik zegoen ohituta *Ishtar, Hammurabi* eta gisa honetako hitz mesopotamiarrei, baina orain, hitz hauen euskarazko erranahia ematen zuen azalpena aurkitzean, harri eta zur gelditu zen. Hammurabik, k.a. 1792-1750. urtetan Babiloniako erregea izandakoak, zeinari ezagutzen den lehenbiziko kode legala egozten zaion, ba omen du euskarazko erranahia. AMA-UR-ABI: uren amaren hilobia alegia. Eta Ishtar, Babiloniako jainkosa, euskarazko izar hitzaren parekoa litzateke.

Romainek ezin zuen irakurtzen ari zena sinetsi. Gehiegi zen. Une batean, euskarari buruzko lan ezberdin batzuk irakurtzen ziharduela, Yves Marie gaztetako lagunaren ahotsa entzun zuen, erasokor: *zeren esperoan hago Romain? Egin ezak arestion pentsatu duan hori. Oraingoan nik ez diat deus erran behar* erran zuen Pierrek gero adiskidetsuki. Hobe duk, bai Yves Mariek berriz, *aurrekoan argi ikusi zuan nork zian arrazoia. Ez zekiat* Romainek azkenean duda-mudatan. *Egin ezak Romain, egin ezak, hobe duk egindakoaz damutzea ezenez deus egin ez izanaz damutzea.*

Ilargiren helbide elektronikoa apuntatua zeukan papertxoa bilatu zuen azkenean, eta Yves Marieren aholkuak edo aginduak jarraituta, email bat idatzi zion neska euskaldunari:

*Kaixo Ilargi, zer moduz?*

*Romain naiz, Normandiako arkeologoa. Ez dakit nitaz oroituko zaren, lehengo egunean garagardo bat hartu genuen elkarrekin La Iguana pareko ostatuan.*

*Non barna zabiltza?*

*Etorri zara jada Guatemalatik?*

*Bon, afera da euskarari buruzko datuak biltzen ari naizela ikerketa pertsonal baterako eta jakin nahi nuke ea bertze trago bat hartzen ahalko genuen egunen batean.*

*Erantzun ahal duzunean.*

*Bertzerik gabe, besarkada bat eta bertze bat artio.*

*ROMAIN*

***

Autobusak San Cristobal de las Casaserako bidea hartu zuen, Mexiko DFko karrika burrunbatsuak gibelean utzita. Romainek karriken desfilea behatzen zuen kristaletik Pierre trufaka hasi zitzaionean: *ikerketa pertsonala? Zer duk hori? Horrela deitzen diozue unibertsitarioek nesken ligatzeari? Ikerketa pertsonala egitea?* Romain apur bat gorritu zen Pierreri arrazoia emanez. *Nola demonio bururatu zaidak «ikerketa pertsonala» paratzea?* galdegin zion Romainek bere buruari. *Hori proposamen indezentea!* Yves Mariek barre-algara batean. *Hizkuntza ikertu baino bera goititik beheitiraino ikertu nahi duala ulertuko dik* erran zion Pierrek burlaizean. *Bon, akaso ez dik emaila irakurriko, edo zorte apur batekin, ez duk nitaz oroituko* pentsatuz kontsolatu zuen Romainek bere burua.

*Karnag* arkeologia aldizkaria motxilatik atera eta, eserlekuaren gaineko argitxoa pizturik, orrien artean ezkutatu zuen bere lotsa, bere arreta Ilargirengandik urrundu nahian eta Yves Marie zein Pierren ahotsak isiltzeko asmotan.

Egiptoko esfingearen argazki dotore batek eten zion orrien pasatzea. Kefren faraoiaren erretratua omen da eta milaka urte nahikoa ongi kontserbatuta biziraun eta gero, kalte ugari ari da jasaten hondar urteetan. Hezetasunak nahiz tenperatura aldaketak batetik eta Kairotik datorren kutsadura atmosferikoak bertzetik, arriskuan paratu dute eskultura erraldoi honen etorkizuna. Basamortuko hareak babestu du mendeetan zehar faktore hauetatik, Europako arkeologoek lurpetik atera zuten artio. Mendeetan naturak berak babestu duena gizakiak arriskuan paratu izana urte guti batzuen bueltan paradoxikoa otu zitzaion Romaini. Eta Palenque etorri zitzaion burura. *Eta maiek nahita abandonatu bazituzten beren piramide eta jauregi ederrak naturak irentsi eta betiko babes zitzan?* pentsatu zuen. *Auskalo.*

Burua eserlekua eta kristalaren artean bermatu, eta ideia hau buruan, loak hartu zuen.

***

Zenbait egun lehenago Ilargiren erantzuna jasotzean paratu zuen pozezko eta urduritasunezko aurpegi berarekin itxaroten zuen Romainek neska euskaldunarekin La Iguana pareko ostatuan finkatutako ordua. Hasi berria zeukan garagardoa Ilargi ailegatu zelarik, eta barrara abiatu zen bertze baten xerka. Norbaitek kortesiazko keinutzat har zezakeen arkeologoaren erreakzioa, baina sakonean, elkarrizketa nondik hasi ere ez jakitearen beldurrari ihes egiteko ahalegina zegoen, bertzerik gabe. Edatekoa eskuratuta mahaitxoaren inguruan eseri ziren biak. Izotza apurtzeko edo, ea Guatemalan zer moduz galdetu zion Romainek. *Ongi* motz batez erantzunik, gaiari heldu zion neskak.

—Beno ba, nola doa euskarari buruzko ikerketa pertsonala?

Ilargik erabili zuen doinu ironikoak Romainen susmoak baieztatu zituen, hots, neskak pentsatuko zuela euskararena berarekin garagardo bat hartzeko aitzakia baino ez zela izanen. *Erran nian* agertu zen Pierre. *Ixo!* sartu zen Yves Marie Romainen defentsan.

—Bada –hasi zen Romain zezelka–, egia erran, ezer guti dakit euskarari buruz. Are gehiago, berriki artio Frantziako hegoaldeko dialekto bat baino ez zela uste nuen. Igorri nizun emailean erraten nizun bezala –justifikatu zuen bere burua gazteak–, ikerketa batzuen bitartez jakin dut zinez hizkuntza zaharra dela, aurreindoeuropearra edo, ez? Ez dakit, zer kontatzen ahal didazu zuk honen inguruan?

—Horra hor milioiko galdera! Euskalduna banaiz baina ez hizkuntzalaria. Ez dakit, ez da erantzuten galdera erraza... Noizkoa den jakin ez arren arrunt zaharra dela nahikoa garbi omen dago, hala frogatzen omen dute bere hitzek. Tresna batzuen izenen erroan adibidez, tresna horiek harrizkoak ziren garaietatik datozela antzeman daiteke, aizkora, aizturrak edota aitzurraren kasuetan bezala adibidez. Ez dakit, hauek adibide tipikoenak dira, beti erraten direnak, baina beno, egia erran, nik ezin dizut anitz gehiago erran. Beharbada hizkuntzalari bat beharko zenuke.

Ilargik zioena logikoa iruditu zitzaion Romaini. Europako balizko hizkuntzarik zaharrena mintzatzeak ez zaitu berez euskal filologian lizentziatu bihurtzen, inondik inora, eta onartu egin zuen liburutegi nazionalean euskarari buruzko lanetan Babilonia edota Egipto bezalako tokiekin lotuta egon zitekeela irakurri zuenetik kutsu exotikoa hartzen hasia ziola euskararen inguruko guztiari. Baina zer zekien egiazki euskaldunei buruz? Guti, ezer ez errateagatik. Istant bat pentsatuta, txikitan eskolan irakurrarazi zioten Victor Hugoren «Pirinioak» liburua eta Renneseko unibertsitatean ezagutu zuen ikasle euskalduna ziren bere erreferentzia bakarrak. Liburuari zegokionez ez zen sobera gogoratzen, leku menditsua zela eta guti gehiago, eta *eras-*

*mus* zegoen ikasle euskaldun horrena... nola erran... xelebrea. Mozkortzen zelarik olerki erotikoak errezitatzen zituela oroitzen zen, eta besta batean, mozkor-mozkor eginda, alimaleko muturrekoa hartu zuela, eta Renneseko ospitalera eraman zutelarik euskarazko bertsoak kantatzen zizkiela bertako langileei.

Bi hauek ziren bere erreferentzia bakarrak. Beraz, Euskal Herria, euskaldun xelebre eta bestazale amorratuen lurralde menditsua baino ez zen Romainentzat.

Parean zeukan garagardoari hurrupa luze bat eman zion, pentsakor, edariaren zaporea luzez dastatuz. Ez zuen balio bere burua gehiago engainatzea, euskararena benetan aitzakia izana zen Ilargirekin trago baten hartzeko. Gainera, konbentzitua zegoen neskak gauza bera pentsatzen zuela. *Orduan,* erran zuen bere baitan, *elkarrekin trago bat hartzearen interesa bion aldetik zuala erran daiteke? Bertzenaz, ze beharra zeukan emaila erantzuteko?*

—Zer moduz Palenquen? –galdetu zuen Ilargik bat-batean Romainen hausnarketak etenez.

—Ongi, ongi. Poliki-poliki baina badoa.

Romainek bertze aukera bat ikusi zuen eta aprobetxatu egin zuen.

—Nahiko bazenu, indusketetara etor zintezke egunen batean, nik neuk egin niezazkizukeen gida lanak.

Ilargik berriro onartu zuen Romainen gonbidapena, eta Yves Mariek eta Pierrek zoriondu egin zioten Romaini maniobrarengatik.

***

—Erabateko planifikazio urbanistikoa zuten, begira, pilotaren jokoa zegoen han, zeinean hastapenean uste zenaren kontra, alde errituala kirol ikuskizunari nagusitzen

zitzaion. Ongia eta gaizkiaren arteko metafora zen joko hau, bi arerioen arteko neurketa.

»Hemengo piramideak behatoki astronomikoak ziren, bai jainkoei eskaintzak egiteko datak ezagutzeko bai nekazaritzarako aro hoberenen kontrolerako. Begira hor adibidez, piramide honen goitiko aldearekin eguzkia bere zenitera noiz ailegatzen zen neurtzen zuten, maiatzaren 10a hain zuzen. Horrek euriaren aroaren hasiera markatzen zuen. Piramidearen alde guztietako espaloiak 365 dira osotara, urteko egun bakoitzeko bat.

—365? –moztu zion Ilargik.

—Bai, guk erabiltzen dugun egutegi gregorianoaren egun kopuru bera. Hori bai, beraiek hogei eguneko hemezortzi hilabeteetan banatzen zuten urtea, eta gero bortz eguneko tartea uzten zuten urtea osatzeko. Tarte horri *wayeb* deitzen zioten, eta igarotako urtearen nolabaiteko balantzea eta urte berriko asmoen inguruko hausnarketa egiteko baliatzen zuten.

—Egun kopuru bera... Karajo, ze kasualitatea, ez?

—Bon, kasualitatea baino eguzkiaren zikloa aztertzearen ondorioa. Dena dela, denbora neurtzeko bertze bi sistema zeuzkaten. *Tzolkin* edo periodo sakratua, 260 egun irauten zuena, eta *katún*, 20 urteko periodoa, *Bak'tunm* periodoaren baitan txertatzen zena eta osotara 5200 urteko zikloak osatzen zituena. Azken periodo luze hau 2012ko abenduaren 21ean bukatuko da, eta horregatik, mota guztietako espekulazioak zabaldu dira dagoeneko honen harira. Badakizu, mundua bukatuko dela eta gisa horretako ideia apokaliptikoak.

—Karajo...

—Alabaina, maiek ez dute erran egun horretan mundua akituko denik, baizik eta egun horretan ziklo ilun bat akituko dela eta bertze 5200 urteko ziklo berri bat, Argiarena alegia, hasiko dela.

—Karajo –Ilargi alde guztietara begira zegoen, harri eta zur–. Ikaragarria da hemen dagoen guztia. Arras kultuak ziren, ezta?

—Bai, horretan ez dago zalantzarik. Baina badira gauza batzuk arrunt kontraesankorrak. Europan adibidez, XII. mendera artio ez zen zeroa erabili eta maiek milaka urte lehenagotik erabiltzen zuten, baina aldi berean, maiek ez zuten metala edo gurpila ezagutzen.

—Ez zuten gurpila ezagutzen? Eta nola eraiki zuten hau guztia gurpilik gabe?

—Bada, lan handia hartuz –Romainek umoretsu–. Eta dedikazio eta estilo gehiagorekin oraindik. Hor ikusten diren espaloiek adibidez, ekinozioetan suge baten itzala proiektatzen dute bertze piramide horren paretetan. *Kukulcán* izeneko suge lumadunaren itzala da, azteken *Quetzalcóatl*-en parekoa edo. Gerra eta sorkuntzaren ikurra zen maien mitologian, ederra eta arriskutsua aldi berean. Gerlariei adorea ematen zien, merkatariei babesa, eta artoa ureztatu egiten zuen.

—Karajo...

Ordura artio, bi gazteen arteko harreman motzean, Romain zen ia beti galderak egiten zituena. Egun hartan ordea, Palenqueko aztarnategietan, Ilargi ari zen galderak egin eta egin alde guztietara seinalatuz, Romaini erantzuteko denborarik eman gabe kasik.

—Eta arrazoirik gabe abandonatu zutela diozu?

—Beno, arrazoiren bat edukiko zuten, hori argitzea da gakoa, eta horretan gaude gu, abandonuaren zergatien bilaketan buru-belarri.

—Ikaragarria da ageriko arrazoirik gabe abandonatu izana horrelako lana hartu ondoren, ez duzu uste? Ideiaren bat baduzue dagoeneko?

—Bon... hipotesi batzuk egon badaude: idorte handi bat, izurrite bat, gosetea, gerra...

—Zeinen alde zaude zu?

—Ez dakit, denak dira posible nire irudiko, hori hipotesi guztietatik apur bat ez bada... Dena dela, ideia bat dabilkit buruan bueltaka hondar egunetan.

Hau erran eta bat-batean isildu zen Romain.

—Hara, tira ba, kontatu zure ideia hori! –akuilatu zuen neskak.

Ilargik irrikaz begiratu zion Romaini. Hau, neskaren interesa ikusirik, kontakizunari lotu zen.

—Zuk erran bezala, sekulako lana hartu zuten leku eder hau eraikitzeko, beraz, leku garrantzitsua behar zuen izan, kasik sakratua beharbada, eta gauza jakina da kultura hauetan gerrak jokoak adina garrantzia zeukala. Aztekek adibidez, Tenochtitlan eraiki ahal izateko, inguruko herriak suntsitu eta menpean hartu zituzten, eta maien kasuan antzekoa gertatzen zen. Beraz, baliteke inguruko herri indartsuagoko baten mehatxua sentitu izana eta, bere hiri sakratu eta liraina etsaiaren eskuetan ikusi baino lehen, abandonatu eta naturak irentsi eta betiko babes zezan nahiago izatea. Zergatik ez?

—Karajo Romain! –hasi zen Ilargi Romainen hitzekin hunkiturik– Hori da, naturak irentsirik babestua, lurrak eta zuhaitzek babestua denboran zehar. Arras ideia interesgarria da, agian apur bat erromantikoa baina interesgarria. Alabaina, eraikin eta piramide hauek guztiak eraikitzeko gai den herri bat, zergatik ingurukoen beldur izan?

Oraingoan, Ilargi izan zen isildu egin zena galdera egindakoan. Segidan, begi arranpaloekin eta ideien bonbilla piztu izan bazitzaion bezala begiratu zion Romaini.

—Hori da Romain, hori da! Ez inguruko herrietatik, baizik eta zibilizazio indartsuago batetik babesteko, urrunekoa eta aise indartsuagoa zen zibilizazio batetik babestu nahi zuten Palenque. Nola edo hala jakin zuten espainiarrak etorriko zirela eta den-dena suntsituko zutela...

—Jakin bai, nola?

—Ez dakit Romain, nik ez ditut maien sinesmenak sobera ongi ezagutzen baina herri ameslaria zen, ametsak interpretatzen zekiena, ezta? Zuk zeuk erran duzu astronomo bikainak zirela eta matematiko ezin hobeak, lurrikaren kontrako sistema batekin eraiki zituzten piramideak gure tresneri modernorik gabe... naturaren energiak interpretatzen zituzten... ez dakit, benetan kultura aurreratua zen, sentimenduak zein naturaren energiak ederki asko maneiatzen zituzten, ametsak... Zertaz ez zuten zinez iragarpen txar edo katastrofiko bat egiteko gaitasunik izan behar? Begira gizon bizardunak etorriko zirela zioten indigenen profeziak eta abar.

Pentsakor gelditu zen Romain, begiak neskaren begietan josirik.

—Bai, ez dakit. Beharbada, Kolon baino aise lehenago bikingoak etorri zirela dioten bertsioek arrazoia dute, eta batek daki hortik ez ote zetozen bizardunen profeziak. Nolanahi ere, eta ikusten dudanez, maite dituzu horrelako gaiak, ez? Akaso denok barnean daramagun arkeologoa iratzarri dizu Palenquek. Bertze aldetik ez nau harritzen, harri hauek alimaleko indarra transmititzen dute...

—Dudarik gabe Romain, xarma berezia daukate, ikusi baino sentitu egiten dena. Hala eta ere, sentimendu kontrajarriak ere sentiarazten didate.

—Zer, bada?

—Harri hauen gibelean bai, sekulako kultura eta zibilizazioa daude, artistak, astronomoak, matematikoak... –Ilargi isildu egin zen istant batez, apur bat tristatua– Baina heriotza eta esklabotza ere ikus daitezke. Zenbat bizi ez ote ziren bidean gelditu piramide hauen eraikitzeko? Are gehiago erraten badidazu ez zutela gurpila ezagutzen. Hau dena eraikitzea agindu zuen erregeak edo dena delakoak, noraino zabaldu zuen errepresioa harrizko pareta hauen edertasuna mantendu ahal izateko? Bada, hori guztia ere

senti dezaket harri hauek ukitzean, gizakiaren handitasuna eta krudelkeria aldi berean nolabait. Begira, Mikel Laboak, Euskal Herriko abeslari batek, badu kanta bat… –Ilargik kopeta zimurtu zuen, pentsakor, kantaren letra gogoratzeko ahaleginetan– Horrelako zerbait dio –eta kantaren melodia erdi xuxurlatzeari ekin zion:

*Zazpi Atedun Tebas hura, nork eraiki zuen?*
*Liburuetan Errege izenik baizik ez da ageri.*
*Erregeek garraiatu ote zituzten harritzar haundiok?*
*Eta hainbatetan porrokatua izan zen Babilonia,*
*nork jaso zuen beste hainbestetan?*

Begiak itxi zituen Ilargik, eta eten txiki bat egin zuen. Esku bat labaindu zuen ondoan zeukan harrizko pareta batetik, eta, arnasa sakon hartu eta gero, ahots hari fin batez segitu zuen kantuz:

*Erroma bikain hura garaitza arkuz beterik.*
*Nork altxatu zituen?*
*Nortzuk menperatu zituzten Zesarrek?*
*Hain ospetsua zen Bizanziok, jauregiz besterik*
*ez ote zuen bertako jendearentzat?*
*Alegiazko Atlantidan berebat,*
*itsasoak irentsi zuen gauean, biztanleak ito zorian*
*oihuka ari zitzaizkien beren esklaboei laguntza eske.*
*Alejandro gazteak India bereganatu zuen.*
*Berak bakarrik ote?*
*Zesarrek galoak menderatu.*
*Ez ote zuen berarekin sukaldari bat bederen?*

Romainek zeharo liluraturik jarraitzen zuen neskaren interpretazio xumea, mugitu eta solastatu gabe, inguruan biltzen ari zen magia uxatzeko beldurrez. Palenqueko harriak matxinatzen zirela sentitu zuen Romainek.

*Felipe Espainiakoak negar egin zuen bere Armada*
*urperatu zenean. Ez ote zuen beste inork negarrik egin?*

*Federiko Bigarrenak Zazpi Urteko Gerra irabazi.*
*Nork bestek zuen irabazi?*
*Garaitza bat orrialde bakoitzean.*
*Nortzuk atondu zituzten garaitza banketeak?*
*Hamar urtez behin gizon haundi bat.*
*Nork ordaintzen zituen haren gastuak?*

Ilargik airean dilindan utzi zuen azken esaldia, eta hasperen egin zuen. Segundo bakan batzuen isilunearen ondotik, begiak ireki, Romainen begietan bereak iltzatu, eta amaiera eman zion kantuari:

*Zenbat historia, hainbat galdera.*
*Historiak bezainbat galdera.*
*Zenbat historia! Zenbat galdera!*

Kantua akiturik, mutu gelditu ziren bi gazteak denbora tarte batez, elkarri begira.

—*Zenbat historia, zenbat galdera* –errezitatu zuen Ilargik berriz–. Hori da, Romain, sentimendu kontrajarriak… Nolanahi ere, suposatzen dut arkeologoek hurbilagotik eta hamaika aldiz biderkatuta sentituko duzuela zera hori guztia, ez?

—Bai… eta ez… –erantzun zuen Romainek Ilargiren hausnarketa sakonen harira zer erran sobera ongi ez zekiela–. Argi dago arkeologoarena ez dela kasualitatez aurkitzen den lan horietariko bat. Hau sentitu egin behar duzu, gozatu, bizitu. Sentimenduek borborka egiten dute maiz, eta neurri handi batean pribilegiatuak gara. Guk ikusi eta ukitzen ditugun altxorrak ez ditu inork ukitu ehunka edo milaka urtetan. Errege edota faraoien eskuetatik gure eskuetara zuzenean pasatzen dira objektuak, eta, hauekin batera, errege eta faraoi horien sentimenduak eta indarrak. Lurrean ibili beharrean Historia liburu batean ibiliko bagina bezala da. Zapaltzen dugun lurra irakurri egin behar dugu, eta kontu handiz gainera, zeren eta lur hori harrotzen dugularik Historia liburu

horren orriak ari gara suntsitzen, eta ez da irakurtzeko bertze aukerarik izanen, ez dago gibelera egiterik. Irakurtzen dugun liburuaren orria erreko bagenu bezala da.

—Ez duzu kontatu beharrik Romain, aurpegian ikusten zaizu gozatu egiten duzula honekin... Irakurritako orria erretzearena erraten ari zinenean Euskal Herriko hiriburua etorri zait burura. Iruñeko alde zaharrean obrak egiten dituzten aldiro aztarnak agertzen dira, denetan ez bada gehienetan bai bederen. Bada, nahiko gainetik aztertu eta porlanezko plantxa batez estaltzen dituzte gero. Zure adibidea erabiliz, gure historiako liburuaren orriak errez. Kasurik larriena Gazteluko plazarena izan zen beharbada, non aparkaleku bat egiteko plaza guzti-guztia goititu zuten, eta espero zitekeen moduan, garai ezberdinetako aztarnak agertu ziren: harresiak, harri landuak, eskeletoak, hilobiak... Agintariek eta obrako arduradunek dena behar bezala aztertzen ari zirela erraten zuten bizkitartean, aparkalekuaren kontrako plataformako kide batzuk obrako kamioiak jarraitu zituzten egun batez, eta denen susmo mesfidagarrienak baieztatu ziren. Hots, harri zein hezur bakan batzuk ikertu zituztela itxura egiteko, baina gainerako aztarnak hiriaren kanpoko aldean dagoen zabortegi batera ari zirela botatzen kamioikadaka, milaka eta milaka urteko aztarnak zaborra bihurtuz. Zinez lotsagarria, salagarria...

—Hori astakeria! –erran zuen Romainek ez zerurako ez lurrerako.

—Bai, baina beno, Iruñeko agintariek ez dute lotsarik egia erran, eta makurrena da erabat ohitzen hasiak garela horrelako astakeriarekin. Orain adibidez, hara non eta hiria Europako hiriburu kulturalerako hautagaitza aurkeztu dute lotsagabe horiek, hori muturra! Iruñea hiriburu kulturala! Aukera gehiago izanen zituzten

kostaldeko hiribururako aurkeztuko balute nahiz eta Iruñeak itsasorik ez izan!

—Ah ze kortsario koadrila agintari horiek, ez? Aztarnak zabortegira botatzearena... ez dakit. Arkeologia irakurritako orriak erretzea baldin bada, horiek egin zutena liburua egin aurretik papera egiteko zuhaitz guztiak erretzea izan zen. Hori astakeria, ez zait bertzerik ateratzen. Lehengoan –jarraitu zuen Romainek– Alemaniako Koloniako udal artxibategia suntsitu zen. Ez zen nahita izan Iruñeko kasuan bezala, baina bai agintarien arduragabekeriagatik. Orain, badakizu, Europako hirietako agintari guztiei buruan sartu zaie hiriak metroa, antzoki erraldoi bat edo izen ospetsu bateko museoa behar duela modernoagoa eta garatuagoa izateko, eta horrekin daude itsututa, edozein prezio ordaintzeko prest. Bada, Kolonian, hiriko Severin auzo historikoan metroa sartzea bururatu zitzaien. Zonaldeko barrideak kontra agertu ziren, eta artxibategiko zuzendariak ere eraikinean izaniko kalteak anitzetan salatu zituen, baina agintariek entzungor egin zuten. Azkenean, eta zoritxarrez, urteen joan-etorrian pilatutako bodegen labirintoek eta Rhin ibaiaren hezetasunak hondamendia ekarri zuten, barrideei eta udal artxibategiko arduradunei arrazoia emanez. Segundo guti batzuetan birrindu zen Alpeen iparraldeko artxibategi garrantzitsuenetarikoa zena, sei pisuko eraikin historikoa bere barneko ondasun guztiarekin lohiak irentsia. Ehunka dokumentu eta altxor historiko desagertu ziren, 922. urteko dokumentu zaharrenetik Heinrich Böll literatura Nobel saridunaren lanetaraino. Suntsituta, den-dena suntsituta politikarien eta teknikarien anbizio ekonomikoarengatik, sosagatik suntsituta. Benetan sinestezina. Sosaz ordaintzen ezin dena sosagatik suntsituta. Orain, zonaldea egonkortzeko, milaka eta milaka tona zementu ari dira botatzen, Iruñean bezala, irakurri gabeko liburuaren orriak betikoz errez.

*Guk xingarra dugunerako, garizuma*

## Kodea

—Terik nahi? Kaferik?

—Tea faborez, esnearekin eta azukrerik gabe.

Omar Guzman Haydée Mendozaren etxeko egongelako kanapean zegoen eserita, ordura artio kazetariak bildutako informazio guztia errepasatzen: Cuzcoko apunteak, Palenquekoak, Apostoluarekin izandako hitzordu laburraren laburpena, argitaratutako artikuluak... Haydée sukaldetik etorri zelarik erdiko mahaitxoan utzi zituen paper guztiak tearen hartzeko.

—Nik ez diot ez hankarik ez bururik ikusten, batzuetan pentsatzen dut aiseago ulertzen dudala milaka urte lehenagoko jendea gaur egungoa baino.

—Pazientzia Omar, pazientzia. Joan gaitezen pausoz pauso. Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekuak egin zuen lehenbiziko ekintza Cuzcoko katedralean izan zen, Tupac Amaru Inkaren kaskezurra ebatsiz, ez?

Omarrek baiezko mutua egin zuen buruko mugimendu batez.

—Bigarrenean, Pakal erregearena ebatsi zuten Palenqueko hilobitik, aurrekoan bezala, dena suntsituz eta hiru hildako bidean utziz –kazetariak isilune txiki bat egin zuen–. Zergatik? Zertarako?

—Zergatik baino zein izanen den hurrengoa galdetuko nuke nik.

—Horrelako ekintza gehiago izanen direla uste duzu?

—Ez dakit, zertaz ez? Dakigun gauza bakarra da ultrakatoliko ero batzuk direla, eta *ziklo heretiko* delako hori ixteaz solastatzen direla, beraz, batek daki zenbat buru nahiko dituzten.

—Horren gakoa aurkitzen badugu eta aurrea hartzen badiegu beharbada...

—Ez dakit Haydée, honek dagoeneko misteriozko pelikula dirudi, edo literatura txarreko argumentua...

—Ea –erran zuen Haydéek eskuetan zeuzkan paperetan begirada iltzatuz–, Tupac Amaru: azkeneko inken burua erran dezagun...

—Bai, inken azken erresistentzia-guneko burua espainiarren kontra, nahiz hondarrean kristautasuna onartu hil baino lehen. Egia erran, ikono bat izan zen Tupac Amaru, edo da oraindik.

—Gero, Pakal, Palenqueko erregea. Honek ez zuen borrokatu espainiarren kontra, ez?

—Ez, honek ez. Honek Era Vulgariseko 615. urtean hartu zuen Jaguarraren tronua, hamabi urte zituela, eta hori espainiarrak zonaldera ailegatu baino mila urte lehenago izan zen kasik.

—Eta zer egin zuen? Zertan nabarmendu zen?

—Bon, hirurogeita zortzi urtez gobernatu zuen. Hastapenean Palenque ondoko hiriak etsai zituen, baina zenbait akordioren bidez bakea ekarri zuen zonaldera. Diplomatiko ona erran dezagun. Bake urte guztiak hiria edertzera eta apaintzera dedikatu zituen, eta horregatik erraten da Palenque hiririk ederrena dela maien hirien artean. Bertzetik, botere zenbait egozten zizkioten Pakali, euria eragitearena bertzeak bertze.

—Beraz, erran daiteke Pakal ere ikono bat dela?

—Ikonoa ez dakit, baina momentuz ezagutzen denagatik, bere garrantzia dauka maien munduan. Egiptoko Tutankamonen antzekoa izan daiteke apur bat. Tutankamon berez ez zen faraoi distiratsua izan gobernari moduan, ez zen horretan nabarmendu egia erran, baina bere hilobia altxorrez beteta aurkitu izanak ospe handia eman dio gure artean, faraoi ospetsuena izateraino beharbada. Paka-

lekin antzeko zerbait gertatu da. Errege eta gobernari anitzen datuak falta zaizkigu, bizkitartean, Palenque hiria zein bere hilobia aurkitu izanak nolabaiteko ospea eman dio.

Kaskezurren ebasketak gertatu ziren tokietan agertutako esku-orrien kopiak hartu zituen Haydéek, pentsakor.

—Zer erran nahi du *licet ab initio* esaldiak? –galdetu zion Omarrek Haydéeri eskuetan zituen paperei begira.

—Horretan ari nintzen pentsatzen. *Licet ab initio* Pablo III.ak 1542. urtean heresiaren kontra borrokatzeko kaleratu zuen bulda baten izenburua da, eta *hasieratik bidezkoa da* erran nahi du, latinez.

—Eta zer dio bulda horrek?

—Bada, imajinatuko duzunez, astakeria anitz, Aita Saindu gehienen bertze buldak bezala. Begira, hemen kopia bat daukat.

Omarrek Pablo III.aren buldaren kopia hartu zuen, eta gainbegiratu bat eman zion. Haydéek azpimarratua zeukan pasartea arreta handiagoz irakurri zuen:

*Erromako Inkisizio Unibertsal Sakratu eta Gorenaren kongregazioak fede katolikoa garbi atxikitzea du misio gisa, zernahi heresia urrun kontzea eta deabruaren iruzurrengatik egiatik urrundu direnak elizarat berriz zuzentzea; halaber, beren gaitzetsitako doktrinetan fermuki tematzen direnak kolpatzea, zigorrak bertzeendako adibide gisa erabiliz.*

—Hau Aita Saindu batek idatzi zuen? –erran zuen Omarrek begi arranpaloekin harri eta zur– Bikain, orain bederen badakigu zergatik eta zertan oinarritzen diren ero katoliko hauek.

—Bai, *licet ab initio* honek beren leloa edo ildoa ematen du. Beharbada bulda honek markatzen duen bidean kokatzen da Pakal erregearen kaskezurra ebastearena, beharbada ez dute ikonorik bilatzen baizik eta herejeak, bertzerik gabe.

—Aizu Haydée, uste al duzu Zacatecas-eko katedralean eta Santo Domingoko tenpluan berriki aurkitu diren hogeita hamazazpi momiek eta hebreeraz, kaldeoz, grekoz eta latinez zegoen bibliak loturaren bat izan dezakeela honekin guztiarekin?

—Ez dut uste, kasualitatez izan da aurkikuntza, eraikinak zaharberritzen ari zirela. Buldak erraten duenak ordea, zer pentsa ematen du. Bertzenaz, zertara dator zigorrak bertzeendako adibide gisa erabiltzearena? Agian hortik heldu da hereje... erran dezagun ospetsuen kaskezurrak ebastearena. La Jornadan egin nahi zuten elkarrizketa bezala, publizitatea lortu nahian seguruenik. Orain, galdera da ea kaskezur nahikorik dituzten ala gehiago nahiko dituzten.

—Hatuey! –egin zuen oihu Omarrek– Hatuey Kuban matxinatu zen lehen indioa izan zen, zeinak sutara zigortua izan eta gero erran omen zuen nahiago zuela bataiatu gabe hil, espainiarrak joaten ziren zeru delako horretara ez joateko.

—Hatuey... –Haydéek pentsakor– Eta non dago hilobiratuta?

—Ez dago jakiterik. Beharbada horretan daude ero hauek, auskalo.

Haydéek zalantza aurpegia paratu zuen solastatu baino lehen.

—Ez dakit Omar, orain artio ebatsi dituzten kaskezur guztiak pertsonaia nahikoa ezagunenak ziren, eta Hatuey hau aldiz, nork ezagutzen du?

—Agian arrazoi duzu, bai... nik ere, egia erran, Fidel Castroren Zibilizazioen elkarrizketa diskurtsoa irakurri artio ez nuen ezagutu.

—Nik uste esku-orri hauetan egon behar duela gakoak. Zenbaki konbinazio ezberdinak ageri dira bi esku-orrietan, hortaz, baliteke. Hastapenean bibliaren pasarteen errefe-

rentziak zirela pentsatu nuen, gero, berehala konturatu nintzen ez zutela inolako zentzurik.

—Eta hala bada, zertarako paratu? Poliziari pistak ematea litzateke.

—Batek daki zer pasatzen den kaskezur zahar bat lortzeagatik bi edo hiru pertsona hiltzeko prest dauden ero batzuen buruetatik. Zer dakit nik, agian pentsatuko zuten poliziak publikatu eginen zituela esku-orriak, eta herritar friki eta jubilatu andana batek beren asmakizun zoroak deszifratzeari ekinen ziotela, sekulako publizitatea lortuz.

—Bai, zuk uste?

—Ez zen lehenbiziko aldia izanen. Begira *Zodiac* delako horrek Estatu Batuetan, antzeko zerbait egiten zuen. Azkenean, eta oker ez banago, jubilatu batek asmatu zituen hilketen tokian uzten zituen hieroglifiko antzeko jokoak, eta pelikula eta guzti egin zuten gero.

Haydéek eta Omarrek orduak eta orduak eman zituzten kazetariaren etxean zituzten paper eta informazio guztiei hamaika buelta emanez, zentzuzko erantzun bat bilatu nahiz. Zenbaki madarikatu horiek bibliako pasarteak ez baziren, zer demonio ziren? Datak? Lekuak? Izenak?

Ilundu zuelarik, egindako esfortzu mentalagatik edo, goseak akabatzen zeuden biak ala biak. Janaria etxera banatzen duen enpresa horietako batera deitzea pentsatu zuten afaria eskatzeko.

—Zer da, mugikorra? –galdetu zuen Omarrek Haydéek janari-enpresaren txartela sukaldean pilatzen zitzaizkion paperen artean aurkitu zuelarik.

—Bai.

—Ekarri orduan, nire mugikorretik deituko dut. Kontratatu dudan tarifa berrian kasik debalde ditut deiak gauetan.

Enpresaren txartela hartu eta telefonoaren zenbakiak markatzen hasi zen Omar.

—*No mames güey que tu lengua raspa!* –oihukatu zuen irakasleak supituki– Non daude ero horien esku-orriak?

Bera ere, ero moduan hara-honaka hasi zen. Cuzcon zein Palenquen agertutako esku-orriak mugikorraren ondoan paratu zituen.

—Begira Haydée –hasi zen irakaslea–, esku-orrian ageri diren zenbakiak mugikorraren teklatuan markatzen baditugu, bertze zenbaki baten marrazkia osatzen dute. Hiruak, seiak eta bederatziak bata marrazten dute; batak, biak, hiruak, bortza, zazpiak, zortziak eta bederatziak bia marrazten dute...

—Eta marraztutako zenbakiak alfabetoko hizkien baliokideak dira! –moztu zion Haydéek oihuka.

—Hori da, hori da! Honela, Cuzcon agertu ziren esku-orrien zenbaki konbinazioak Pakal adierazten zuen, eginen zuten hurrengo ekintza alegia.

—Beraz, Palenqueko esku-orrikoan hurrengoa agertuko da...

Orri zuri batean hasi ziren Palenqueko ebasketan agertutako esku-orrien zenbaki konbinazioa idazten, zenbaki horiek osatzen zuten marrazkiak irudikatzeko, eta irudiak hizki bihurtzeko azkenik.

—*Moctezuma*, noski! Nolatan ez zaigu lehenago bururatu?!

—Eta non dago lurperatuta Moctezuma?

—Zehatz-mehatz ez dago jakiterik, baina museo antropologikoko areto aztekan dauden hezurren artean dagoela dioen zurrumurrua ibili da betidanik.

***

Haydée eta Omar museo antropologikora ailegatu zirenerako, poliziak eremu guztia hartua eta itxita zeukan. Barnean, sarrerako bi zinpekoen gorpuak odolusten ari ziren,

itxuraz, ebasketa baten biktima. Palenquen gertatu bezala, kristal hautsiek ohartarazten zuten non ibiliak ziren *lapurrak*. Aztekar kulturaren aretoko lurreko kristal hautsiak izan ezik, dena zegoen bere tokian. Itxuraz bederen.

—Dena? –galdetu zuen Haydéek kazetari txartela erakutsita polizia buruarengana hurbiltzea utzi ziotelarik.

Ez, ez zegoen dena: kaskezur bat falta zen hezurren artetik. Ea lurreko kristalen artean esku-orririk ba ote zegoen galdetu zuenean poliziak horietako bat eman zion Haydéeri, ia garrantzirik eman gabe. Gaizkileak Haydée eta Omarren aurkikuntzaren jakitun balira bezala, ez zen zenbaki konbinaziorik ageri:

*MESIAS BERPIZTERA DOA.*
*Licet ab initio.*
*Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua*

*Ezin izarrei begira ibili, oinetakoan harria dugula*

## Andere-zaldia

*Hezurrezko hiru zuloko txirularen melodiek kobazuloaren paretetan errebotatzen dute, oihartzun hipnotiko bat hedatuz. Musika entzunen balute bezala, eta suaren garren eraginez, dantza egiten dute estalaktitek. Klaneko zazpi zaharrenek, txamanaren ondoan, erritmoa markatzen dute larruzko danborretan. Gero eta biziago, gero eta biziago, biziago, biziago... Emakume txamana, erdi biluzik eta oinutsik, jauzika eta jira-biraka ari da, hezurrezko musika tresnari atsedenik eman gabe. Orein larruz eginiko buru estalkiak burutik beheiti estaltzen dio bizkarra gerriraino, bularrak agerian utziz aitzinaldean. Belar idor erreen usain sendoak koba barneko mikroatmosfera kutsatu egiten du, bizidunen eta hilen munduen arteko distantziak murriztuz.*

*Txamanaren begiek harrotutako inurritegiaren mugimendu eroa dirudite. Bere gorputzaren dantza sinkopatua gero eta azkarragoa da, gero eta kontrolaezinagoa, musika eta dantzaren etenik gabeko* crescendoa *astinaldiz astinaldi osatuz, konortea galdu artio.*

*Gero, zeharo murriztu da ikusmena. Ilun dago. Gar erdi amatatuen distira eta kea dira nagusi leize-zuloan. Larruzko danborrek erritmo motela markatzen dute orain, hil aurreko bihotz lodi baten erritmoa. Txirula mutu dago emakume txamanaren gorputzaren ondoan, lurrean. Ahuntz larruen hotsek txamana gidatzen dute arbasoen eta Espiritu Handiaren mundu ikusezinean barna, Ama-lurraren bihotzaren taupadak imitatuz.*

*Une batez, txamanaren mugimenduak antzemateen dituzte danbor-joleek, eta emeki-emeki, desagertuz doa belar idorren kea. Txamanak, zutik jada, ikatz puska batekin eta trazu bizkorrez marrazten du kobaren sabaian zaldiaren zerra biribila, hanka sendoak, lepoaren oinarrian emakumearen gerri estua, bular biribil-biribilak, aurpegi estatikoa, zabaldutako besoak suge bana eskuetan...*

***

Harritzekoa bazen ere, Romain gosaltzen ari zen Kilian bere logelatik atera zenerako.

—Hau ohorea, hi –erran zion Kilianek isekari–, *c'est magnifique!*

—Bai, bazekiat ez duala batere ohikoa ni goiz jaikitzea, eta are gutiago gosaria prestatzea, baina zer nahi duk, gau erdian iratzarri nauk eta ezin izan diat berriz loak hartu. Amets puta hauek erotu behar naitek.

—Berriz sorgin lirainekin ametsetan?

—Ez zekiat, ez zekiat... hagitz amets arraroak dituk –Romainek koilaratxoa zorabiatzen zuen esne basoan, begirada urruntasunean galdua–, egiazkoak dirudite, benetan.

Erdi Aroan, prehistorian... eta beti sinbolo bera ageri duk, zaldi emakumea, edo emakume zaldia, nahi bezala. Sentsazio arraroa duk, alimaleko indarra transmititzen dik, edo energia berezi bat. Ez zekiat... nolanahi ere, gauza bat ala bertzea izan, izerdi hotz batean bildurik iratzartzen nauk gau erdian, eta gero ezinezkoa egiten zaidak berriz loak hartzea. Hau duk hau pitokeria!

—Begira ezak alde baikorretik Romain, bederen gogoratzen dituk izandako ametsak, eta badakik zein duan ezinegonaren zergatia.

—Gaitz erdi –Romainek ironiaz.

—Niri anitzetan gertatzen zaidak iratzartzeko momentuan oroitzen nauala egindako ametsaz, baina gero, segundo batzuk geroago, seko atzentzen zaizkidan, eta sentsazio ona edo txarra gelditu arren, ez diat ametsa gogoratzea lortzen. Bertze batzuetan aldiz, ez nauk kontziente ametsa egin izanaz baina egunean zehar ikusitako zerbaitek, bat-batean, gogora ekartzen zidak egindako amets hori. Aizu –Kilianek erlojuari begira–, autobusera joateko ordua diagu, eta botatzen ari dian euri-erauntsiarekin ez nikek furgoi baten erremolkean joan nahiko.

—Ez, segi hik. Nik gaur ez diat Palenquera joan behar. Guzman irakasleari deitu zioat kontu batzuei buruz solastatzeko eta goiz honetarako finkatu diagu hitzordua, San Cristobalen bertan.

***

Behar baino gehiago kostatu zitzaion Romaini Omar Guzman ostatatua zegoen hoteleraino ailegatzea, izan ere, euriak botatako ur guztia karriketatik beheiti zihoan oihaneko errekastoen moduan, bortizki. Bertakoen axolagabekeriarengatik ez balitz uholde arrisku handia zegoela pentsatu izanen zuen Romainek. Hilabete batzuk lehenago, San Cristobal de las Casasera lehenbizikoz ailegatu

zelarik, ikaragarrizko gehiegikeria iruditu zitzaion espaloien altuera, desproportzionatua nolabait indigenen altura kontutan hartuta, izan ere, leku askotan indigenen belaunak baino altuagoak ziren espaloiak. Orain ordea, euri tropikalaren ondorioz karrikak erreka bihurturik, ez zien hain altuak irizten.

Telefonoak jo zuen hoteleko logelan.

—Guzman jauna –erran zion telefonoaren bertze aldetik hoteleko harrerako gizonak Omarri–, hemen da Romain Wolf gaztea.

—Ongi da, erran iezaiozu kafetegian itxoiteko faborez, berehala noa.

Luze gabe, hoteleko kafetegian agertu zen irakaslea, karpeta batekin.

—Romain Wolf, e? –agurtu zuen Omarrek, eta ozenki galdetu arren, bere buruarekin ari zen irakaslea– Wolf ez zait, bada, sobera izen normandoa iruditzen...

—Ez da, ez.

—Baina Normandiakoa zinela erran zenidan aurreko batean, ez?

—Bai, eta hala naiz, Granvillekoa, baina aita Londresekoa dut. Londreseko prezio garestiak zirela eta Mantxako kanala zeharkatu eta Normandiara jo zuen bere gazte garaian, Carentan-en eta Caen-en dauden granja ekologiko batzuetan lan egiteko asmoz. Hasiera batean denbora gutirako izanen zela pentsatzen zuen baina gero, Rouengo udazkeneko jaialdietan nire ama ezagutu, eta uste baino gehiago luzatu zitzaion Normandiako itzulixka. Eta ez da bakarra. Ez-dakit-zenbat ingeles bizi da Normandian prezioak Ingalaterran baino merkeagoak direlako, eta bizi direnei bigarren etxebizitza dutenak gehitzen badizkiegu, frantsesak beldurtzeko moduko kopurua izan daitekeelakoan nago.

Romain eta Omar barraren ertz batean eseri ziren hasiera batean. Gosariaren ordutegia akituta turista guztiak desagertu egin ziren, haizeak goizeko erauntsiaren hodeiekin batera eraman izan balitu bezala. Te eta kafesnea eskatuta, mahai batean eseri ziren.

Omarrek Romainek egindako glifo maien marrazkiak atera zituen karpetatik, eta banan-banan azaldu zizkion: gerra-izarraren glifoa, *Chaal* euriaren jainkoarena, *Xibalbá* inframundua edo hilen tokia adierazten zuena, boterera igotzea erran nahi zuena...

Irakaslearen azalpena bukatu eta berehala, galderarik egin gabe, deiaren benetako arrazoia eman zion Romainek irakasleari, eta aurreko gauean bertan izandako ametsa kontatu zion. Irakaslea pentsakor gelditu zen, Romainen kontakizunaren zenbait pasarteri bueltak emanez.

—Ez dakit zer erran Romain, arraroa da, eta zure amets horietan ageri den sinboloarena izan daitekeen moldea Europako trikuharri batean agertu izan ez balitz, hori guztia atzentzeko erranen nizuke, garrantzirik ez emateko, ametsak horixe direla, ametsak baino ez, eta usu, ametsetan sinesteak bizi osoa lotan emateko arriskua duela, baina ez dakit, ez dakit...

—Ametsak ametsak dira, ados, baina hauek ezberdinak dira, ikaragarrizko indarra transmititzen dute, energia. Eta zuk zeuk erran duzu, ametsetako irudiaren moldea Europako basamortu bateko trikuharri batean agertu zen, zer gehiago behar duzu?

—Bai, ulertzen dut zure ezinegona, baina ez dakit Romain, ez dakit...

Pentsakor gelditu ziren biak, mutu, bertzearen begietan begiak josirik.

—Txirularenak azalpen erraza dauka –irakasleak berriz–. Euskal Herriko iparraldean dagoen Isturitzeko kobazuloan, adibidez, Paleolitoko hiru zuloko txistua agertu zen behin, putre hezurrez egina, eta munduko

bertze kultura anitzetan ere ohikoa da hiru zuloko musika tresna. Bertzea, marrazkiarena... –Omarrek zalantza egin zuen jarraitu baino lehen– hori konstelazio baten errepresentazioa izan daiteke beharbada.

Romainek, harriturik, begi arranpaloekin begiratu zion irakasleari.

—Sinboloa kobazuloaren sabaian marraztua agertzen zela erran duzu, ezta? –justifikatu zuen Omarrek bere argudioa– Agian kobaren sabaiak zerua ordezkatzen du, eta sinboloak konstelazio bat.

—Konstelazio bat? Ez dakit, badago horrelako zerbait bertze nonbait?

—Erabat baieztatua ez, baina baliteke. Altamirako polikromoak ezagutzen dituzu? Bisonteen aretoa erran nahi dut.

Baietz adierazi zion Romainek.

—Bada, hondar urteetan indartu den lan ildo batek animalia multzoek konstelazioak irudikatzen dituztela planteatzen du. Ageri den basurdeak Scorpius konstelazioa ordezkatuko luke. Zutik eta eroriak ageri diren bisonte emeen taldeak Pleyadas konstelazioa ilunabarrerantz joaten, eta behor ernariek... –Omarrek kokotsetik pasatu zuen eskua, izenak gogoratu nahian– behor ernariek Hiadas konstelazioa irudikatuko lukete. Eta orein emeek Hesperidas-ena. Bai, hori da, eta azken hiru hauek Naca/Taurus konfigurazioa osatuko lukete.

Ez zerurako ez lurrerako, hitzik gabe gelditu zen Romain.

—Konstelazio konfigurazio hau –segitu zuen Omarrek–, duela 5300 urteko otsailaren 14an eman zen, eta duela 18000 urteko abuztuaren 15ean. Gaur egun, maiatzaren 1ean ematen da...

—Arraioa!

—Ikaragarria, ezta? Imajinatu baieztatu egiten dela teoria hau... polikromoak marraztu ziren urtea zein eguna eta guzti ezagutuko genituzke kasik! Gainera, kobazuloaren sabaian pintatuak egoteari erantzun logikoa bezain sinplea emanen lioke honek, baita zure ametsari ere beharbada. Egin diren azken ikerketen arabera, hasieran uste zena baino lau mila urte lehenago habitatu zuen gizakiak Altamirako koba-zuloa, eta dirudienez, data berri hauek hobeto koadratzen dute pinturen estiloarekin.

—Eta... nik bilatzen dudan irudiaren antzeko konstelaziorik ezagutzen al da?

—Horrelakorik ez, doike. Pentsatu behar duzu konstelazioak irudikatzen dituzten irudiak duela bi mila urtetik hona egin diren interpretazio sinbolikoak direla, ez bertzerik. Beraz, baliteke konstelazio bera modu ezberdinetan irudikatua egotea garai eta kultura ezberdinetan. Nolanahi ere, zure marrazkiarekin loturarik izan dezaketenei dagokienez, eta Centaurus konstelazio australez gain, bada bertze konstelazio bat, Serpentario izenekoa, Ophiucus izenez ere ezaguna dena. Ez du zodiakoko ikurrik baina Scorpius eta Sagitarius artean dagoen hamahirugarren konstelazioa da, eta eskuetan sugeak kontzen dituen figura antropomorfo batez irudikatzen da. Batek daki, agian lotura dauka zure ametsetako irudiarekin.

Pentsakor gelditu ziren biak, irakaslearen azken argudioen hausnarrean. Romainek konstelazioen ideiari ematen zizkion bueltak, irakasleak, koilaratxoari, kafea hoztu nahian. Eta hurrupa ttiki batzuk eman ondoren, karpeta ireki zuen berriz ere.

—Aurreko egunean –jarraitu zuen Omarrek–, zurekin eta Haydée Mendozarekin egon eta gero, kezka ttiki-ttiki bat piztu zitzaidan, onartzen dut. Kasualitate gehiegi iruditu zitzaidan ametsaren istorio hori guztia. Lantxo, liburu eta txosten batzuk begiratu ditut, eta gauza zehatzik aurkitu ez badut ere, moldea agertu zen zonaldean izan ziren zelten inbasioek zer edo zer argitu diezaguketela uste dut –Oma-

rrek karpetako orri batzuk eman zizkion Romaini–. Inbasio hauek Europako ipar-mendebaldetik etorri ziren, beraz –irribarre jator bat eskaini zion Omarrek arkeologo gazteari–, zure arbasoren bat egon zitekeen zelta hauen artean...

Romainek kortesiazko irri ttiki batez erantzun zion irakaslearen graziari, nahiz eta eskuetan zituen orrien beha, ez zen sobera kasurik egiten ari.

—Zer garaiaz ari gara? –galdetu zuen Romainek burua paperetatik altxatu gabe.

—Brontze Aroko une ezberdinez. Gure Aro aurreko 2500. urtetik 600. urtera artekoan guti goiti-beheiti.

—Megalitoen garaia indartsuen zegoelarik beraz.

—Horixe bera. Kultura zeltak trikuharri eta menhirren fenomenoa zabaltzearen arduradun nagusienetarikoak dira. Inbasio hauen eraginak gaur artio iraun du Euskal Herrian, eta zantzurik garrantzitsuena Ortzi jainkoaren agerpena izan zen. Euskaldunek Mari gurtzen zuten ordura artio, amatzat hartuta. Jainkosa hau lurraren barnean bizi omen zen eta naturarekin identifikatzeaz gain, naturaren fenomenoen arduraduna zen euskaldunentzat, ekaitzak kontrolatzen zituena.... Aldi berean, ugalkortasunaren jainkosa zen Mari, eta, gezurra, lapurreta eta harrokeriaren etsaia izaki, emandako hitza ez betetzea zein gizakiarekiko errespetu falta oro gaitzetsi eta zigortu egiten zituen.

—Haydée Mendozak erran zidanaren arabera maien aurreko Olmeka kulturan ere antzeko jainkosa bat bazegoen, ezta?

—Bai, hori da, olmeken jainkosaren parekoa litzateke. Afera da zelten Ortzi edo Ost jainkoaren inposaketak Mariren bazterketa suposatu zuela, eta jainko aldaketa honekin balore berriak ezarri ziren. Ortzi jainko patriarkal honek Europa femeninoarekin bukatu zuen, eta izpiritu gaiztoengandik babesteko ilargi-belarra eguzkilore bihurtu zen.

Ilargia eta gaua gurtzetik eguzkia gurtzera pasatu zen, eta horrela, zeruaren jainkoa bilakatu zen Ortzi. Geroztik, zeruarekin zerikusirik duten euskarazko hainbat hitz, Ortzi edo Ostetik datoz, ortzi-muga, ortots, ortzadarra, oskorri edota ostarte errate baterako. Eta euskaldunen hiru eguneko astea bortz egun izatera pasatu zen: astelehena, astearteа eta asteazkenari ortzeguna, hau da, Ortziren eguna, eta ortziralea, Ortziren ahalaren eguna gehitu ziren, eta toki izenetan ere...

—Barkatu Omar –moztu zion Romainek–, baina zer ikustekorik dauka horrek guztiak nire amesgaiztoen ikurrarekin?

—Bada, egia erran, dena ala deus ez, ez dakit nik ere. Bistan denez, kultura berri baten inposaketa eman zen, eta horrelakoak gertatzen direlarik, batzuetan bederen, gutieneko uztarketa bat ematen da, eta zapaldutako kulturaren aztarna txiki bat gera daiteke oinarri-oinarrian. Zenbatzeko sisteman adibidez, euskaldunen sistema bigesimala hartu zuten inbaditzaileek, hau da, hogeinaka zenbatzearena. Sistema hau frantses zaharrean mantendu zen, eta oraindik antzeman daiteke zenbaki batzuetan gaur egun. Errate baterako Romain, nola erraten duzu frantsesez laurogei?

Apur bat pentsatu behar izan zuen Romainek erantzun baino lehen, bat-batean bere ama hizkuntza atzendu izan balu bezala.

—*Quatre-vingts* –erantzun zuen azkenean.

—Ikusten? *Quatre-vingts*, lau aldiz hogei alegia. Danierak ere oraindik mantentzen du hori... Bon, harira. Erraten nizun bezala, inposaketaren gainetik gutieneko uztarketa txiki bat eman zen seguruenik zelten inbasioan, eta, kasu batzuetan, Amerikako konkistan gertatu bezala adibidez, bertako jendeak ez ohi ditu bere sinesmenak erabat baztertzen, baizik eta jainko zaharren eta berrien arteko nahaste-borraste bat egin eta hori bera gurtzen dute. Zuk zeuk ikusi izan duzu beharbada nolako nahasketa dagoen

hemen, maien tradizioen eta erlijio katolikoaren artean, ezta? Non maien tradizioa eta erlijio katolikoa zeharo nahasirik ageri diren eta dagoeneko zaila den erratea zer den zer.

»Zure sinboloaren moldea trikuharri batean lurperatuta agertu zen, horrek Brontze Aroan kokatzen du. Bertze aldetik, sinbolo bera dugu, faktore ezberdinen uztarketa dena, edo izan daitekeena, hau da, zeltek lurra ustiatzeko indar sortzaile moduan erabiltzen zuten zaldiarena eta euskaldunen jainkosa handiarena.

—Bai... ez dakit, baliteke. Baina hain ageriko gauza baldin bada, zertaz ez da orain artio inon agertu? Eta zergatik sugeak? Eta...

—Bai, bai, arrazoi duzu, hari anitz gelditzen dira airean, lotu gabe, baina tira, niri ez zait hain ideia eroa iruditzen. Begira, bitxikeria bat kontatuko dizut. Maiz, hizkuntzan, sinesmenetan bezala, bi norabideetan joaten dira maileguak. Badakizu zer erran nahi duen euskaraz *andere* hitzak?

Romainek sorbaldak goratu zituen, zalantza adieraziz.

—Emakumea –erantzun zuen irakasleak berak egindako galderari–. Eta badakizu nola erraten den gaelikoz? Bada, *ainder*. Inbasioen ondorioz eman ziren kulturen uztarketan, euskara zaharretik zelten irlandarrerа joandako hitza da. Eta hori adibide bat paratzearren, baina ziur naiz zertxobait bilatuz gero adibide gehiago aurkituko dituzula.

Hitzaren bitxikeria hura Romainen arras gustukoa izan zen. Bilatzen zuen sinboloa ez zuen aurkitu oraindik, baina argi ikusi zuen nola deituko zion: andere-zaldia alegia.

Irakaslea agurtu baino lehen Haydée Mendozaren kontaktua eskatu zion eta, Omarrekin izandako solasaldiaren ideiak buruan dantzan zebilzkiola, apartamenturako bidea hartu zuen Romainek.

*Irakastea bitan ikastea*

## Pirinioetan hasi

Haydée Mendozak igorritako mezu elektronikoak San Cristobal de las Casaseko katedralaren ondoan elkartuko zirela erraten zuen. Romainek harriduraz hartu zuen mezua, izan ere, guti ezagutu arren, ez zitzaion iruditzen Haydée kristaua izan zitekeenik. Are gutiago Jesukristoren jaiotza eta Era Vulgaris delako horren diskurtsoaren ondotik.

Katedralera hurbildutakoan, berehala ulertu zuen dena. Indigenen eskubideen aldeko mintegia zegoen, eta Haydée Mendoza hizlarietako bat zen. Hastapenean kanpoan itxoitea pentsatu zuen Romainek, artisautzako postuei begiratu bat emanez edo, baina sartuz gero ez zuela deus galduko iritzita, hitzaldia entzutera sartu zen.

Antza, altxamendu zapatistaren hasierako urteetako ilusioak eta indigenen eskubideen legearen aldeko martxa zein Mexikoko parlamentuan onartutako iruzurra eta gero, nolabaiteko bidegurutzean zegoen mugimendu indigena. Egoera blokeatu antzera zegoen azken urteetan, usteltzen hasia, eta zirt edo zart egiteko beharra omen zegoen. Batetik, nazioarteko nahiz Mexiko beraren arreta deitzeko, eta bertzetik, eta batez ere, mugimenduaren ilusioak eta indarrak berpizteko. Ahots batzuk erraten zuten mexikar iraultzaren 100. urteurrena profitatu behar zela efektu kolpe bat emateko, bertze batzuk aldiz, propaganda eta folklore politikotik haratago, lan-ildo sendoa, serioa eta etorkizunekoa behar zela zioten.

Romainek arreta handiz jarraitu zituen Haydéeren interbentzioak. Argudio indartsuek Haydéeren ahots eztia gotortzen zuten eta emakume seguru baten irudia proiektatzen zuen kazetariak. Bere argudioak zinez sinesten zituela erakusten zuen, eta erabateko konfiantza zeukala Herriaren indarretan zein herri borroketan. Bai, borroka-

rako grina islatzen zuen. Horrelako ideiak entzutea, beharbada, bizpahiru edo lau hamarkada lehenago ziren ohikoagoak, Hego Amerikako nazio askapenen mugimenduen garaian alegia, baina Haydéeren ahots leunaren determinazioaz adituta ez ziren batere arrotzak suertatzen, ezta eliza batean egonik ere, azken finean, justiziaz ari ziren.

Edozein modutan, eta meza ematen baino, oihanetik barna, fusila eskutan eta berde oliboz jantzita irudikatzen zuen gehiago Romainek Haydée Mendoza. *Bertze garai batean jaio izan balitz*, pentsatu zuen Romainek bere baitan, *munduko edozein gerrillatan eman izan zukeen bizia.*

Haydéek mintegiaren bukaera aldera ikusi zuen Romain, aretoaren azken lerroetan eserita, eta keinu txiki bat egin zion begiekin. Bukatutakoan, gaztearengana hurbildu eta, denbora luzez eta lasaiago egon ahal izateko, ondoko jatetxe batera gonbidatu zuen afaltzera.

***

—Egia erran –hasi zen Haydée–, poztu egin nintzen zure emaila jasotzean, izan ere, zapatisten mintegian parte hartzeko San Cristobalera etorri behar nuenez, zurekin tarte bat egoteko eskatu nahi nion Omarri.

Jarraitu baino lehen, hurrupa ttiki bat eman zion Haydéek zopari.

—Aurrekoan erran bezala –kazetariak berriz–, gai honek liluratu egiten nau, eta euskal-akitaniar guneak betidanik deitu du nire arreta, historiaurreko arte paleolitikotik gaur egungo euskaldunen borroka iraultzaileraino. Toki magiko gisa ikusten dut, bertan egoteko aukerarik izan ez dudan arren. Eta bai, onartu behar dut bertatik bertara ez ezagutzeak lekua apur bat mitifikatzera eraman nauela beharbada, ezin dela leku bat maitatu soilik liburuetan irakurri duzunagatik, baina bertze aldetik, *zergatik ez?* pentsa-

tzen dut batzuetan. Ezin dira Saharako basamortuko dunak maitatu bertan egon gabe? Ezin da Amazonas oihana maitatu bertan egon gabe? Eta, nahi ala ez, hor dago oraindik Euskal Herria, Europako hizkuntzarik zaharrena edo zaharrenetarikoa solastatzen den herria, bere askatasunaren alde borrokan. Gainera, hori guztia guti balitz, zure ametsetako afera gehitu behar zaio orain, hagitz arraroa dena, eta leku honen xarma areagotzea baino egiten ez duena. Zure ametsetako sinbolo fantastikoa...

—Andere-zaldia –moztu zion Romainek.

—Barkatu?

—Sinboloa diot, andere-zaldia deitu dut. Gero eta seguruago nago existitu existitzen dela, eta nola edo hala deitu behar zitzaiola iruditzen zitzaidan. Zelten inbasioekin zerikusirik izan dezakeenez eta andere hitzak euskaraz zein gaelikoz duen antzekotasunengatik andere-zaldia deitzea deliberatu nuen.

—Bai, ba hori, andere-zaldiaren afera –jarraitu zuen Haydéek–, ez da, ez, arras istorio normala. Hondar egunetan ikasle garaiko lanak gainbegiratu ditut eta bai, beharbada arrazoi duzu, zelten inbasioetan egon daiteke gakoa.Genetika txosten batzuetan sakondu dut pixka bat eta, alajaina, sorpresa bat baino gehiago hartu dut.

»Dirudienez, joan-etorriko bidaia izan zen. Europako zenbait leku, Balkanak, Ukrania edota euskal-akitaniar gunea bertzeak bertze, gizakiendako babesgune bihurtu ziren Würm/Wisconsin azken glaziazioan. Honaino nahikoa kontsentsu zabala dago adituen artean. Gero, duela hamabortz mila urte klima epeldu zelarik, edo epeltzen hastearekin batera, Europaren birpopulaketa eman zen babesgune hauetatik abiatuta. Destino bakoitzean kultura garapen propioa izan zuten, eta kultura zelta garapen horietako baten emaitza litzateke. Milaka urte beranduago baina, zelten inbasioak etorri ziren euskal-akitaniar gunera.

—Bai, ulertzen dut –sartu zen Romain pentsakor–, baina zertan oinarritzen zara errateko joan-etorriko bidaia izan zela? Ba al dago antzekotasunik geneetan?

—Bai eta ez, beti bezala. Afera da hori errateko ez naizela pertsonen genetan oinarritzen soilik. Irlandako kasuan errate baterako, animalien DNAk iberiar penintsulako animalienekin egiten du bat, eta Britainia Handiko animalien DNArekin aldiz, ez du deus ikustekorik. Honek erran nahi du iberiar penintsulako jendeek populatu zutela Irlanda, animaliak eta guzti. itsasoz noski. Bizkitartean, Britainia Handia Europako bertze jende multzo batek jendeztatu zuen, lurrez seguruenik, izan ere, populaketa hau eman zelarik itsasoaren mailaren gainetik zegoen Mantxako kanala, planetaren izotz handien ondorioz. Korsika eta Sardinia baturik zeuden modu berean adibidez.

»Dublingo unibertsitateko genetika irakasle batek oso lan interesgarria egin du gai honen inguruan, eta irlandarren eta euskaldunen jatorri genetikoen arteko bat etortzea nabarmena dela dio. Bitxikerien artean aipatzen du bai Irlandan bai Europako hegoaldean ere, esnea metabolizatzeko ezaugarri berezi bat dagoela, edota Irlandako folkloreko «Inbasioen Liburua»n Iberiaren eraginez solastatzen dela. Liburu hau VIII. mendean idatzi zuten garaiko monjeek baina ahozko tradizioan oinarritu ziren horretarako.

—Bitxia bai –onartu zuen Romainek–, beraz, klima epeltzean Pirinioetatik abiatu, bertze leku batean bertze kultura bat garatu, eta urtetara, milaka urtetara, arbasoen lurraldea inbaditzera bueltatu. Hau da hau Historiaren kapritxoa!

—Ba bai. Eta erran bezala, euskal-akitaniar guneko jendeak hegoaldera ere abiatu ziren azken glaziazioaren bukaeran, eta logikoa denez, euskara eta amazigera hizkuntzen artean antzekotasunak ematen diren bezala, euskaldunen eta amazigenen, hau da, berbereen artean ere,

antzekotasun genetikoak ematen dira. Beraz, printzipioz inongo loturarik ez duten eta elkarrengandik milaka kilometrotara dauden zenbait herri, euskaldunak, irlandarrak eta amazigenak alegia, jende multzo berarengandik sortutako herriak direla baiezta daiteke azterketa genetikoen emaitzen arabera.

—Interesgarria bai, arras –erran zuen Romainek–, baina DFn elkartu ginenean bezala, uste dut sobera urrun joan garela denboran. Ez dakit, datu hauek guztiek hasiera bat marraztuko balute bezala edo.

—Hasiera, horixe bera da! –moztu zion Haydéek– Jorge Oteiza euskal eskultoreak behin erran zuen Europa ez zela Pirinioetan bukatzen, hasten baizik.

—Hori da Haydée... eskultorea eta bere lana, bere emaitza... horixe bera da erran nahi nuena. Datu hauek guztiek hasiera marrazten dute, eskultorearen zirriborroa bezala, eta nik emaitza bilatzen dut, bukatutako eskultura, andere-zaldiarena hain zuzen.

—Bai, badakit zer erran nahi duzun, eta ulertzen dut erantzunak aurkitzeko daukazun irrika, baina pazientzia izan behar duzu Romain. Maiz, arras inportantea da ideiak ongi barneratzea, ongi mamitzea ondorio zehatz batera ailegatu ahal izateko. Argi izaki betiere, batzuetan ez direla ondorio positibo horiek ailegatuko agian. Hori ulertu behar duzu, barneratu, ez baduzu zure burua etsitu nahi behinik behin.

—Agian arrazoi duzu, barkatu. Beharbada apur bat lasaitu beharko nintzateke. Egia erran, nahikoa obsesionatuta nauka andere-zaldiaren afera honek guztiak. Usu ez dut bertze pentsamendurik buruan, ez dut lorik egiten, edo zeharo asaldatuta iratzartzen naiz gau erdian. Eta makurragoa dena, lanean gero eta arreta gutiago paratzen dut...

—Bon Romain, lasaitu zaitez pixka bat. Beharbada hori ez dizuete unibertsitatean irakasten baina harri eta erlikiekin ez obsesionatzen ikasi behar da...

Haydéek isilune txiki bat egin zuen jarraitu baino lehen.

—Ea ba, zer daukagu? Badakigu, edo hala uste dugu bederen, andere-zaldia egiteko erabili zen moldea Euskal Herriko hegoaldeko basamortuan agertu zela, trikuharri batean, ezta? Antza, gune hau, Euskal Herria edo euskal-akitaniar gunea, babestokia izan zen azken glaziazioan. Gero, labar-artearen datazioek, euskarazko jatorria duten toponimoen dentsitateak eta genetika ikerketek erakusten omen duten moduan, bi norabideko migrazioak eman ziren, iparraldera bat eta hegoaldera bertzea. Eta azkenik, mende edo milaka urte beranduago, ekialdetik lehenik eta iparraldetik gero, inbasio ezberdinak eman ziren...

—Bai, eta hortxe egon behar du gakoak nire ustez, inbasio hauen ondorioz bertako sinesmenek izandako garapenean, eta kultura berriaren sinesmen eta baloreekin izaniko uztarketan. Hori da nire ustez landu beharrekoa.

—Baliteke –onartu zion Haydéek xerra zati bat moztuz–, edo ez. Izan pazientzia Romain, izan pazientzia, bertze zer edo zer ere izan daiteke. Auskalo.

—Adibidez?

—Bada, ez dakit, bertze zer edo zer. Desilusiorik ez hartzeko erraten dizut, bertzerik gabe. Hipotesi bat baino gehiago izan beharko zenituzke nire ustez.

—Omarrek dio konstelazio bat irudika dezakeela andere-zaldiak.

—Batek daki, zergatik ez? Ez litzateke lehena izanen, ezta azkena ere ziurrenik. Begira Nazcako marrazkiak Peruko basamortuan... Lurrean egindako marrazki erraldoiak dira, berrehun metro baino gehiagoko irudiak: armiarma bat, musker bat, tximino bat, figura geometri-

koak, antropomorfoak... Dirudienez Era Vulgaris aurreko II. mendean egin zituen kultura aurre-kolonbiar batek eta soilik airetik antzeman daiteke zer diren. Horrela deskubritu zituzten hain zuzen ere, aireko fotografien bidez. Gaur egun oraindik ez dakite zertarako egin ziren ez eta zer diren ere. Batzuk erraten dute bide sakratuak direla, bertze batzuk estralurtarrendako aireportua, bertako antzinako biztanleen zodiakoa bertze batzuk, eta bertze hipotesi batek dio astronomia libururik handiena dela, ereiteko garaia edota eklipseak iragartzeko egutegi astronomikoa … Beraz, zuk ere, ez zenuke hipotesi bakarra baloratu beharko.

—Bon... –hasperen etsitua egin zuen Romainek, eta pentsakor gelditu zen.

*Leporatzeak beti darama gezurtxoren bat*

## Unikornio urdina

Gehienetan bezala, Romain jaiki zenerako, gosaria prest zegoen.

—*Bonjour* Romain –agurtu zion Kilianek umoretsu–, zer moduz?

Keinu mutu eta txiki batez erantzun zion Romainek, bekainak goitituz.

—Nola joan zuan atzo kazetari horrekin huen hitzordua?

—Ongi, ongi. Interesgarria. Nolanahi ere, pentsatzen hasia nauk iraganeko harrien artean ematen diagula eguna, baina gero, egungo errealitateaz ez gaituala jabetzen.

—Zer, bada?

—Ez, deus zehatzik, oro har ari nauk –isilune txiki bat egin zuen Romainek, pentsakor–. Ez zekiat zenbat denbora daramagun hemen, Chiapasen, eta atzo, ordu pare batean, hilabete hauetan baino dezente gehiago ezagutu diat zapatistei buruz. Ikaragarria duk jende horrek jasan diana, hori bai zapalketa, zentzu eta arlo guztietan!

—Ah hi, atzentzen nian! Atzo gauean Ilargi delako neska hori etorri zuan, erran zian ez ziala deus berezirik nahi, ondotik pasatzen omen zuala eta deitu egin ziala, bertzerik gabe. Telefono zenbaki bat utzi zian, nahi bahuen deitzeko.

Telefonoa apuntatua zegoen paper pusketa irrikaz hartu zuen Romainek, apur bat asaldaturik, urduri. Ez zeukan goizeko ordu horietan deitzeko asmorik, baina ez zion paperari begirik kentzen. Denbora batez, papertxoan iltzatuta geratu zitzaion begirada, ilusioz gainezka. Ordura artio, Romain eta Ilargi elkartuak ziren guztietan, Romainen iniziatibaren ondorioz izanak ziren, oraingoan aldiz, Ilargik emana zuen pausua. Eta horrek ongi sentiarazi zuen Romain.

Lanetik etorri eta berehala deitu zion Romainek, egun horretan bertan. La Iguana aterpetxeko telefonoa zen, eta lauzpabost minutu esperoan egon ondoren, Ilargiren ahots gozoa entzun zen hariaren bertze aldean. Aurreko aldietako ostatu berean finkatu zuten hitzordua, ilunabarrerako, monosilaboz betetako elkarrizketa motz batez.

***

Urduri zegoen Romain. Ilargik, edo Nefertitik, edo etorkin ilegalak, gero eta gehiago erakartzen zuen. Ezinegon bihurri bat sentitzen zuen estomakan, izan ere, ez zuen harroa izan nahi baina horrek zita bat ematen zuen. ZITA, letra larriz eta hizki guztiekin. *Biba hi!* zoriondu zioten Yves Mariek eta Pierrek.

Romainek La Iguanatik ateratzen ikusi zuen Ilargi, begiekin jarraitu zuen. Elkarri agurtuta, garagardo bana eskatu zuten. Romainek aipatu zion pixka bat harritu zela Kilianek kontatu ziolarik beraien apartamentutik igaro zela, harritu onerako, doike, eta ilusio pixka bat egin ziola. Egia erran, alimaleko ilusioa egin zion baina ez zuen dena aitortu behar.

—Harridura nirea –justifikatu zuen Ilargik bere burua–. Ezusteko galanta izan zen zu indigenen eskubideen aldeko mintegian ikustea. Ez dakit zertaz, baina ez zintudan gauza horietan imajinatzen. Solasaldia bukatu zelarik zuregana hurbiltzen saiatu nintzen baina jendearen artean desagertu zinen. Seko aspertu izan zinela eta bukatu bezain laster apartamentura joan izanen zinela pentsatu nuen, horregatik pasatu nintzen handik.

—Zu ere han zinen? Hau kasualitatea! Apenas ezagutzen dut indigenen mugimendua, eta kasualitatez bukatu nuen han. Afera da Haydée Mendozarekin egon behar nuela bertze kontu baten harira, eta mintegiaren tokian bertan geldituak ginen. Eta bai, apur bat ezezaguna egin zitzaidan giroa baina aspertu ez, inondik inora, nahikoa interesgarria iruditu zitzaidan.

—Sinesten dizut, bai, zaila da aspertzea Haydée Mendoza bezalako hizlariekin. Hiru-lau aldiz entzun diot nik eta disfrutatu egin dut denetan. Energia anitz transmititzen du, ez duzu uste? Nabari da barne-barnetik solastatzen dela, erraten duena benetan sentitzen duela. Bihotzak bereganatzeko gaitasuna dauka. Beharbada bere hitzetan sinesten duelako izanen da, ez politiko profesional ustel gehienak bezala, gauza bat erran eta, boterea eta dirua burutan, kontrakoa egiten dutela.

—Hizlari aparta da Haydée, bai. Nik ez dut sobera ezagutzen baina horretan arrazoia daukazu, solasean hasten denean bereganatzen zaitu nolabait.

Romainek bertze norbaitek bereganatzen zuela sentitzen zuen orduan ere, eta ez Haydée Mendozak preseski.

—Zer pena atzo elkartu ez izana –jarraitu zuen Romainek–, izan ere, ez ninduzun apartamentuan harrapatu Haydéerekin berarekin afaltzera joan nintzelako, eta dakidan pixarragatik, Haydéek anitz maite du Euskal Herria. Ziur nago bai zuk eta baita berak ere, elkar ezagutu eta gustura afalduko zenutela elkarrekin.

—Bon, bertze batean beharbada –arrapostu zuen Ilargik axolagabe–. Edozein modutan, atzo atzo zen, eta gaur gaur da. Atzo ez genuen elkarrekin topo egin eta gaur, aldiz, hemen gaude.

Romainek barne hotzikara txiki bat sentitu zuen, gero, adi-adi begiratu zion Ilargiri, eta neskaren azken komentario hori nola har zitekeen pentsatu zuen une batez. *Haydéerengandik jeloskor? Ezinezkoa duk* erran zuen Pierrek, *Haydée hire ama izan zitekeen, edo amatxi kasik.* Orduan, *hemen gaude horrekin*, zer erran nahi zuen? *Indirekta bat duk* erran zuen Yves Marie lotsagabeak, *indirekta zuzena. Edo, bertzerik gabe, gaiaz aldatzeko modu erdi filosofiko bat* erantzun zien Romainek gaztaroko lagunei. Nola edo hala, asmo lizunenak ari ziren iratzartzen Romainen baitan.

—Ikusten dudanez –Ilargik txantxa doinuaz–, uste nuena baino bizi interesgarriagoa daramazu. Apartamentutik lanera eta lanetik apartamentura baino ez zintudan imajinatzen, turismorik ez, bestarik ez...

*Ligatzen ari duk Romain* bat-batean Yves Marien ahotsak barre-algara batean. *Ez, hitaz trufatzen ari duk, bertzerik gabe* Pierren iritzia.

Ilargiren aurpegiaren mugimenduak, begiak, ahoa... Romainek ez zuen erreakzionatzen, blokeatuta zegoen. Kostatu egiten zitzaion entzuten zuena barneratzea. Dena zen galdera, zalantza, zalantza eta galdera. Lasaitzeko erra-

ten zion bere buruari behin eta berriz, eta denbora irabazi nahiz, hurrupa luze bat eman zion garagardoari.

—Konta iezadazu Romain –jarraitu zuen Ilargik solas egiteko gai bat bilatu nahian–, nola doa maien sekretuaren bilaketa? Aurkitu duzue zuen Rossetaren harria?

Romainek mutu jarraitu zuen tarte batez.

—Maien sekretua, Rossetaren harria, indusketak, lana, lana eta lana –erran zuen Romainek azkenean–. Badakizu zer? –irribarre konplize bat eskaini zion Ilargiri– Beti nire aferei buruz ari gara, baina hemen, misteriotsuki agertu eta desagertu egin dena zu zara, ez ni.

Barrez hasi zen Ilargi Romainen ateraldia entzutean. Azken minutuetan bere baitan bildua egona zen Romain, kezkatua-edo, barne eztabaidan. Eta orain, bat-batean, erasoan zetorren. Defentsarik onena omen.

—Bai, bai... egin barre, baina ez zara hemendik CIAren galderak erantzun gabe joanen –erran zuen Romainek txantxetan eskuineko eskua Ilargiren aurpegiaren parean paratuz pelikuletako galdeketetako fokoa imitatuz.

—Ah ze beldurra! –Ilargik isekari– Torturatu beharko nauzu hitz egin dezadan –segitu zuen txantxa neskak, eta barre egin zuten tarte batez– Ados, ados... agian ez dizut egia guztia erran orain artio, hori onartzen dizut, baina misteriotsua deitzearena gehiegitxo da, ez? –Ilargik doinua lasaitu zuen apur bat solasean jarraitzeko– Komunitate indigenetan brigadista naiz. Hasieran ez nizun erran gobernuak eta migrazio poliziak jazartzen gaituztelako, batez ere San Cristobalen. Horrexegatik ez nizun hasieratik erran, batek daki nor zinen, are gehiago gibeletik zelatan jarraitzen nauen bat...

Hau entzutean erabat moztuta gelditu zen Romain. Beraz, karrikaz karrika La Iguanaraino segitu zuen lehenbiziko egun hartan ikusi egin zuen gibeletik zebilkiola. *Azeriak artea hedatu eta bere buztana hartu* kantatu zioten koroan Pierrek eta Yves Mariek isekari.

—Ez paratu aurpegi hori Romain. Zorionez, eta bion onerako, ez zinen ezkutuko polizia –irri egin zuen Ilargik.

Romainek irri lotsati batez erantzun zion.

—Beraz, ez zaude oporretan? Zer, ejertzito zapatistan brigadista?

—Ez, ez, ez... ez da hori. Ez dakit zer ulertu duzun, baina ez, ez nago inongo ejertzitotan. Oporretan, bai eta ez. Berez, ez nago oporretan, baina turista bisa daukat, eta egia da hemengo parajeak eta jendea ezagutzeko aukera dudala.

—Ez dakit, Kiliani beti aditu izan diot bere aitatxi irlandarra, amaren aldetik, Espainiako gerra zibilean egon zela brigadista, eta Dublinetik Espainiako errepublikaren aldeko frontera joan omen zen. Bere hitzetan, kapitalista eta faxisten kontra borroka egitera. Harro-harro erraten omen zuen beti berak egindako tiro guztiak Dublineko kapitalista eta burujabeen kontra izan zirela.

—Ez, ez... hau bertze gauza bat da. Ohore handia litzateke horrelako zerbait egitea baina ez, ni ez naiz gisa horretakoa. Ni, edo gu, euskal brigadistok, zapatisten komunitateetara joaten gara, nazioarteko begirale moduan edo. Gure presentziak, jatorri ezberdineko nazioarteko presentziak, militarren eta paramilitarren erasoak ekiditea du helburu. Horrez gain, militarren konboien mugimenduak kontrolatzen ditugu, eraso errepresiboak salatzeko. Horrela, Acteal komunitatean gertatu zen sarraskien antzekoak ekidin egiten dira. Menturaz behinik behin. Edo bertzenaz, inguruan dabiltzan militarren konboien identifikazioak geroko ikerketa lagun dezake bederen.

—*Putain*, arriskutsua dirudi, ez? Giza ezkutu bat bezala zarete azken finean...

—Bai, guti goiti-beheiti. Dena dela, eta nik dakidala, tentsio handiko momentuak eman izan dira eta arazo bat edo bertze suerta daiteke, baina oro har, bai militarrek bai eta paramilitarrek ere, errespetatu egiten gaituzte.

—Zer daukazue, agiri bereziren bat?

—Ez, hori da pitokeria, turista bisarekin egoten garela, eta ez nazioarteko begiraleen agiriarekin, eta hortik datoz gure arazo legal gehienak. Turista moduan ezin gara bertako afera politikoetan sartu, eta horrelako saltsetan harrapatzen bagaituzte herrialdetik kanporatuak izaten gara, bueltatzeko debekua ezarriz anitzetan. Guatemalara nindoala erran nizunean komunitate zapatista batean egon nintzen egiazki. Eta Tuxtlaren aldian, berdin.

—*Hou la la!* –egin zuen irri Romainek– Hasieran, ez zenuela egia guztia kontatzen erran duzu, orain, gezur txikiak dira... Ez dakit zer pentsatu –Romainek txantxa doinuarekin jarraituz–. Beraz, erran daiteke nolabaiteko turismo iraultzailea egiten duzula, ez?

—Begira, behin, La realidad komunitatean egin ziren topaketetan, galdera bera egin zion kazetari batek Marcos komandante-ordeari, eta berak arrapostu zion euria, polizia, lokatza eta abar ikustea bertzerik ez zela egin behar horra ez zela turistarik joaten egiaztatzeko. Horra soldaduak edo lagunak heltzen zirela soilik.

»Zentzu berean –neskak zirikan–, ea arkeologoak zareten edo, bertzerik gabe, turismo arkeologikoa egiten duzuen galde niezazukeen, ez?

Romainek burua mugitu zuen, Ilargiri arrazoia emanez.

—Eta, errepideko kaputxadunen kooperatiban, brigadista lanetan zinen?

Minutu batzuk lehenago Romaini gertatu bezala, moztuta gelditu zen Ilargi.

—Karajo, nola dakizu plantoian egon nintzela?

—Ez dakit San Cristobaletik Palenquera joan ginen egunean konturatu zinen baina bidegurutze horretatik pasatzen da bidea. Ikusi zintudan lehenbiziko aldian hor izan zen, autobusetik, kaputxadun horiekin guztiekin kalakan. Beharbada horregatik egin zitzaidan deigarria. Gero, San

Cristobalen ikusi zintudanean, zure gibeletik abiatu nintzen, ia konturatu gabe eta jakin-minak jota.

—Karajo berriz ere! Azkenean pentsatu beharko dut benetan CIAko agentea zarela –barre egin zuen Ilargik–. Hori Centro de Comercio el Nuevo Amanecer del Arco Iris kooperatiba da, errebeldian dauden zazpi komunitate autonomoek ejertzito federalaren kaserna zahar batean martxan paratutakoa. Tzeltalak, Tojolabalak eta Tzotzilak dira, eta duela hilabete batzuk PRD zein PRI alderdietako nekazari batzuk eraso egin zioten zapatisten kooperatibari, dendariak kolpatuz, salgaiak errepidetik barreiatuz eta muralak ezabatuz. Azkenean, eraso gehiago ekiditeko, txandakako segurtasunezko kordoia osatzea erabaki zuten komunitate zapatistek. Beraiek plantoia deitzen diote, eta arazo gunea izan zitekeenez, hara joatea egokitu zitzaidan.

—Egun guztia hor, errepide bazterrean?

—Bon, suertatzen dena. Komunitate bakoitza ezberdina da. Zaintza bai, hori komunitate guztietan egiten da, militarren mugimenduak kontrolatzeko eta abar. Tokian tokiko beharren araberakoa da. Gure laguntza politikoa da, ez soroak landatzekoa. Lagungarriago gatzaizkie beraien egoeraren inguruan gure herrialdeetan lan politikoa eginez ezenez beraien artoa landatzen. Euskal brigadiston kasuan errate baterako, helburu nagusietako bat da hemen ezagututako guztia, ejertzitoaren errepresioa adibidez, edota indigenen eskubideen inguruko guztia, Euskal Herrian jendarteratzea itzulitakoan.

Jakin gabe zertan, pentsakor geratu zen Romain.

Bi gazteak mutu gelditu zirelarik, Mambo-Tango irratiko musika nabarmendu zen ostatuko bozgorailuetan.

«*Mi unicornio azul ayer se me perdió,*
*pastando lo deje y desapareció.*
*Cualquier información bien la voy a pagar.*

*Las flores que dejó no me han querido hablar.*» [1]

—Oihanbarren zer da, zure abizena? –galdetu zion Romainek solastatzeko gai bila.

—Oihanbarren?

—Lehengoan, zure emaila jasotzean Mexiko DFtik bueltan, Ilargi Oihanbarrenen izenean zetorrela ikusi nuen...

—Ah, horregatik diozu? Oihanbarren nire familiaren etxearen izena da. Otsagin, nire herrian, bon, eta Euskal Herriko herri gehienetan nik uste, etxe bakoitzak izen bat dauka eta batzuetan, izena edo abizenarengatik baino, etxearen izenaren arabera ezagutzen da jendea. Abizena erran beharrean, etxearen izena erraten da pertsona zehazteko, edo bertze batzuetan, etxearen izena paratzen zaio zuzenean, goitizen moduan.

«*Mi unicornio azul ayer se me perdió,*
*no sé si se me fue, no sé si se extravío,*
*y yo no tengo más que un unicornio azul.*»[2]

—Kantu hau pila bat maite dut –erran zuen Ilargik gaia zeharo aldatuz.

—Nor da?

—Silvio Rodriguez. Kubatarra.

—Ez dut ezagutzen...

—Entzun, entzun –moztu zion Ilargik.

«*Mi unicornio azul ayer se me perdió,*

*y puede parecer acaso una obsesión,*

(1) Nire adarbakar urdina atzo galdu zitzaidan, bazkatuz utzi nuen eta desagertu zen. Edozein informazio ongi ordainduko dut, utzi zituen loreek ez didate solastatu nahi izan.

(2) Nire adarbakar urdina atzo galdu zitzaidan, ez dakit ihes egin zidan, ez dakit galdu zen, eta nik adarbakar urdin bat bertzerik ez dut.

*pero no tengo más que un unicornio azul*
*y aunque tuviera dos yo solo quiero aquél.»* [3]

—*Unicornio azul…* –erran zuen Romainek bekainak goitituz eta pentsakor– Zer erran nahi du horrekin?

—Zuk zer ulertzen duzu? –neskak burlaizean.

—Ez dakit, imajinatzen dut erranahi poetikoa izanen duela, ez? Poetakeriaren bat edo zerbaiten metafora izanen da adarbakar urdina, ez da hala?

—Hortxe dago gakoa Romain, Silvio Rodriguezek ez du inoiz erran zer den bilatzen duen adarbakar urdin hori. Kantuak aldiz, alimaleko arrakasta izan zuen, baita jendearengan elkartasun sentimendua iratzartzeko gaitasuna ere. Bertzetik, pertsona bakoitzak berea bilatzen du, baita batzuk aurkitu dutela sinetsi ere.

Romainek ez zion begirik kentzen Ilargiri. Brigadistari. Edo Nefertiti atzerritar ilegalari. Edo... bere adarbakar urdinari?

*Zirrikitu bakarrak hondora dezake itsasontzia*

## Azken burua

Protokolo ekitaldiaren ostean giroa erlaxatu egin zen. Espero zitekeen bezala, ongi joan zen dena, ezustekorik gabe. Presidentearen kotxeak Mexiko DFko karriketan barna egin zuen aitzina Isabel la Catolica hoteleraino. Konboi presidentziala hoteleko sarrera nagusira ailegatu zelarik alde egin zuten hura zaintzen zuten poliziaren bi

(3) Nire adarbakar urdina atzo galdu zitzaidan, eta akaso obsesioa eman dezake, baina adarbakar urdin bat bertzerik ez dut, eta bi izanez gero ere nik hura baino ez dut nahi.

kotxeek. Ordura artio labezomorroak ostikoka kanporatzen ziharduen langilea izan ezik, ez zen inor gehiago ageri hoteleko harrera tokian.

—Arratsalde on presidente jauna.

—Arratsalde on. Logelaren giltza nahiko nuke.

—Bai, tori. Ah, presidente jauna, pertsona bat daukazu zain irakurketarako aretoan.

Irri zabal bat agertu zen ezezagunaren aurpegian presidentea aretoaren sarreraraino hurbildu zelarik. Presidenteari baina, ez zitzaion ezaguna egin. Ezezagunak keinu ttipi bat egitearekin batera, bi gizonezko gehiago atera ziren ate gibeleko zoko ilunetik, eta, presidentearen bizkartzainei tiro bana emanik, pistola bat paratu zioten buruan presidenteari berari.

—Ohore handia da zu ezagutzea presidente jauna –erran zuen Apostoluak ironiaz–. Eta orain, axola ez bazaizu, paseo txiki bat emanen dugu.

Hoteleko bezero batek abisatu zuen polizia. Hau ailegatu zenerako, lurrean odolustuta zeuden presidentearen bi bizkartzainak nahiz harrerako langilea.

***

—Omar, enteratu zara? –galdetu zuen ahotsak telefonoaren bertze aldetik– Entzun al dituzu berriak?

—Nor da?

—Haydée naiz. DFn zaude? La Jornadako erredakziora etorri behar duzu, lehenbailehen.

***

—Taxian entzun dut. Nola izan da?

—Hotelean izan da, Palacio Nacionaleko arratsaldeko ekitaldiaren ondotik. Dirudienez, hotelean zeuden espe-

roan. Bizkartzainak eta hoteleko langile bat hil eta gero, Evo Morales bahitu dute.

—*No mames güey, no mames...* –gertatutakoa ezin sinetsiz zegoen Omar.

—Momentuz ez du inork bahiketa bere gain hartu, baina bihozkada bat daukat...

—Estatu Batuak? CIA? Gasaren multinazionalak?

—Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua –erantzun zuen Haydéek serio. Aulki bat hartu eta eskuak buruan, pentsakor gelditu zen, kezkati– Ia segur nago ero katoliko horiek daudela honen guztiaren gibelean.

Omarrek kazetaria behatu zuen.

—Danubioko erriberako Cerdanovako nekropoliko pentsalarietako bat dirudizu.

—Horixe bada, utzi pentsatzen –Haydéek zorrotz.

Aulkitik jaiki, eta leihoko kristala begiradarekin zeharkatuz, urrunean pausatu zituen bere pentsamenduak, ilunabarrak estaltzen zituen hiriko eraikin urrunetan.

—Mundua heresiatik salbatu behar zutela zioten –Haydéek ozenki, pentsakor–. Badakigu orain artio hiru herexen kaskezurrak ebatsi dituztela: Tupac Amaru Inkarena, Pakal errege maiarena eta Moctezuma errege aztekarena... Dena bere ordenara itzultzeaz solastatzen dira, eta ziklo heretikoa ixteaz... hori guztia Pablo III.ak idatzitako bulda batean oinarriturik, zeinenean zigor eredugarriak emateaz hitz egiten den...

Jarraitu baino lehen, isilune txiki bat egin zuen Haydéek.

—Evo Moralesek, Boliviako presidenteak, hori dena eta gehiago ordezkatzen du: indigena, sozialista, iraultzailea... eta boterean. Catholic Golden Eagles-Gurutzearen Mendekua erakundearentzat Evo Moralesek heresia, desordena eta mehatxua ordezkatzen ditu.

Omarrek arretaz jarraitzen zuen Haydéeren arrazoiketa.

—1542. urtean idatzitako aita sainduaren bulda batean oinarritzen dute beren ekinbidea –segitu zuen Haydéek ozenki–, jende hau konkistaren garaian bizi da oraindik, bortzehun urte gibelago. Ezin dute onartu eliza katoliko ahul bat, ezin dute onartu indigenek beren kultura eta eskubideak garatzea, are gutiago indigena bat presidente izatea. Beraientzat katolikoa ez dena herejea da eta onartzen ahal den ordena bakarra zuriak agintean eta indigenak agindu horiek betetzen dutena da.

—Bai… ez nuke Evo Moralesen tokian egon nahiko –erran zuen Omarrek kezkaturik, irribarre ahul eta bortxatu batez.

—Ez, ez, nik ere ez. Argi utzi dute beraien asmo ankerrak gauzatzeko garbitu behar diren pertsona guztiak garbitzeko prest daudela.

—Bai? Hilko dutela uste al duzu?

—Uste ez, ziur nago –erantzun zion Haydéek determinazioz–. Ziklo heretikoa ixteaz solastatzen zirelarik Evo Moralesen sakrifizioaz solastatzen zirelakoan nago. Noiz eta non da orain kontua...

Isildu egin ziren biak. Kezkaturik. Pentsakor.

—Hori da! –egin zuen bat-batean oihu Haydéek besoak goitituz– Katedraleko hitzorduan Apostoluak erran zuen gauaren argiaren bidea gorriz tindatu beharko zela azkenekoz ziklo heretikoa betiko itxi dadin.

—Gauaren argia... ilargia. Eta ilargiaren bidea?

Haydéek eta Omarrek begi arranpaloekin begiratu zioten elkarri, gauza bera ari ziren pentsatzen.

—Hartu zure gauzak, nik gidatuko dut.

*Kearen beldurrez surat ihes*

## Teotihuacan

Ilargia bere zenitera heltzear zegoela ailegatu ziren Haydée eta Omar Teotihuacanera, kazetariaren kotxe zaharrean. Kutsadura murrizte aldera, egun batzuetan matrikulan zenbaki bikoitiak duten kotxeak ibil daitezke soilik Mexiko DFn, eta bertze egun batzuetan matrikula bakoitia duten kotxeak. Oztopo hori gainditzeko eta behar zuen guztietan kazetari lana egin ahal izateko, bi kotxe zituen Haydéek, matrikula bikoitiduna bat eta matrikula bakoitiduna bertzea. Biak zaharrak.

Teotihuacaneko parking nagusira sartu baino lehen itzali zituzten kotxeko argiak, azken metroak ilargi betearen argitasunarekin eginez. Eguzkiaren piramidea dago parkingetik hurbilen, eta oinez eta kontu handiz gerturatu ziren Omar eta Haydée. Piramide hau inguratuta, berehala jabetu ziren argiak zeudela Hilen Etorbidea ixten duen Ilargiaren piramidearen gainaldean. Eraikin ezberdinen itzalpean egin zuten aitzina piramide erraldoiaren oinarriraino.

—Segi zuk alde horretatik –erran zuen Haydéek ezkerrera seinalatuz–, ni hemendik joanen naiz. Ziurtatu behar dugu ez dagoela inor gehiago. Gero, gibeletik igoko gara.

Buruko mugimendu mutu batez erantzun zion Omarrek, *ados*.

Ilargiaren piramidearen gibeleko espaloi handietatik goiti hasi zirelarik, Haydéek pistola atera zuen poltsotik. Omarrek aho bete hortz begiratu zion.

—Ez begiratu horrela Omar, kazetari batek bere burua babestu beharra du DFn, are gehiago emakumea izaki, ez duzu uste?

Tutik erran gabe, arrazoi mutua eman zion Omarrek berriro.

Piramidearen goitiko aldean imajinatu zutena aurkitu zuten guti goiti-beheiti. Azken plataformaren ertzetan pebetero batzuk sutan, eta erdi-erdian, aldare moduan paratutako mahaiaren gainean, Evo Morales Boliviako presidentea hanketatik eta besoetatik lotuta. Pelikuletan bezala, zapi batez zeukan ahoa estalia, oihurik egin ez zezan.

Lau pertsona zeuden osotara, Espainiako hegoaldean aste santuko prozesioetan erabiltzen diren jantzien parekoekin: txapel puntadunak, aurpegi estaliak eta tunika luzeekin, Ku Klux Klanekoen antzera. Hiru morez, beltzez laugarrena. Itxuraz, azken honek zuzentzen zuen sakrifizioa.

Evo Morales lotuta zegoen mahaiaren ondoan pare bat pebetero piztu zituzten. Gero, morez zihoazen hirurek hiru kaskezur atera zituzten oihalezko zaku beltz batetik.

—Begira –xuxurlatu zion Omarrek Haydéeri hiru kaskezurrak ikustean.

Jantzi beltza zeramana ozenki hasi zen errezatzen, latinez, larruzko zorro batetik nabalatzar bat ateratzearekin batera. Bertzeak, kaskezur bana eskutan, bahituaren aitzinean paratu ziren nolabaiteko formazio linealean. Beltzezkoak errezitatzen jarraitu zuen, ozenki, asaldatu antzean.

—Apostolua da –erran zuen Haydéek katedraleko aitorlekuko ahots bera ezagutzean.

Apostoluaren ahots sakonak latinezko errezoz betetzen zuen airea, eta Hilen Etorbidean barna hedatzen ziren otoitzak. Errezatu bidenabar, mugitzen hasi zen Apostolua, Evo Moralesen parean kokatu artio. Nabalatzarraren ertzak distira egiten zuen ilargiaren argiarekin. Ahoko zapiak Evoren orroak itotzen zituen eta lokarriek gorputzaren aieneak bihurritu. Evo Moralesek zerura begiratu zuen, bere erailketaren lekuko ez izateko ahaleginetan, inguratzen zuen guztia ezabatu nahiz. Gain-gainean ilargia ikusi zuen, piramidearen bertizearekin lerrokatuta. Hori seinalea iza-

nen balitz bezala, handik ez zela bizirik aterako pentsatu zuen Evok. Listua irentsi zuen.

Morez zihoazen hirurek Ilargi beterantz zuzendu zituzten Tupac Amaru, Pakal eta Moctezumaren kaskezurrak, Apostoluaren otoitzak errepikatuz. Zerurantz goititu zuen Apostoluak nabalatzarra ere, eta ilargi betearen argiak nabalan distira eginik, Evo itsutu zuen istant batez.

Haydéek begi-keinua egin zion Omarri.

—Aski da! –egin zuen oihu Haydéek pistola Apostoluaren buruan paratuz. Omarrek nabalatzarra kendu zion– Aski da! Ez zaitezte mugitu!

—Gabon Mendoza andereñoa –agurtu zuen Apostoluak ahots lasaiaz eta harridurarik erakutsi gabe.

—Ez gabon ez ezer –kazetariak sugegorriaren begiradaz erantzun–. Ez mugitu edo hementxe bertan garbituko haut... ez mugitzeko demonio!

—Ikusten dudanaren arabera –Apostoluak–, gutietsi egin zintudan katedralean elkar ezagutu genuen zorioneko egun hartan.

—Ixo! Edo hik erran bezala, gaueko argiaren bidea gorriz tindatuko duk, bai, baina hire odolez!

—Bon, sortzen den orok hiltzea zor –Apostoluak axolagabe.

Apostoluaren ahotsak ez zuen larritasunik adierazten, ezkutuko karta bat balu bezala edo. Horrek apur bat urduritu zuen Haydée. Beharbada, bazekien Haydée ez zela hiltzeko gai izanen. Edo bai?

Buruko keinu batez, Evo Morales lotzen zuten sokak mozteko adierazi zion Haydéek Omarri. Luze gabe, Boliviako presidentearen bihotza atera behar zuen nabalak berak eman zion askatasuna, bere lokarriak di-da moztuz. Ziztu bizian goititu zen Evo Morales aldaretik, eskumuturrak eskuekin igurtziz. Bihotza punpaka zeukan.

—Sartu itzazue kaskezurrak zaku beltz horretan –agindu zien Haydéek parean zituen hiru kaputxadunei pistola Apostoluaren burutik aldendu gabe.

Kaskezurren zakua bilduta, morez zihoazen hirurak lotu zituzten ordura artio Evo Morales lotzen zuten soka puskekin, eta, Evok nabalatzarrarekin hurbiletik zaindurik, Omarrek Apostolua lotu zuen azkenekoz. Gero, eta gibelera begiratu gabe, lauhazka handian abiatu ziren kotxera Haydée Mendoza, Omar Guzman eta Evo Morales Boliviako presidentea.

Evo Moralesek ez zuen deus erraten eta bere sakrifizioa fustratu zuten bi ezezagun horien ondoan egiten zuen korrika. Alabaina, bere begi beltz biribilek urduritasuna, beldurra, amorrua, alaitasuna, pena, sorpresa... adierazten zuten.

***

Boliviako presidentearen harridura oraindik gehiago handitu egin zen baieztatu zuenean bere bi askatzaileak ez zirela poliziak.

—Omar Guzman nauzu, UNAMeko Historia irakaslea. Bera Haydée Mendoza da, La Jornadako kazetaria –aurkezpenak egin zituen Omarrek behin Mexiko DFrako bidea harturik apur bat lasaitu zirelarik–. Poliziari deitu behar diogu –proposatu zuen irakasleak–, gertatutako guztia azaldu eta deabru katoliko horiek lotuta utzi ditugun tokiaren berri emateko.

—Ez dakit Omar. Deabru katoliko horiek, zuk deitu bezala, gauzak sobera aise egiten dituztela iruditzen zait. Kaskezurren ebasketetan ikerketek ez dute aurrera egin, eta gero, begira ze aise bahitu dute herrialde bateko presidentea... Lau ero baino zerbait gehiago direla iruditzen zait. Goi mailako jendearen laguntza eduki behar dute, ez duzu uste? Bertzenaz, nola uler daiteke gu bezalako bi giza-

jok afera guztia konpondu izana poliziari ezinezkoa egin zaiolarik? Oraindik ez dakigu nor den Pater delako hori, eta, Mexikoko polizia ezagututa, ez nintzateke batere harrituko goi kargu ustel bat tartean egotea. Ongi pentsatu behar ditugu eman beharreko urratsak...

Evo Morales Mexiko DFko Boliviako enbaxadan utziko zuten, bere gobernuaren babespean, presidentearen osotasun fisikoa eta segurtasuna ziurtatzeko era bakarra zelakoan. Kaskezurrak aldiz, afera makabro horretan goi mailako agintari ustelik ez zegoela ziurtatu artio, ez zituztela agintarien esku utziko erabaki zuten.

—Deitu poliziari ero horiek non lotu ditugun errateko bederen –tematu zen Omar.

—Ados, baina Apostoluak eta enparauek aurpegiak ikusi dizkigute, eta dagoeneko badakite nor garen. Beraz, segurtasun neurri zenbait hartu beharko ditugu hau guztia argitu artean, bai guretako bai eta kaskezurrak gordetzeko ere. Ezin gara inongo poliziaz fida, are gutiago Mexikokoaz.

Omarrek, ideien bonbilla pizturik, bekainak goititu zituen.

—Badakit zer egin behar dugun, baina unibertsitatetik pasatu behar dugu lehenik.

*Amodioak begiak itsu*

## Sentsazio arkeologikoa

—*Salut* Romain.

—*Salut* Kilian!

—Pozik hago, ez?

—Bon, bizia bizitzeko zegok, ez duk uste?

—Hala duk, bai, hala duk.

—Gainera, hi haiz beti serioegi nauala erraten didaana. Bada, gaur kontent nagok, ederki zoak eguna...

—*Magnifique* hi, pozten nauk. Dena dela, utzidak asmatzen, Ilargi horrek deitu dik, ezta?

—Karajo, hainbertze nabari zaidak?

—*Karajo*? Nondik atera duk hitz hori?

—Ez zekiat, nonbait aditu diat baina orain ez nauk gogoratzen –erantzun zuen Romainek konplizitatezko irri gaizto eta begi keinu batez.

—Ongi duk, hi, ongi duk, *eta a tout à l'heure!* –agurtu zuen Kilianek ironiaz Romain apartamentutik erdi jauzika ateratzen zela hitza ahoan utzita. *Indar handi idiak, areago titiak* pentsatu zuen umoretsu.

***

*Biba hi!*, Yves Marie eta Pierren animoen artean egin zuen Romainek Katedralerainoko bidea. Ilargik deitu zuelarik betiko ostatuan gelditzeko proposatu zion Romainek, baina Ilargik, San Cristobal de las Casaseko katedraleko atean geratzeko erran zuen. Romainek bazekien, edo imajinatzen zuen, ez zirela mezara sartuko, eta neskak prestatutako sorpresa asmatu nahian egin zuen bide guztia, pozaren pozez.

Finkatutako ordua baino bospasei minutu lehenago ailegatu zen Romain. Han zegoen Ilargi, Romaini garunean grabatu zitzaion irribarre batekin. *Hori duk hori!* erran zuen Yves Mariek barre-algara batean Ilargik Romain agurtu zuenean ezpainetan muxu motz bat emanez. Gero, nora zihoazen zehaztu gabe, karrikan beheiti abiatu ziren.

San Cristobal de las Casaseko alde hori ez zuela apenas ezagutzen konturatu zen Romain. Hiria ez da handia baina katedralaren ondoan dagoen azoka, zokaloaren inguruak

eta Palenquerako autobusa hartzen den eremua baino ez zituela ezagutzen ohartu zen Romain. Katedraletik beheiti ordea, deus ez. Ez zekien nora joan behar zuten baina berehala ikusi zuen jende gehiago zihoala norabide berean. *Zapatisten aldeko manifestazio batera* pentsatu zuen.

—Papantlako hegalariak –argitu zion Ilargik azkenean San Cristobal kanpoko aldeko zelai zabal batera ailegatu zirelarik. Zelai erdian 30 metroko zutoina goratzen zen zerurantz eta ingurua jendez lepo ari zen betetzen.

Zelaiaren alde batean eseri ziren, indigena eta turista gehiagorekin batera.

Kolore biziz jantzitako bortz lagunek zutoinerako bidea hartu zutelarik, deiadar zaratatsu bat hedatu zen lau haizetara txalo eta oihu artean. Hegalariek zerbait utzi zuten zutoinaren oinarrian, landare eta intsentsu batzuk edo. Romain eta Ilargi eserita zeuden lekutik ez zen sobera argi ikusten baina ekitaldi hasi aurreko errito edo eskaintza modukoa zirudien.

Zutoinaren goranzko bidea hartu zuten azkenean bortz lagunek.

Bortzetatik zaharrena zutoinaren gainaldeko plataforma txikian eseri zen, eta danbor ttiki bati eragiten hasi zen erritmo sinkopatu batez, zeremoniatsu. *Kaporala* zen, buruzagia, errituaren arduraduna.

—Orain txirula jotzen hasiko da –komentatu zuen bi gazteen ondoan zegoen zahar batek.

Eta txirula jotzen hasi zen *Kaporala.* Romainek eta Ilargik begi-bazterraz begiratu zioten zaharrari une batez. Honi, gorantz begira egon arren, sekulako emozioa antzeman ziezaiokeen begien distiran. Nahiz eta beraien artean ez komentatu, zimurrez eta emozioz betetako zahar horren gibelean *Kaporal* izandako gizona zegoela pentsatu zuten biek ala biek.

Txirularekin batera buruz beheitiko *hegaldia* hasi zuten lau hegalariek, oinetatik eta gerritik lotuta. Minutu batzuk lehenago milaka ikusleren oihartzuna zena isiltasun larri eta itogarri bilakatu zen, eta txirularen zein danborraren soinuak bete zuen milaka ahotsek utzitako hutsunea.

—Zinez liluragarria –murmurikatu zuen zaharrak. Gero, bi gazteen begiradari erantzunez, solasean jarraitu zuen–. Danborrak jainkoaren ahotsa irudikatzen du, txirulak berriz, txorien kantarena. Musika eta dantza horien bitartez haizearen, trumoiaren, euriaren, uztaren eta basoetako jainkoekin harremanetan jartzen dira...

Romainek begiak itxi zituen une batez, txistuaren txioak eta danborraren erritmoak buru barne-barnean sentituz etengabeko errebotean. Istant batez, ezaguna egin zitzaion sentsazio hori, eta hotzikara batek aldez alde zeharkatu zuen andere-zaldiaren kobazuloko ametsa gogoratzean. Izerdi hotz batek hartu zuen.

—Begira Romain –Ilargiren eskua belaunean sentitzearekin batera entzun zituen neskaren hitzok.

Begiak ireki eta lau hegalariak ikusi zituen, zutoinaren inguruan buruz beheiti jira-biraka, besoak zabal-zabalik.

—*Txori-gizonak* dira –zaharrak erran–, belaunaldiz belaunaldi mantentzen da ohitura. Gehienak mexikarrak dira, baina berez, Mexikoko erdialdeko ipar-mendebaldetik Nikaraguarainoko erritua da, *Mayab'* kulturari lotutakoa hain zuzen.

—Mayab'? –galdetu zuen Ilargik.

—Mayab' maien benetako izena da, gure herriaren izena –azaldu zuen zaharrak–. *May*-k pentsamendua erran nahi du, eta *ab*-k, hamaka. Horrela, Mayab' herria pentsamendua mugimenduan duen herria da.

—Karajo –erran zuen Ilargik aho bete hortz–. Zuk bazenekien hori, Romain?

*Ez* motz batez erantzun zuen gazte arkeologoak, lau hegalariengandik begirik kendu gabe. Munduan bakar-bakarrik egotearen sentsazioa zeukan.

Denbora tarte batez, ez zuen inork solasik egin.

—Eta zuk –galdetu zion azkenean Ilargik zaharrari–, parte hartu duzu noizbait?

—Bai, aspaldi –oroitzapenetan murgilduta, emozioaren distira piztu zen berriro zaharraren begietan–. Beharbada berrogeita hamar urte baino gehiago igaro dira jada, zutoina egiteko zuhaitz enborra azkenekoz erabili zelarik hain zuzen, eta horixe izan zen nire azken erritua. *Tsakáe kiwi* izeneko zuhaitza erabili izan da betidanik, baina zuhaitz mota hau desagertzear dagoenez, altzairuzko zutoina erabiltzen hasi zen. Zutoinaren aldaketarekin batera *Kaporal* aldaketa eman zen ere, eta geroztik, hemen nauzue, urrunetik ikusten, turista baten moduan.

Oraingoan tristura baino ez zuen antzeman Ilargik zaharraren begien distiran.

—Oraindik gordetzen dut eskuz egindako jantzia –bukatu zuen gizonak.

—Benetan ikusgarria da ekitaldia –erran zuen Ilargik nondik atera sobera ongi ez zekiela–, zer irudikatzen du?

—Gaur egun deus ez –zaharrak penaz–. Gaur egun zaindarien jaietan edo turistentzat baino ez da egiten, baina lehen, lehen bazuen bere indarra, bere garrantzia. Kondairak dioenez, duela mila urte baino gehiago izandako lehortean du jatorria –hitz horiek entzutean, Romainek begi arranpaloekin begiratu zion zaharrari, Palenque hiri maiaren abandonua burutan–. Agure jakintsu talde batek bortz gazte kastu igorri zituen mendira, *Xipe Totec* emankortasunaren jainkoa gurtzeko. Modu horretan, lehortea uxatu eta beren uztentzat euria ekartzeko asmoz. Lagun kopurua mantendu da gaur artio, baina mendian egin beharrean herri eta hirietan egiten da orain eta erran daiteke garai hartako erritu arriskutsuaren oinordekoa dela hau.

—Baina hau ere arriskutsua da...

—Bai, arrazoi duzu, eta horrela irudikatzen dute prakak eta atorra estaltzen dituzten oihal gorriek, odolaren kolorea alegia. Begira, zutoina Ama-lurra eta zeruko jainkotasunaren arteko ardatza da, eta lau hegalariek euri zaparrada imitatzen dute. Jantzien bordatu alaiek euria hasten delarik haziko diren loreak irudikatzen dituzte eta, ikus dezakezuenez, ispiluekin apaindurik daramate buruko txapela, eguzkia, ortzadarra eta loreak irudikatzeko eta gogoratzeko.

Ilargik eta Romainek emeki-emeki lurrerantz jira-biraka eta buruz beheiti zihoazen lau hegalariak behatzen zituzten, zaharrak azaltzen zituen detaile eta bitxikeria guztiak bilatuz.

—Bat emakumea da! –egin zuen oihu Ilargik.

—Bai, hala da –baieztatu zuen zaharrak harro–. Ramona da, nire alaba.

Ilargik xamurtasunez begiratu zion zaharrari, eta gizonaren begien distirak lehenago emozioa eta tristura adierazten bazituen ere, oraingoan harrotasuna zen distira horrek erakusten zuen gauza bakarra.

—Ausarta behar du izan horrelako erritu arriskutsuan parte hartzeko –gozatu zituen Ilargik zaharraren belarriak.

—Hala da, bai, emakume ausarta benetan. Sutsua. Dena dela, erritua gutienekoa da, aise adore gehiago behar izan zuen komunitatean proposatu zuenean emakumeen parte hartzea errituan. Usadioak eta ohiturek gizonezkoak izan behar zutela zioten batzuk, debekua inon idatzita egon ez arren. Gaur egun aldiz, normaltasun osoz ikusten da emakumezkoak *txori-gizon* izatea, eta hiru hamarkada badira dagoeneko hala dela.

Ilargi bere Baztango lehengusinaz gogoratu zen, nola Baztango *Cro-Magnon* batzuk neskak mutil-dantzetan parte hartzearen kontra zeuden, nola ez zieten bere lehen-

gusinari eta bertze neskei plazara dantzatzera sartzen uzten, edo nola ateratzen ziren plazatik *Cro-Magnon* horietako batzuk neskak sartzen zirelarik, eta, alkateren baten konplizitatearekin, nola mozten zuten plazako argia neskek ez dantzatzeko. *Paradoxikoa* pentsatu zuen Ilargik, *indigenen kultura «zibilizatu gabean» emakumeak txori-gizon izan daitezke, eta gure mendebaldeko jendarte «aurreratuan», ezin mutil-dantzari izan.*

Bakoitzak berera:

—Errituak lehortea irudikatzen du beraz –galdetu zuen Romainek. *Kaporal*aren musikak hipnotizaturik egona zen ordura artio, bere ametsetan galdurik, *lehorte* hitza entzuna zuen artio.

—Ez, ez, juxtu kontrakoa –erantzun zion zaharrak–. Lehortearen kontrako erritua da, edo zen, euria egin zezan. Hegalariek hamabi eguneko baraua eta sexu abstinentzia egin behar dute jauzi egin baino lehen, eta bakoitzak elementu bat ordezkatzen du: lurra, sua, ura eta haizea. Euri zaparrada irudikatzen dute denak batera. Garai prehispanikoan 52 urtetik behin egiten zen, hau da, Mayab' kulturan ziklo kosmiko batek irauten duena, eguzki berria eta bizi berria markatzen dituena. Horregatik, goitiko plataformatxotik lurreraino, hamahiru aldiz egiten dio bira hegalari bakoitzak zutoinari. Osotara berrogeita hamabi bira egiten dituzte lau hegalariek, maien egutegiko ziklo kosmikoaren urte bakoitzeko bat alegia.

—Erritu hau, noizkoa dela diozu? –Romain bere buru barneko hariak lotu nahian zebilen.

—Zehatz-mehatz ez da jakiterik, baina diotenaren arabera, duela hamabortz mende baino gehiago izandako lehorteetan izan dezake jatorria.

Romain pentsakor gelditu zen, eta errituaren jatorria eta Palenqueko abandonua lotzen saiatzen zen bizkitar-

tean, lurrerainoko hegaldia burutu zuten lau hegalariek, milaka ikusleen txaloak piztuz.

***

—Polita izan da hegalarien ikuskizuna –erran zion Romainek Ilargiri La Iguana pareko ostatuan garagardo bana eskatuta *beraien* mahaian eseri zirelarik.

—Pozten naiz gustatu izana –arrapostu zion Ilargik irri bat opari–. Beharrik gizon zahar hori, bertzenaz ez ginen erdiaz ere enteratu izanen, ezta?

—Egia erran, hasieran gogaikarritzat hartu dut, baina onartu behar dut arras interesgarria iruditu zaidala gero. Buelta batzuk ari naiz ematen lehortearen kontuari eta mende batzuen hutsunea dagoelako bertzenaz, hegalarien errituaren jatorria eta Palenque abandonatzearen arrazoia lotuta egon daitezkeela erranen nukeen.

—Auskalo Romain, agian horren inguruko ikerketa egin dezakezu, eta batek daki...

Romainek eta Ilargik kalakan eman zuten ilunabarra, garagardoak edan eta edan, eleketa goxoan. Ostatu horretatik aitzintxeago zegoen bertze batera joan ziren, gero bertze batera, eta bertze batera. Gero eta animatuago, irri eta orro ari ziren barre-algara batean. Azkeneko ostaturako bidean, Romainek eskua hartu zion Ilargiri, honek estutu egin zion. Ostatu barruan, txantxa bat profitatuz, muxua eman zioten elkarri. Luze gabe, besarkatuta, muxuka ari ziren, gogotsu, bi neraberen antzera.

***

Romainen apartamentura ailegatu zirelarik ilun eta mutu aurkitu zuten dena. Muxu, fereka eta ahopeko irri artean egin zuten logelarako bidea, Kilian ez iratzartzeko.

Lurrean eta egun pare bat lehenago Omar Guzmanek eta Haydée Mendozak ekarritako zaku beltzaren ondoan bukatu zuten erantzitako arropek.

Logelaren erdian, zutik, Romainen bular zuria ile beltz eta fin azpian ezkutatzen zen. Bere eskuek Ilargiren ipurdi masailak ferekatzen zituzten mugimendu zirkularrez Ilargik lepoa muxukatu eta buruko ilea nahasten zion bizkitartean. Bien tripen kontaktuan batu zen desioaren izerdia. Ohatzeraino egin zuten, muxu-eztabaida batean, eta, bulkaldi arin batez, koltxoi gainera bota zuen Ilargik Romain.

Buruz goiti eta alkoholaren eragina supituki desagertu izan balitz bezala, ahalkea sentitu zuen Romainek bere gorputz biluzia eta bere faloaren erekzioa neskaren gorputzaren babes ezan agerian gelditu zirelarik. Ilargik irriñoa egin zion eta, xuabe, emeki-emeki, Romainen gainean paratu zen arkeologoaren lotsa uxatuz. Grabitateari kontra egin gabe, neskaren titien zuritasuna Romainen ahorantz amildu zen, eta honek, mingaina eta hortzekin milizkatu zituen Ilargiren titiburu gogor eta ilunak.

Bi gazteen barne pasio eroa fereka leun eta moteletan azaleratzen zen, dosifikatua, indarrak neurtzen dituen maratoiko lasterkariaren antzera. Pentsamendu horietan ziharduela, irribarre sano bat joan zitzaion ihesi Ilargiri, izan ere, mendebaldeko kulturan den-dena azkarra zela ematen zuen: tren azkarra, janari azkarra... eta sexuan, zer erranik ez. Maratoi korrikalariak baino sprinterrak ezagutzen zituen berak. Belarri batean egin zion atxiki Romaini, bere fereka leunen ordainsari.

Alde batera makurtu zirelarik, Romainen eskuek dantza egin zuten neskaren bizkarrean zehar, eta Ilargik zakil handitua nabaritu zuen hanken artean, bero. Eskua hanken artera sartu eta zakila goiti eta beheiti oratzen hasi zen neska, muxu busti batzuk Romainen ahoan atzendu bidenabar. Romainek bi gorputzen artean sartu zuen eskua, eta

klitoria ferekatzen hasi. Bertze eskuarekin alurako bidea esploratu zuen ipurdi masail artetik.

Muxu luze bat eman zion ezpainetan, eta beheitiruntzko zeharkaldia abiatu zuen Ilargiren gorputzaren geografiatik. Mingainarekin marraztutako ibilbide lizunean muxu bana uzten zuen opari geltoki bakoitzean. Gero, neskak, hanken artean zeukan Romainen buruan paratu zituen eskuak eta honen mingainak infernua eta zerua lotu zituen tsunami deskribaezin batez. Ilargik gibelerantz goititu zuen burua, bizkarra bihurrituz, barneko su gorriaren garren lurrikararen etorrera nabarituz. Romainek aiene bat ebatsi zion Ilargiri. Bere mingain ibiltariak behatzen puntetaraino egin zuen dantza eta, kontaktu gehiagoren eskean, airean mugitu ziren neskaren eskuak. Eskaera horri erantzunez Ilargiren parera itzuli zen Romain eta norgehiagoka antzean, jostalari, gainean paratu zen neska berriz ere. Mutilaren eskuak hartu eta burkoaren aldeetara zabaldu zizkion besoak mugimendu xuabe eta sentsual bati ekinez. Ilargik zerbait xuxulartu zion belarrira, hortz artean, baina Romainek ez zuen ulertu. Neskak izter hezeen artean senti zezakeen Romainen zakil handitua eta negu guztiak urtuko zituen gerriko mugimendu hipnotiko batez zakilaren punta bilatu zuen. Bi gazteen gorputz biluzi eta izerdituak suzko besarkada estu batean uztartu ziren, fereka, muxu, eta mugimendu arritmiko artean…

*Karajo, karajo, karajo...*

***

*...tentsioa ia uki daiteke, eta goizik izan arren, jendez gainezka dago Plaza Zaharra. Lainoak ez du goratu oraindik eta hotza hezurretaraino sartzen da. Hurbildutakoek oihal ilunak jantzi dituzte, gorputza eta burua estaltzeaz gain, tristura ere estali nahi dute. Herritarrak bezala, eguna triste eta gris dago. Gaurkoa ez da aise atzenduko.*

*Argituz doa emeki-emeki hats izoztuen artean.*

*Begirada guztiak plazaren erdigunean daude iltzatuta. Hor, borreroek, prestaketekin darraie: egur idorrekin inguratu dute neska gaztea lotua dagoen ziri bertikaleko plataforma, eta lana bukaturik, olioz busti dute pilatutako egurra, neskaren negar isilean erreparatu gabe. Gero, apaiza, ozenki hasi da neskaren arima latinez madarikatzen, eta azkenik, irri gaizto eta buruko mugimendu batez agindua eman dielarik, borreroek suzko lastargiak jaurti dituzte plataformaren oinarrira.*

*Ordura artio gris zegoen guztia: zerua, lurra, arropak, inguruko harrizko etxeak... orain baina, suaren gorria nagusituz doa. Pixkanaka-pixkanaka indartuz doaz garrak eta, neskaren orroen artean, itzal gorri-laranjen dantza ikus daiteke aurpegi beldurtuetan.*

*Irudia lazgarria da, eta erre usain higuingarri batek bildutakoen arnasa hartzea zailtzen du.*

*Neskaren oin biluziak soketan bihurritu egiten dira, hanken dardarak belaunak kolpatzen ditu. Gerria ezker eta eskuin mugitzen da lokarria laztu nahian eta ziriaren gibeleko aldean lotuta dauden eskuek zauriak dituzte dagoeneko sokaren estutasunagatik. Neskaren bularreko mugimendu azkar eta bortitzean arnasketa azeleratua antzeman daiteke. Zintzurra goiti eta beheiti ari da erritmo bizian, eroan, desesperatuan. Neskaren lepotik dilindan dagoen zintzilikarioak distira egiten du. Bitxia da lepokoa, gorri bizi kolorekoa, eta nabarmen ikusten da andere-zaldiaren sinboloa. Zintzurrarekin batera goiti eta beheiti mugitzen da lepokoa neskaren azal idortuaren gainean. Gorantz jarraitzen duten garren artean Ilargi Oihanbarrenen aurpegia antzematen da, etsipenez betetako malko idorren eta amorrazio orroen artean...*

Izerdi hotz batean bildurik, itota eta erabat asaldaturik iratzarri zen Romain logelaren iluntasunean. Mugi-

mendu erreflexu batez luzatu zuen besoa Ilargiren gorputzaren berotasunaren bila, baina zulo hotz bat baino ez zuen sentitu ohatzearen ertzean. Erabat larriturik, bi gazteen desiraren lekukoa izandako mesanotxeko argia piztu zuen.

Izerdia izoztu egin zitzaion: Ilargik egon behar zuen tokian andere-zaldiaren lepoko gorrixta zegoen. Hotz.

Ez zuen berehala erreakzionatu, elefante baten buruko minarekin zeharo desorientatua baitzegoen. Iratzargailuaren pantailan goizeko hamarrak pasa zirela ikusi zuen, eta Kilian Palenquen egonen zela suposatu zuen, lanean, berak egon behar zuen toki berean hain zuzen.

Logelaren alde guztietara begira egon zen tarte batez, erdi zorabiaturik. Ez zuen deus ulertzen, eta maindirearen gainean zegoen andere-zaldiaren lepokoan josi zuen begirada berriro. Hortxe zegoen lepokoa, mutu, inautetako apaingarri baten gisan.

Eskua luzatu eta hartu egin zuen. Metalaren hotzak behatz puntetatik buruko azken ilerainoko zirrara eragin zion. Une batez, bere bihotzaren taupadak andere-zaldiarenak zirela iruditu zitzaion eta izerdi hotzak hatsik gabe uzten ziola sentitu zuen, bular gainean alimaleko estutasuna nabarituz. Lepokoa kontzen zuen eskutik gorputz atal guztietara, inarrositako inurritegi baten zirkulazio kaotikoaren kilika sentitu zuen, karranpa jasangaitzekin batera. Egoerak gaindituta zegoen baina maiz amestutako sentsazio arkeologiko propioa bizitzen ari zela ulertu zuen.

Lurrean zegoen oihalezko zaku beltza behatu zuen, eta bihotza gelditu behar zitzaiola iruditu zitzaion. Logelak zituen bederatzi metro karratu eskasetan, Tupac Amaru, Pakal eta Moctezumaren kaskezurren zein andere-zaldiaren lepokoaren energia eta magia guztia batera bilduta senti zitzakeen, imajinatzen zaila zen istorio sinestezin

baten gisan. Bertze garai batera lekualdatua ikusi zuen bere burua.

*Karajo* erran zuen bere baitan logelaren erdian zutik eta biluzik zegoela.

***

Palenqueko indusketa arkeologikoetatik bueltatu zelarik, bestondoan galdutako Romain mozkortia aurkitzea espero zuen Kilianek. Horren ordez baina, «partitu nauk, deituko diat» zioen oharra baino ez zuen aurkitu sukalde-egongelako mahaiaren gainean.

«GAU IRATZARRIEN ILARGIA» istorioaren *Ilberria* atala ordenagailuz pasatzea lau bat aste kostatu zitzaidan, presarik gabe, Ursusek agindu bezala. Eta, Romain ez, baizik eta Ursus bera izan zen Normandian edota Mexikon barna imajinatu nuena.

Gero, gutun-azal polit eta misteriotsu gehiagoren zain gelditu nintzen.

Goizero, Xorroxin irratira lanera joaten nintzelarik, irrikaz ekiten nion posta begiratzeari. Baina deus ez, ez zen gutun klandestino gehiagorik agertu.

Egunak joan egunak etorri, asteak igaro ziren, hilabeteak, eta Ursusen berririk ez. Goizeroko ilusioa eta itxaropena galdu egin nituen azkenean.

Kasik urte batera ordea, eguerdi aldera eta etxera ospa egitekotan nintzela, Xorroxin irratiko telefonoak jo zuen.

—Ah, bada, ez nekien ja. Oraintxe bertan begiratuko dut –erantzun nion telefonoaren bertze aldeko ahotsari–. Mila esker deitzeagatik, aio bai, aio.

Telefonoa eskegi eta ordenagailua piztu nuen berriro, interneten begiratzeko. Periodikoetako orrialde nagusietan bederen ez zen deus ageri oraindik. Berri agentzietako *azken ordukoak* begiratu eta hortxe agertu zitzaidan: «Iker Iltzarbe ETAko kidea atxilotuta Bordele kanpoko aldeko ohiko errepide kontrol batean».

*Akabo Ursusen «oporrak»* pentsatu nuen.

Etxera bazkaltzera joan baino lehen, albistegi trakets bat inprobisatu nuen internetetik bildutako informazio eskasean oinarriturik.

Etxean, telebista pizturik, kazetari funts-gabe batek eman zuen albistea, irudi batzuekin lagunduta. Españako barne ministroak operazio garrantzitsutzat jo zuen Ursusen atxiloketa eta, espantuka, ETAren hainbat txosten eta *usb* ugari antzeman zizkiotela erran zuen. Baita informazio horren guztiaren ikerketak emaitzaren bat fite emanen zuela iragarri ere. Irudietan, Ursus ageri zen, eskuak bizkarrean lotuta. Ilea motz-motza zeraman eta nabari zitzaion denbora ez zela alferrik pasatu, aise burusoilago baitzegoen. Eta lodiago. Berez, Ursus ez da inoiz argala izan, baina lodiago zegoen, zalantzarik gabe.

Txiki-txikitatik denetan lodiena zen Ursus eta adarra jotzen genion maiz. *Bola, Mamut, Obelix*... denetarik. Ikastetxean *Hartza* erraten genion eta honek *Ursus*-era deribatu zuen. Azkenean, Ursus gelditu zen betiko, eta berari ere izena gustatzen zaiola erran daiteke jada, izan ere, horrela sinatzen du beti, baita nortasun agirian ere.

Poliziak Pariseko epailearen aurrera eraman zuen Ursus egun batzuen bueltan eta epaileak Bois-d'Arcyko espetxean sartu zuen. Lehenbiziko egun haietako mobilizazioak pasatuta, gutuna idaztea erabaki nuen. Orri zuriaren aitzinean paratu nintzenean zalantza izan nuen, eta epaileak bere posta interbeniturik izanen zuelakoan, ez nion «GAU IRATZARRIEN ILARGIA»-ren aipamenik egin. Ez dakit, paranoia sartu zitzaidan-edo, baina zer moduz zegoen, zer moduz nintzen, herriko giroa, lagunen aferak eta horrelakoak kontatu nizkion soilik.

Denbora batera erantzun zidanean ea ez nuen errelatoa jaso galdetu zidan, nire gutunean horren inguruan deus ez aipatzeak apur bat harritu zuela eta, irratian postontzirik ez genuenez, kaleko norbaitek hartu izan zuela pentsatua zuela.

Berehala idatzi nion errateko ez zuela kaleko inork hartu, nik neuk neukala alegia, aspalditik ordenagailuz pasatuta gainera. Bide batez, eta bertze gauzen artean, ea

*Ilgora* (istorioaren bigarren atala) idatzita zeukan galdetu nion gutun berean.

Hilabete batera edo, bertze gutun bat ailegatu zitzaidan. *Zer iruditzen zaik «Ilberria» atala?* galdetzen zidan, eta erraten zuen lasaitu ederra hartu zuela konfirmatu niolarik errelatoa nik neukala. *Ilgora* atalaren zirriborroa aspalditik omen zeukan bukatuta, baina igortzeko aukerarik ez zuela izan aipatzen zuen, eta lehenengo atalarekin igorritako gutunean iragarri bezala, poliziak kendu egin zion atxilo hartu zutenean. *Hara barne ministroak handiki iragarritako informazio baliotsuak* pentsatu nuen irribarre ironiko batez.

*Lapur ustelak baino ez zarete!* erraten omen zien poliziei galdeketetan, eta jatekoa eta edatekoa beharrean berak idatzitako istorioaren atala itzultzea eskatzen omen zien. *Alferrik duk zakurrei literaturaz solastatzea* idazten zuen gutunean*, ez ditek inoiz horrelako gauzez deus ulertuko. «Gau Iratzarrien Ilargia»ren laurden bat bahitu ditek, beraz, egunen batean, berriz negoziatzen hasten bagaituk estatuekin, «ilargi laurdena» bueltatzea exijituko beharko diagu, kar, kar, kar...*

Ursus poliziei ilargi laurden bat eskatzen imajinatzean irri egin nuen. *Biba euskaldunok* pentsatu nuen nire baitan*, ez dugu, ez, gauza guti eskatzen!*

Istorioaren lehenengo atalari buruzko bere galderari zegokionez, ongi zegoela erantzun nion, beharbada datu gehiegitxo zegoela, eta, nire ustez, Evo Moralesek parte hartze handiagoa behar zuela. Azken finean, bahitu egiten dute, ia sakrifikatu ere ilargi beteko gau batean, eta apenas erraten du deus. *Gaizoa Evo* idatzi nion, *esaldi bat edo bertze gehiago paratu beharko zaiok, ez?* Eta, *bigarren atala beraz, espetxean berridatzi beharko duk* proposatu nion. *Hik idatzi, igorri, eta neuk pasako diat ordenagailuz, ados*?

Ez nuen Ursusen gutunik jaso. Horrek ez ninduen batere harritu jakin banekielako euskal preso politikoen kolektiboaren borrokaldiak zirela medio etengabe aldatzen zutela espetxez, edo zigor ziegetan eta isolamendu moduluetan sartzen. Baldintza horietan zail eginen zitzaion idaztea, eta are zailagoa zirriborroa kartzeleroen miaketetatik osorik ateratzea.

Gauza bat eta bertze, denbora puska bat joan zen etxeko postontzian Ursusen idazkera berezia zekarren gutun-azal lodia berriro agertu zen artio, eta ez nenbilen arras oker, izan ere, idatzitakoa kartzeleroek behin baino gehiagotan ebatsi ziotela kontatzen zuen. *Nonbait* aipatzen zuen*, euskarazko hainbertze hitz batera susmagarriegi egiten zaiek urde ustel hauei.*

*Dirudienez,* jarraitzen zuen*, espainiaratu behar naitek azkenean, Madrilen epaitzeko. Ah ze suertea nirea, e? Kar, kar, kar... Bon, edozein modutan, «Ilgora» atala igortzen diat, berriro bahitu baino lehen.*

Bukaeran, eta betiko moduan, *bon pendejo, zaindu hadi eta fite artio. Besarkada iraultzaile bat* idatziz agurtzen zuen.

Nik nire aldetik, Ursusen gutuna pare bat aldiz irakurri, eta «GAU IRATZARRIEN ILARGIA» istorioaren *Ilgora* atalari ekin nion.

# GAU IRATZARRIEN ILARGIA ILGORA

## Egunerokoa

IRAILAK 8

Bidaia ongi, espero nuena baino askoz hobe nahiz eta ondoko eserlekuetan eztei-bidaiatik zetorren bikotea egokitu. Cancunen xahutu dute hauek amodio guztia nik uste, lehenago zerbait baldin bazuten bederen, izan ere, lo, diskutitu eta beraien artean haserretu, ez dute bertzerik egin hegaldiak iraun duen hamaika ordu pasetan.

Mexiko DF gauez eta airetik ikustea ikaragarria izan da, hori argitxo itsasoa haranean eta muinoen barna hedatzen zena! Hori inurritegi erraldoia!

Hegazkinean banatu dizkiguten egunkari batean *Venus* zaharrena izan daitekeenaren inguruko artikulua irakurri dut. Alemaniako hegoaldean aurkitu dute, kobazulo batean, Danubio errekaren zonaldean. Mamut-marfilezkoa da eta atributu sexualak arras desproportzionatuak omen ditu. Horrexegatik, uste dute emankortasuna irudikatzen duela. 40000 urteko datazioa eman diote, beraz, gizaki prehistorikoak irudikatu duen giza irudirik zaharrena litzateke. Kasualitate hutsa emakumezkoa izatea? Honen inguruko datu gehiago bilatu.

Omar Guzmanek eta Haydée Mendozak emandako kaskezurren zakuarekin arazorik ez, ezustekorik gabe igaro dut aduana pieza arkeologikoendako UNAMeko agirien laguntzarekin. Badakit agiri horiek ez zirela bidaia hau egiteko, baina, zer egin behar nuen? Zakua ekarri zidatenetik ez dut beren berri izan eta saiatu arren (guti baina saiatu), ez dut lokalizatzeko modurik izan. Bertze

irtenbiderik ezean, nirekin ekarri behar izan ditut hiru kaskezurrak.

Madrilgo Barajas aireportuan bi ezusteko. Lehenbizikoa nire burua ispilu batean ikusi dudanean. Hondar egun hauetako gorabeherek zein ordutegi aldaketak faktura pasatu didatela erran daiteke, zalantzarik gabe. Gainera, Ilargiren bat-bateko desagerpenak eta andere-zaldiaren lepokoak eragindako lurrikara emozionala burutik ezin kenduz, nora ezean alderrai ibili naiz aireportuetan, zonbi baten antzera. Irudi batek baina, nintzen espektroaren ibilera gelditu du. Aireportuan zebilen milaka jende blaust *Xibalbá*-ra joan izan balitz bezala desagertu egin da, maien inframunduak supituki irentsirik, eta soinu eta asots guzti-guztiak lurraren sakontasunaren sakontasunean ito izan bailitzan. Ilargiren argazkia nabarmendu da gauza guztien gainetik, *terrorista bilatuenen* kartelean. Horra hor bigarren ezustekoa.

***

IRAILAK 10

Arguedas, Nafarroako hegoaldean. *Santxo Abarka* izeneko aterpetxea. Arduradunak kezkaturik iratzarri nau, ea bizirik nengoen. Ia egun oso bat egin dut lo. Behar nuen. Indarberriturik, herrian barna itzulixka ematea erabaki dut. Aterpearen kokapena begiratu dut abiatu baino lehen, ez du herri handia ematen baina badaezpada. Fatxadako kolore urdinak maiek indigoz egiten zutena ekarri dit gogora. Ezin dut ekidin, milaka kilometrora egonagatik, ezin ditut maiak burutik kendu. Pazientzia eta aklimatatzeko denbora eskatu dizkiot nire buruari. Gero gerokoa.

Ez dut andere-zaldiaren arrastoa segitzeko plangintza zehatzik. Espero dezagun, orain artio bezala, urrats bakoitzak hurrengoa erakustea.

Inor mintzeko asmorik gabe, Arguedas herri itsusia dela erratera ausartuko nintzateke. Normandiako arbelezko teilatuak eta harri griseko etxeak zein San Cristobal de las Casaseko etxe kolonialak gibelean utzi eta gero, begietara jotzen du estilo eta kolore ezberdineko nahaste-borraste arkitektoniko honek.

Jendea oihuka solastatzen da, azentu berezi xamar batez mexikarren doinu goxoarekin alderatuta. Hala ere, oihu-solas horrekin, Mexiko DFko giro zalapartatsuan ongi moldatuko zirela iruditzen zait.

Herriko plazatik beheiti Ilargiren antzeko janzkera zeraman gazte koadrila bat ikusi dut, eta, Ilargirekin egin bezala, gibeletik joan natzaie. Zeharbide koxkor bat pasatu eta gero bukatu da herria, eta gazteak graffitiz eta afitxez betetako etxe zahar batean sartu dira. Etxe okupatua dirudi. Gainaldean, «Zisko Bardenero» markatzen du pintaketa batek.

***

IRAILAK 11

Zenbait jaki erosi, bizikleta bat alokatu eta Bardeara abiatu naiz, basamortura. Bizikletak alokatzeko dendan bertan erosi dut zonaldeko mapa. Oso ongi dago, bideak eta toponimoak ez ezik, trikuharri bat edo bertze ere ageri da.

Leku bitxia da Bardea, zalantza izpirik gabe. Basamortu ilargitarra. Idor bezain basatia, bizitzeko aski gogorra dirudiena. Herritik ateratzean koba-bizitza ugari dago eta *euskal Kapadozia Euskal Herriko basamortuan* pentsamendua etorri zait gogora. Horrela omen dira euskaldunak, denetarik pixka bat izan behar, baita poligono militar bat parke natural baten erdi-erdian ere!

Koba hauek alabaina, buztin gorri kolorekoak dira eta nire ametsaren kobazuloak kare-harrizkoa zirudien. Toki

idor honetako kobak Palestinan edota Jordanian egon zitezkeen, eta Itsaso Hilaren ertzeko koba batean artzain beduino batek aurkitutako K.a. I. mendeko *Qumran* eskuizkribuen gisako aurkikuntzaren bat edozein momentuan gerta daitekeela dirudi (*Sei Eguneko Gerraz* geroztik Israelen esku daude, ez? Bai, hala uste dut. Jordaniak salaketa paratu zuen Unescon baina Israelen esku daude oraindik).

Bardean bertzetik, ikaragarrizko paisaiak eta tokiak ikusi ditut, baita, maparen laguntzaz, trikuharri baten bat ere. Bilatzen dudan indusketa gunearen seinalerik ez ordea. Kasko batean hala ere, Uztarriaren Amabirjinaren santutegiaren ondoan, Bardeak parke naturalaren interpretazio zentroa omen dago eta baliteke bertan honen inguruko argibideren bat aurkitzea. Ikusiko.

Nolanahi ere, kotxez joan beharko dut, izan ere, ez-dakit-zenbat kilometro dira maldan goiti eta, dagoeneko, gaurko itzulixkaren biharko ondorioak hasia naiz nabaritzen!

***

IRAILAK 12

Goizean goiz paratu naiz errepide bazterrean, leher kaka eginik, txikituta. Doi-doian luza nezakeen besoa auto-stop egiteko. Hasieran ikusezina nintzela zirudien. Ados, onartu behar dut atzoko bizikleta martxa mortala izan zela eta errepide bazterreko zuhaitzak baino gutiago mugitzen nintzela, baina… Azkenean *Zisko Bardenero* gune okupatuko kinki horietako batek hartu nau. Uztarriaren Amabirjinaren santutegia eta Bardeako interpretazio zentroaren ondoan dagoen «Senda Viva» parke tematikoan lan egiten omen du. Nekez imajina dezaket punki hori turista familiak paseatzen tren *txu-txu*an zebra eta ostruka arten.

Interpretazio zentroa ez dago gaizki. Hori bai, zonaldeko errepideetan bezala, Ilargik hitz egiten zuen hiz-

kuntza zaharraren arrastorik ez azalpen idatzietan. Toponimian aldiz, hizkuntza honen zantzuak aurki daitezke han--hemenka: Landazuria, Piskerra, Muskaria...

Gaur basamortua dena basoa omen zen ehunka urte lehenago. Hortik omen datorkio izena: Bardea, Bardena, abar-dena. Dena abar: basoa edo oihana (euskarazko jatorria duen bertze izen bat beraz).

Bitxia izaten da normalki leku latz hauen historia, eta idorte eta harri mukuruen gibelean istorio geologiko fantastikoak egoten dira. Mongoliako Gobi basamortua etortzen zait gogora. Bertan, hogeita bortz dinosauroren hezurrak aurkitu dituzte toki idor eta lazgarri batean. Toki hura baina, lakua zen orain dela 90 miloi urte, eta aurkitutako teropodoak lakuaren lohian harrapatuta gelditurik, gosez edo bertze harraparien erasoen ondorioz hil ziren.

Bardean, agerian dagoena baino askoz gehiago ezkutuan dagoela iruditzen zait. Alabaina, nahikotxo harritu nau gune arkeologikorik ez aipatzeak interpretazio zentroaren panel informatiboetan nahiz bideoetan. Harrerako mutilari bertako indusketa arkeologikoen informazioa eskatu diodalarik aurpegi arraroa paratu du, txarra ez erratearren. Gero, gogoz kontra bezala, artxibategi lodi bat atera dit, horitua eta hautsez beterik.

Berandu egin denez, biharko utzi behar izan dut. Espero dezagun *Senda Viva*ko kinkiak lana izatea bihar ere.

***

IRAILAK 13

Eta bai, espero bezala, atzoko punki berak hurbildu nau interpretazio zentrora bere furgoneta zaharrean. *Txabiskes* deitzeko erran dit, konfiantzan edo. Ez omen zaio bere lana batere gustatzen baina zerbaitean lan egin behar dela errepikatzen zuen behin eta berriz, «hobe hori herritik hirira alde egitea baino». Nirekin ari zen baina bere burua konbentzitu nahian zebilela zirudien gehiago. Nik, gaine-

tik bada ere, nire ikerketarena kontatu diot. Ez du inolako interes berezirik erakutsi eta, bertzerik gabe, bere burua aurkeztu du berriz, lanetik aterata, herriraino eramateko arratsaldean. Jatorra kinkia.

Interpretazio zentroan, denborarik galdu gabe, indusketen atzoko artxibategi bera eskatu dut. Berriz aurpegi arraroak, eta denbora gutira, zentroko zuzendaria etorri zait. Ez dakit zergatik, baina azaldu diodanean sobera funtsik gabeko ikerketa pertsonala zela, inongo erakundeekin zerikusirik ez duena, gizona lasaitu egin dela iruditu zait. Ondoren, irribarre artifizial batez agurtu eta desagertu egin da. Ez dut egoera ulertu.

Artxibategian dagoen material guztia zaharra da, oso zaharra. Paper gehienak horituak daude eta fotokopia anitz ez dira ongi irakurtzen. Kostata izan bada ere, andere-zaldiaren lepokoaren moldea agertu zen indusketaren kokapena aurkitu dut, baita bizikleta dendan erositako mapa zabaldutakoan disgustu ederra hartu ere. Egun, base militarra dago indusketa zegoen tokian. Horrek azalduko luke zergatik dagoen hain informazio guti eta hain zaharra.

Gerra eta Historia aurrez aurre berriro ere. Babiloniako indusketetan, Bagdadetik 90 kilometrora Mesopotamia zaharrean, lapurreta asko izan ziren Irakeko gerran. Azkenekoan erran nahi dut. Gero gainera, Amerikako Estatu Batuetako tropek base militarra ezarri zuten Eufrates ibaiaren hirian. Militarren baseen eraginez gune arkeologiko aunitz kaltetu dira, Ishtar jainkosaren ate famatua errate baterako. Hammurabi eta Babel dorrearen hiri mitikoak altxor handiak gordetzen ditu oraindik, arkeologoen zain, bere memoria noiz berreskuratuko, baina gerra eta militarren presentziaren ondorioz arriskuan egon daitezke preziorik gabeko altxor hauek guztiak.

Andere-zaldiaren indusketaren kasuan dirudienez, eraikin militar baterako oinarria ezartzeko zuloan agertu zen trikuharria, bi metro lur azpian kasik, eta azterketa azkar

bat baino ez zuten egin, gainetik. Zoritzarrez, helburua ez zen gunea ikertzea baizik eta poligono militarra ahalik eta azkarren eraikitzea. Hortaz, eta arrunt modu traketsean, azkar eta gaizki egin zuten dena, txosten mehe eta argazki guti batzuen dokumentua osatuz. (Bertze historia liburu bat gehiago axolagabekeriaz erreta!)

Ea fotokopiarik ateratzen ahal nuen galdetu dudalarik baietz erantzun didate, baina ezin nuela dokumenturik zentrotik atera. Bertan fotokopiagailurik ez dagoenez, «ez» diplomatikotzat hartu dut erantzuna. *Urde pito hipokritak!*

Oraindik orain eta nire oharrak kontutan hartu gabe, Omar Guzmanek Mexiko DFko taxian emandako dokumentuaren fotokopia da daukadan dokumentazio bakarra.

Ahalik eta datu gehien kaier batean bildu eta Txabiskesengana joateko ordua ailegatu zait.

Irailaren 19an rock kontzertua omen dago Zisko Bardeneron, Mallacan eta Ufestuek taldeena, eta bertaratzeko gonbidapena luzatu dit Txabiskesek, *el Cremalleras*, *el Alambres* eta bere lagun guztiekin primeran pasatuko dudala. *Agian* erran diot nik, ezetz ez errateagatik. Mallacanek aragoieraz eta Ufestuekek euskaraz kantatzen zutela erran duenean interesgarria iruditu zait, eta seguruenik hurbilduko naizela agindu diot.

***

IRAILAK 16

Tuterako udal artxibategiraino joan naiz, autobusez. Sarrera ikusgarria Ebro ibaiaren gaineko zubitik. *Euskal Mesopotamiaren muga* pentsatu dut Haydée Mendozaren hitzak gogoratuz.

Bertzetik, ez dut gauza gorrik aurkitu. Azalpen orokor batzuk eta menhir eta trikuharrien guti goiti-beheitiko zenbaketa baino ez. Antza, 658. urtean eliza katolikoak Nantesen diktatutako kontzilioan «deabruaren arrastoaren

moduan, jendeek gurtzen dituzten harri horiek birrindu eta sakonki lurperatzeko» agindu zuten. *Horra hor andere-zaldiaren moldearen trikuharria lur azpian egotearen arrazoia* pentsatu dut. Logika hori jarraiturik, batek daki zenbat altxor eta misterio egon daitezkeen militarki bortxatutako basamortu honen azpian.

Lepokoaren aipamenik ez oraindik. *Rien de rien*.

Nafarroako Erriberako hiriburutik barna paseotxo bat eman, zerbait bazkaldu eta Arguedaserako arratsaldeko autobusa hartu dut. Tuteran erositako egunkariari begiratu bat eman diot bidaiak iraun dituen hogei minutu eskasetan. Itsas har erraldoi batzuen fosilak aurkitu dituzte Madrilgo Ciudad Realeko Cabañeros parke naturalean. Ikerketen arabera duela 475 miloi urte bizi ziren metro bateko luzera eta 15 zentimetroko diametroko har erraldoi hauek. Hara nire arreta deitu duena: pasa den mendeko 80. hamarkadan Bardeako poligono militarra Madrileko parke natural honetara aldatzekotan egon ziren.

Hain beharrezkoak dira poligono militarrak?! Soilik parke naturaletan eraiki daitezke?!

Ez dut deus ulertzen.

***

IRAILAK 19

Militarren eremutik kanpo eta agerian dauden trikuharriak bisitatzea erabaki dut. Bertze garraiobiderik ezean, bizikleta bat alokatu dut. Ai ama!

Kilometro batzuk egin eta menhir zein trikuharri zenbait bisitatu eta gero, hartutako oharrak errepasatu ditut maparen laguntzaz topatu dudan azken trikuharrian, Piskerra deituriko parajean.

Orain artio ikusi ditudan trikuharri guzti-guztiak ekialdera begira daude, eguzkiaren sorrerantz orientatuak.

Bake emankorra arnasten da leku hauetan, militarrak ehunka metro batzuetara egon arren. Milaka eta milaka kilometrora daudela dirudi, izan ere, trikuharriek kutxa neutroa sortzen dute, baretasun energetikoa sortuz bere erdigunean, koba-zulo naturalen eza konpentsatu nahiko balute bezala.

Menhirrek aldiz, zuhaitzek utzitako hutsunea estali nahi dutela dirudi. Zuhaitzen puntek atmosferara askatzen dituzten ioi negatiboak eta lurrera gidatzen dituzten ioi positiboak zutitutako harri hauek bideratzen dituzte hemen, Ama-lurraren gorputz erraldoian gauzatutako akupuntura ariketa baten moduan. Trikuharriek eta menhirrek lurraren desoreka elektromagnetikoak berrezartzen dituzte.

Zalantza izpirik gabe, monumentu megalitiko hauek eraiki zituzten jendeek sen berezia zeukaten naturaren energiak irakurri ahal izateko, lurraren arima barne-barnetik sentitu ahal izateko gaitasuna alegia.

Toki berezi hauetako magian murgilduta berandu egin zait eta eguna itzali egin da nire aitzinean. Bizikleta hartu dut herrirantz abiatzeko asmoz baina alferrik izan da, gaua bazter guztietara hedatu da/zait.

Ez oso urrunean ikusi dudan argi baterantz abiatu eta artzain baten etxolara ailegatu naiz. Birritan pentsatu gabe hartu nau artzainak bere zoko xumean. Bertan igaro beharko dut gaua. Beraz, ez Mallacan ez eta Ufestuek ere. Aio Txabiskes, *Cremalleras, Alambre*s *and company*. Akabo Zisko Bardeneroko gaualdia, gau bardeneroa beharko du izan, ziskorik gabea.

***

IRAILAK 20

Gau zinez ederra.

Zeru beltzeko izarrek Santxikorrota bidelapurraren abenturen kontakizunarekin lagundu diote artzainari. Ilargiak ere bere apurra paratu du giroa sorgintzen.

Inguru hauetan omen dago Santxikorrotak ebasten zuena gordetzeko erabiltzen zuen zuloa, urrez eta altxorrez betea. Ea nik bilatzen ditudan altxor prehistorikoak bezala militarren bonben azpian ez ote den egonen galdetu diot nire buruari. Batek daki.

Artzaina, zinez pertsona interesgarria zen. Begirada tristekoa, aurpegiaren zimur erreetan bere bizimoduaren gogortasuna antzeman zitekeen, eta bere keinuek nahiz mugimenduek dena erraten zuten, baita hitzek adierazten ez dutena ere.

Katilu bat kafe eskaini dit gosaltzeko.

Bigarren eguna omen du Bardean, atzo, *El Paso* izeneko parajetik artaldearekin sartu ondotik. Berez, Zaraitzu ibarreko Espartza herrikoa da eta oroitzen denetik egin ohi du oinez Pirinioak eta Bardeak lotzen dituen bidea, aitarekin haurretan hasi eta gaurdaino. Urtero.

Berak ez du seme-alabarik izan, beraz, transhumantziaren azken kate-begia izanen dela aitortu dit tristuraz, bere familiari dagokionez behinik behin. Adio milaka urteetako usadioari pertsona bakar baten heriotzarekin. Pena, ez?

Gasna eta ogi pusketa bat eman dizkit herriko bidean jateko. Gero, keinu batez agurtu eta ibilera motel baina sendo batez, zakurrak eta makilaz lagundurik, erosioaren tolesdura idorretan barna desagertu da.

Bere munduan sartu naizen bezain fite atera naiz. Bere bideko harritxo bat gehiago baino ez naiz izan seguruenik, *turista despistatu bat*. Bihar, edo gaur bertan beharbada, ez da nitaz oroituko. Niri ordea, garunean zizelkaturik geratu zait. Desagertzear dagoen zerbaiten aitzinean sentitu dut nire burua, bertze garai edo mundu bateko lekuko pribilegiatua sentitu ere.

*Ongi ibili eta segi bizkor basamortuko gauean salbatu ninduen hondar transhumante hori! Au revoir!*

Bizikleta alokatu nuen dendan ez zuten asaldaturik ematen. Bertzerik gabe, berandu egin zitzaidala pentsatu zuten eta hurrengo egunean entregatuko nuela bizikleta. Beraz, lasai aski egon nintekeen basamortuan bueltaka, galduta eta egarriak jota, edota basapiztiaren baten menuan, inor enteratu gabe.

***

IRAILAK 22

Paper eta hartutako oharren artean eman ditut azkeneko batek-daki-zenbat ordu, hariak lotu nahiz. Pieza ezberdinak ahokatuz doaz nik uste.

Andere-zaldiaren lepokoak, kultura zein sinesmen ezberdinen uztarketa dena, aniztasunaren sinboloa behar du izan.

Antzinako Europako jainkosa (Mari?) amatzat hartuta, naturaren sinboloa litzateke lepokoa. Eskuetako sugeek, emankortasunaren ikurra izanik, bizitzaren sortzaile bihurtuko lukete eta bularrak amatasunaren adierazle ukaezina lirateke.

Europako ekialdetik etorritako kultura patriarkal eta gerrazaleen inbasioen ondorioz, kobazuloetan bilatuko zuen babesa Euskal-akitaniarreko guneko jendarte ludiko eta bestazaleak, bere erlijio naturalistaren ordezkari nagusia gurtzeko. Urteen poderioz, kobazuloak hartuko ziren euskal jainkosaren bizitokitzat, naturarekiko lotura are gehiago indartuz.

Zenbait mende geroago, eta Europako iparraldeko tribuen inbasioen eraginez, hainbat aldaketa eman ziren berriro antzinako euskaldunen sinesmenetan. Ilargia gurtzetik eguzkia gurtzera pasatu ziren eta jainko matriar-

kaletatik jainko patriarkaletara. Inposaketaren aitzinean, maiek gaur eguneraino 500 urte iraun duen era guztietako errepresio bortitzari bizirauteko bere ohitura erlijiosoak erlijio katolikoaren sainduen gibelean ezkutatu dituzten bezala, euskaldunek zelten mitologian kamuflatu zituzten beren sinesmenak, beren jainkosa nagusiari zaldi gorputza emanez. Izan ere, Euskal Herriko geografian zehar dagoen labar-arteak erakusten duen moduan, miresmen handiko animalia izan da zaldia betidanik euskaldunentzat. Kasurik aipagarriena Ekaingo kobazuloa izan daiteke beharbada, Gipuzkoan, zeina, ikertzaileen arabera, prehistoriako zaldien Kapera Sixtinoa izanen litzatekeen.

Gauzak horrela, erlijio ofizialean historian zehar ia agertzen ez den ikur mitologiko batek ikaragarrizko garrantzia izan zezakeen herri xumearen sinesmenetan, Amatzat hartzeraino, eta gezurra, lapurreta edota harrokeriaren etsaitzat hartzeraino ere, zeinak emandako hitza ez betetzea eta gizakiarekiko errespetu falta gaitzetsi eta zigortu egiten zuena.

Antzinako Europako kultura honetan ez zuten armagintzarik lantzen, metalurgia aldiz, maisuki praktikatzen zuten, andere-zaldiaren lepokoaren edertasunak aski ongi erakusten duen gisan. Lepokoaren moldea aurkitu ez dudan arren, Bardeako lekuren batean landu zela dirudi. Niregana berriz, Otsagiko neska batengandik ailegatu da lepokoa.

Bardeak. Otsagi.

Ezagutu dudanagatik, itxuraz hain urrun dauden bi lurralde hauek erabateko lotura kulturala izan dute historian zehar artzaintzari esker, eta transhumantzia lotura kultural honen gakoa litzateke.

Andere-zaldiaren zintzilikarioak Bardeak eta Otsagi arteko bide luzea artzain baten lepoan dilindan egin zuela erratera ausartuko nintzateke.

*Urkatuaren etxean ez aipa sokarik*

## Oihanbarren

Iruñea zaharreko karriketatik zihoan Romain, hiriko giroa arnasten. Hiriburua izan arren giro hurbila sumatu zuen han-hemenka kalakan ziharduen jendearen artean, herri handi baten giroa. Goitik beherako hotzikara sentitu zuen Gazteluko plaza zeharkatzean eta, Ilargirekin Chiapasen izandako elkarrizketa gogoratzean, historia liburu erreen hilerritik zihoala iruditu zitzaion. Gero, pare bat aldiz galdetuta, Nafarroako liburutegiraino hurbildu zen. Barnean alderrai ibili zen, nondik hasi zehatz-mehatz jakin gabe.

Une batez, Yves Marie eta Pierrez oroitu zen, gaztaroko lagunez. Ilargirekin plazeraren putzuan igeri egin zuen gau ahaztezinaz geroztik ez zituen beren ahotsak berriro entzun, eta ea onik egonen ziren galdetu zion bere buruari. Segundo batera, ergelkeria galanta iruditu zitzaion bere burutazioa, eta irri ttiki bat agertu zen bere aurpegian. *Hau martxa!*

Euskarari buruzko liburu potolo bat hartu zuen azkenean, denbora pasan, eta mahai luze baten ertzean eseri zen liburuaren kirikatzera. Gauza interesgarriak eta zenbait bitxikeria aurkitu zituen. Euskal Herriko iparraldeko egungo muga markatzen duen errekak errate baterako, *Adour* dauka izena, zelten *-our* hitzaz osatua, ura edo urarekin zerikusirik duten leku ezberdinetako toponimoetan ageri ohi dena. Bidouze errekaren kasua antzekoa litzateke.

Bertzetik, ahoa bete hortz gelditu zen liburuak zekarren mapa batean euskararen eremu historikoak ikusi zituenean. Haydée Mendozak errana bazekien lehenago aise hedapen zabalagoa izana zuela euskarak, baina, egun ia ezezaguna zen eta kasik desagertzear zegoen hizkuntza, bertze mende eta garai batzuetan Kantabria, Burgos, Errio-

xan, Aragoin eta Okzitanian ere solastatzen zen, Euskal Herriko zazpi herrialdez gain.

Mexiko DFko liburutegi nazionalean irakurritako lantxoen antzekoak aipatzen zituen esku artean zeukan liburuak ere, euskara Mesopotamiako sumeriera, Afrikako berberea, egiptoera edota Italiako etrurierarekin alderatzen zituzten eskemak bertzeak bertze.

Zenbait adibide zinez deigarriak ziren. Hammurabi Babiloniako erregearen euskarazko esanahia adibidez, hor ere ageri zen, *AMA-UR-ABI*, uren amaren hilobia, edo Babiloniako Ishtar jainkosa euskarazko *-ist* erroarekin lotzen zuena, argi izpiak sortu edo bidaltzen dituen gauzekin zerikusirik duena, euskarazko tximISTa edo izar (IShTar) errate baterako, edota bertze hizkuntzetako *star*, *stella*, *estrella*, *stelle*... Benetan bitxia.

Liburuaren bertze atal batek bere arreta guztia bildu zuen. «Maguri, mauri, mairu, moru, madju...» zeukan izenburua atalak, eta Euskal Herrian kristautasuna heldu aurreko biztanleei *mairu* edo *jentilak* deitzen zitzaiela erraten zuen. Euren izena duten leku mordoa omen dago euskal lurraldean, hala nola Murueta, jentilbaratz, Maguregi edota Barrikako Mauriola, burdinez aberatsa den muino batean kokaturik dagoen nafar tenplarioen dorrea errate baterako. Islama baino zaharragoak omen dira izen hauek guztiak. Heleniar indoeuropearrek *amauros* deitzen zieten eurek baino lehen Grezian bizi zirenei, erromatarrek *mauri* Afrikako iparraldeko autoktonoei, hortik Mauritania herrialdearen izena, eta euskaldunen ahozko literatura dionaren arabera, erlijio berekoak lirateke jende hauek guztiak. Beraz, erlijiorako hizkuntza sakratua konpartituko zuketen. *Maguri* hitza *makurtu* hitzaren parekoa zela erraten zen liburuan, eta makurtu AMA+GURTU hitz elkarketatik sortutako hitza zela. Ondorioz, maguriak ama gurtzen zutenak ziren, jainkosaren erlijio zaharraren jarraitzaileak alegia. Jainkosa hau Paleolitoko Venus litzateke, eta geroagoko Isis, Atenea, Mari... eta kristautasunaren ostean

eremu berean gurtzen diren ehunka Ama Birjina. Patriarkatuak ezabatu ezin izan duen jendarte baten oihartzunaren lekuko.

Aitzintxeago andere-zaldiarekin lotura zuzena izan zezakeen zerbait irakurri zuen: *andrea* hitzak gizona erran nahi du grekoz, eta *jaune*-k emakumea. Euskaraz ordea, kontrakoa zen, *andrea*k emakumezkoa adierazten zuen, eta *jauna*k gizonezkoa. Honek Antzinako Europak eta ekialdeko kulturak inbasioen ondorioz izandako talka islatzen zuen, non balore eta ideia aunitzek erabateko berrirakurketa pairatu zuten, hitzak eta esanahiak gurutzatuz, zuria eta beltza heriotza eta alaitasuna adierazteko gurutzatu ziren bezala.

Txabiskesek aholkatutako tokian bazkaldu zuen Romainek, Iruñeko alde zaharrean bertan, eta Arguedaseko gazteak agindu bezala, *merke eta on*. Zumalakarregiren atearen ondoan zegoen jatetxea, Karmen karrikan, eta abegitsu egin zitzaion. Bila hasi zelarik urrunxko zegoela iruditu zitzaion, gero, berehala konturatu zen hiri zaharreko bihotzean zegoela, harresiz inguraturik eta ezin leku xarmangarriagoan.

Jakin-minak jota, lokalaren dekorazioaz galdetu zion zerbitzariari Ilargiren elastikoetan ikusia zituen marrazkiak eta sinboloak paretetan ezagutu zituelarik. Euskal preso politikoen aldeko aldarrikapenak, independentzia eskatzen zuten Euskal Herriko mapak, manifestu komunistaren pasarteak... zerbitzariaren erantzuna aditzean, *Iraultzaileegia niretzat* pentsatu zuen arkeologo gazteak bere baitan.

Jatekoa ekartzen zioten bizkitartean leihoaren ondoan utzi zuen motxila. Hiru kaskezurren zaku beltza aldiz, oinen artean gorde zuen mahaiaren azpian, fidatuko ez balitz bezala. *Dena dela, lapurrak baino gehiago mendigoizaleak dirudite* erran zuen bere kolkorako inguruan zeuden gazteen mendiko janzkera ikusirik.

Momentu batean, hanken artean zeukan hiru kaskezurren zakua estutu egin zuen oinekin, eta Omar Guzmanez

eta Haydée Mendozaz oroitu zen. Aspalditik ez zeukan horien berririk, kaskezurren zakua ia azalpenik eman gabe gordetzeko eman ziotenetik hain zuzen ere, eta Kilianek telefonoz errandakoaren arabera, Palenqueko indusketetan ere ez zekiten deus irakasleaz. Faltarik gabe, hurrengo egunetan telefonoz edo emailez kontaktatzen saiatzea proposatu zion bere buruari.

Jatetxea gibelean utzita, udaletxeko plazara ailegatu zen Romain. Bide hori ez omen zen zuzenena museora joateko baina, zerbitzariaren hitzetan betiere, kanpotar batendako errazena bai. Data horietan alde zaharreko auzo baten bestak ziren ospatzekoak baina udalaren oztopoak eta baldintzen inposaketa zirela medio, bertan behera geldituak ziren *San Fermin txikito* izeneko bestak. Dantzan egon beharrean, aldarrikapen pankarta baten gibelean zeuden elkarretaratuak besten antolatzaileak eta auzoko bizilagunak udaletxearen aitzinean, buruhandiak eta guzti. Santo Domingoko maldan beheiti abiatuta, berehala bistatu zuen Romainek museoaren fatxada landua parez pare.

*Txikia* pentsatu zuen lehenbiziko itzulixka azkarra eman ondoren. Haydée Mendozaren Euskal Herriarekiko pasioaz kutsatuta edo, zerbait gehiago espero zuen. *Ados* onartu zuen bere baitan, *Nafarroa ez duk Egipto, baina ez al duk Europako erresuma independentea izan hainbat mendez? Ez al duk Nafarroa milurteko hizkuntza eta kultura aberats baten sehaska izan? Beharbada, Mexiko DFko museo antropologikoaren eskala erraldoiak baldintzatu ditik nire aurreikuspenak* deliberatu zuen hondarrean bere galderei erantzuna emanez. *Nolanahi ere, hau baino gehiago merezi dik Nafarroa txikiaren historia handiak, ez?*

Pazientziaz, museo guztia bisitatu zuen berriz, gelaz gela. Andere-zaldiaren lepokoaz edota moldeaz hitz bakar bat ere, *rien de rien*. Historiaurreko arloko arduradunari galdetzea erabaki zuen, lepokoaren moldea izan zitekeenaren dokumentuaren fotokopia sakela batetik aterata. Gizon trajedun bat etorri zitzaion, eta fotokopia ikustean

aurpegia aldatu egin zitzaion tupustean. Turisten plazererako irribarre artifiziala blaust desagertu zen, lagun gutiko aurpegiera serio bati paso emanez.

Ez, ez zuen ezagutzen, eta ez omen zuen inoiz horrelakorik ikusi. Fotokopia itzuli zion arkeologo gazteari.

—Eta biltegietan, gordetako piezen artean? –tematu zen Romain.

—Ez –erantzun zion idor trajedunak–. Pieza hori ez dago ez museo honetan, ez eta inongo biltegietan ere.

Museoaren gibeleko harresietatik doan pasealekutik abiatu zen Romain. Minutu batzuk beranduago hiriko sarreraren gaineko zubi dotorera ailegatu zen, plaza txiki baten ondora. Paretik, Errotxapea auzoa azpian zuela, erresuma zaharreko hiriburua zaintzen zuen Ezkaba mendiak.

Harresiaren gainean eskuak pausatu eta pentsakor gelditu zen gazte arkeologo normandiarra, andere-zaldiaren lepokoaren metal hotza bularrean sentitzen zuela. Apur bat etsiturik zegoen. Mexikotik bat-bateko ihesaldi batean bezala Euskal Herrira etorria zenetik informazio ezberdinak zeuzkan bilduak han eta hemen, baina moldearen arrastorik ez, ezta lepokoarekin lotura zuzena izan zezakeen ezertxo ere. Gainera, zenbait jarrera, Bardeako interpretazio zentroko arduradunarena edo Nafarroako museoko trajedunarena errate baterako, ulertezinak zitzaizkion, eta ez zuten deusetan laguntzen. Kontrakoa, ateak ixteko ahaleginetan zebilela zirudien. Zer arrazoi egon zitekeen horrelako zerbait ezkutatzeko? Zeren beldur izan zitezkeen? Museoko trajedunak moldearen fotokopia ikustean paratutako aurpegiak salatu egiten zuen, baina zer?, zergatik? Mazedoniako kasua etorri zitzaion gogora Romaini. Hondarreko bi hamarkadetan, Europako bildumagile pribatuen eskaerei erantzunez, inperio bizantziarraren nahiz erromatarraren piezen merkatu beltza hedatua zen, nolabaiteko mafia arkeologikoa sortuz. *Akaso horrelako zerbaitean sartuta egonen duk museoko ardura-*

*duna, bertzenaz, zergatik eta zertarako ezkutatu pieza inozo bat? Edo ezkutuko interes politikoak izanen dituk?*

Bere lepotik dilindan egonen ez balitz, zintzilikario beraren existentzia paratuko zukeen zalantzan. Baina horixe existitzen zela! Bere bularrean senti zezakeen, hotz, pisu. Indartsu. Beraz, moldeak ere existitu behar zuen, gainera, sakelan zeukan fotokopia tolestuak demostratzen zuen bezala, nonbait egon behar zuen dokumentatua.

Zeharo nahasia zegoen Romain, pentsakor, galdera berberak behin eta berriz bere buruari eginez, hausnarketa sakonean murgilduta. Bizkitartean, mendebaldeko mendien gibeletik sartu zen eguzkia, eta gauak hiria eta Romain bera besarkatu zituen. Oraingoan ordea, ez zeukan presarik, ez zegoen basamortuan, ez zeukan arrastaka eraman beharreko bizikletarik, eta ez zegoen bakarrik. Beharbada ez zen bidelapurren istorioak kontatuko zituen artzainik egonen, baina hiri-herri batean zegoen, bere neurriko baso batean. Orduan konturatu zen kalekumea zela erabat, eta Mexiko DF bezalako oihanetan ez baina Iruñea bezalako basoetan gustura zebilen animalia zela.

Iruñeko alde zaharreko karrika estuetatik abiatu zen, hartua zuen ostaturako bidean, eta, Jarauta karrikako bihurgunea hartzean, bere biribiltasun ia perfektuan eta argi distiratsuz zeru beltzean zintzilikaturik, ilargia agertu zitzaion parez pare, San Zernin elizaren dorrearen gainean.

*Ilargi* murmurikatu zuen bere baitan.

Beharbada bazekien, baina soilik orduan onartu zuen bere burua engainatzen ari zela, eta, errealitatea onartzeari beldurra galdurik, andere-zaldiaren lepokoaren moldearen bilaketa aitzakiatzat erabili izana leporatu zion bere buruari. *Koldarra. Aski duk. Ez basamorturik, ez molderik, ez ezer.*

*Ilargi, Ilargi, Ilargi, Ilargi, Ilargi...*

Gauetik egunera eta nahi gabe bezala agertua zen bere bizian berak izendatutako Nefertiti imigrante ilegala. Gero, desira eta plazeren plazera erakutsi zizkion neska brigadistak, ezin era misteriotsuenean desagertzeko azkenik, loa galarazten zion ametsetako andere-zaldiaren zintzilikarioa ohatze gainean utzirik. Gehiegi zen. Begiak itxi eta Ilargiren lurrin loarazlea usain zezakeela iruditu zitzaion, eta bere besoetan besarkatzen zuela.

Begiak ireki eta zeruan zelatan zeukan ilargian josi zituen. *Non zaude maitea?* galdetu zuen ozenki, eta ordura artio gibelatutako erabakia hartu zuen.

*Etxearen izenaz deitzearen ohituraren eraginkortasuna probatzeko tenorea duk* erran zuen umoretsu bere kolkorako.

***

Otsagiko bidea erabateko tentsioan egin zuen Romainek, eta autobusa herrira hurbildu ahala bihotz taupadak azkartzen zitzaizkiola sentitu zuen. Lepora eraman zuen eskua eta andere-zaldiaren metalaren kontaktuak zirrara bortitz bat eragin zion, erdi zorabiatzeraino ia. Lepokoak ezkutuko indar kontrolaezina askatzen zuela zirudien.

Romainek ez zekien oraindik zer erran behar zion Ilargiri aurrez aurre ikustean, nola justifikatuko zuen bere bisita, eta Yves Marie zein Pierren aholkuen hutsunea sumatu zuen. Neska batenganako horrelako erakarpena, bere bertsiorik basatienean, ez zuen behin ere lehenago sentitu, baina ez jakin zergatik, inprobisazioaren esku utzi zuen dena.

Otsagiko herriari ederra iritzi zion Arguedaseko estilo urbanistiko kaotikoaren alboan, bidaia-aldizkari baten postala edo. Harrizko etxeak, harrien tonu grisak, errekaren musika, mendietako berdea... *Normandia* pentsatu zuen, eta, oinaztura baten abiaduran, tristura latz bat hedatu zen

bere erraietan. Herriminak ezinegon sargori bat sortu zion.

*Herrimina.*

Baziren hilabete batzuk, urtebete akaso, bere Normandia kutunetik Mexikora abiatu zela, milaka kilometrora, eta apenas oroitu zen bere sorterriaz, ez modu horretan bederen, eta are gutiago herriminik sentitu. Orain berriz, ehunka kilometro batzuetara egonik, ezinegonak kilika ttipi bat dantzarazi zion sabelean. Normandiako amildegi zuriak eta bazter berdeak ez zituela inoiz gehiago berriro ikusiko pentsatu zuen, bere arbaso zelta eta bikingoen moduan, euskal lurraldeetara ailegatua zela bueltarik gabeko bidaian.

Errekaren ondoko karrikatik goiti abiatu zen kolore biziko lorez eta egur zizelkatuez apaindutako leiho eta balkoietako etxeak behatuz. Galtzada-harrizko karriketatik zihoala, Oihanbarren etxea bilatzeari ekin zion. *Herria ez duk hain handia,* aise topatuko zuela pentsatu zuen. Ondotik pasa zen lehenbizikoari galdetzea aski izan zitzaion etxearen kokapena ezagutzeko. *Eraginkortasuna konfirmatuta.*

Istant batez, Oihanbarren etxearen aitzinean geratu zen arkeologo gaztea, geldi-geldirik, zalantzati. Inguruko etxeen antzera, harri grisa zen nagusi etxearen aurreko aldean, eta harrizko arku dotore batek atea eta fatxada edertzen zituen. Sorbaldetan zeraman motxila eta beso batetik dilindan zeukan oihalezko zaku beltza bere gorputzaren kontra estutu zituen, konfiantza eske, eta aterantz zuzendu zituen bere urratsak.

Pausu batzuen ondoren hiruzpalau kolpe entzun nituen Oihanbarreneko haritzezko atean, eta ireki nuelarik, beheitik goiti begiratu ninduen Romainek: nire espartin urratuak, arretaz bordatutako mandarra gona beltzaren gainean, atorra beltza lisatua, nire adats zuri-zuria mototsean bildua, urteek zimeldutako aurpegia eta, azkenik, bei-

razko begirada distiratsua eta sakona, zeinean Ilargiren gaztetasuna antzematea iruditu zitzaion Romaini.

—Egun on anderea –erran zidan Romainek–, hau al da Oihanbarren etxea?

—Halaxe duzu, bai.

—Ilargi bertan al da?

—Ez –arrapostu nion serio, hitz batzuk ematen duten minaz–. Ilargi Oihanbarren herriko Plaza Zaharrean erre zuten duela laurehun urte, sorginkeria leporaturik.

Momentu horretan bertan, Romainen begirada itzali egin zen, eta bere aurpegia izotzezko maskara bilakatu zen. Mutu, tutik erran gabe, buelta erdia eman eta lasterka atera zen karrikan goiti, lauhazka handian eta seko eroturik. Deabruturik. Karrika bukaturik, mendiko bidexendretan barna desagertu zen, basoko zuhaitzen artean.

Berriro Madrilgo Soto del Realetik igorritako gutunean hala konfirmatu zidan: *...dirudienez Madrilera ekarri naitek fite epaituko naitealako. Ez diat «Ilbetea» atala idatzi, ezta horretan pentsatzeko astirik izan ere egia erran. Eta orain, epaiketaren aferarekin, ez diat uste eginen diadanik.*

Ursusen susmoak luze gabe baieztatu ziren, eta epaiketaren data finkatu zioten.

Paradoxikoki, irrikaz eta ilusioz betea joan nintzen Auzitegi Nazionalera Ursusen kontrako epaiketa ikustera. Guztira, gauza bat eta bertze, urte andana zen Ursus ikusten ez nuela eta epaiketak horretarako parada emanen zidan bederen. Urduri itxaron nuen poliziek *arrainontzi*ra sartu zuten momentua. *Aupa Ursus!* egin nuen oihu nire baitan aretora ekarri zutenean. Burua goitituz agurtu gintuen, irribarretsu. Lehenengo momentu haietako ilusioa, nerbioak eta agurrak igarota, epaiketa ezin aspergarriagoa izan zen.

Epaiketa bukatu eta bi hilabetera edo, eguerdiko albistegia baino lehen berriz ere, Xorroxin irratiko telefono guztiak hasi ziren jotzen, matxura elektroniko baten ondorioz erotu izan balira bezala.

—Zakurraren koskoilak! –erantzun nion hariaren bertze aldekoari.

*Baietz eta baietz* erraten zidan ahotsak telefonotik, *Ursus askatu behar dute, gaur arratsaldean bertan itxuraz. Kotxeak hartu eta bila goaz...*

Bihotza punpaka hasi zitzaidan, eta ez zerurako ez lurrerako gelditu nintzen.

Berri pozgarri hura eguerdiko albistegian eman nuen, pozaren pozez. Baita gaizki eman ere, izan ere, epaileak zuritu egin zuela erran bainuen, eta, arratsalde horretan bertan jakin nuenez, epaileak ez zuen absolbitu baizik eta ordura artio prebentiboan betea zuenera zigortu. Edozein modutan, Ursus kalera!

—Horrela duk Espainia –erran zidan Ursusek berak besarkada artean gau hartan bertan Madriletik etorri eta ongi etorriko harrera egin genionean–, egun batean terrorista bilatuena haiz eta biharamunean kalera, bahiturik eduki hauten denbora justifikatzeko zigor txikia ezartzen badiate ere. Hok dituk hok epaile zakilberde aluak!

*Biba Ursus! Lodiago, argalago edo burusoilago, baina beti umoretsu.*

Askatu biharamunean Xorroxin irratian agertu zitzaigun, bisitan. Berriz besarkadak eta muxuak, eta, nik deus aipatu baino lehen, berak atera zuen gaia:

—Bon, nola zoak «GAU IRATZARRIEN ILARGIA»?

—Niri galdetzen didak? Nik nire partea bete diat, *Ilberria* eta *Ilgora* atalak aspaldi zeudek ordenagailuz pasatuta. Falta duana hirugarren laurdena duk, eta hori ez duk nire ardura, ez?

—Bai, arrazoi duk, arrazoi duk...

Bi edo hiru astetara, Xorroxin irratiko egoitzan agertu zen berriz Ursus, aldizkari baten argazkiez egindako gutun-azal polit bat besapean zekarrela. Mahaiaren gainean utzi zidan.

—Hi, *pendejo*, badakik zer duan, ez?

—Suposatzen diat.

Gutun-azala ireki eta barneko orria atera nuen.

—Hau duk dena? Orri mixerable bat?

—Zer nahi duk, kalean nagoenetik ez diat batere denborarik, badakik, estresa, bizimodu eroa, agenda estua... –egin zuen txantxa– Espero diat hire gustukoa izatea, nahikoa ipuin itxurakoa atera zaidak egia erran.

—Ipuina?

—Bai, hala atera duk. Gainera, ze ostia, Otsagiko amatxi bat duk istorioa kontatzen diana, ez? Eta amatxiek zer egiten ditek ipuinak kontatzea ez baduk?

*Ilbetea* atala zekarren orria gainetik begiratu nuen.

—Hi, badakik zer? –erran nion– Orri puta bat baino ez duk, hau ordenagailuz pasatzeko ez duk katedraduna izan beharrik, beraz, tira, hemen duk ordenagailua.

Hortxe bertan, Xorroxin irratiko ordenagailu baten aitzinean eseri, eta «GAU IRATZARRIEN ILARGIA» istorioaren *Ilbetea* azken atala pikatzeari ekin zion Ursusek.

# GAU IRATZARRIEN ILARGIA ILBETEA

*Handiek handi irudi gu belaunika gaudelako*

## Ilargia

Zaharrei lehenagoko zaharrek errana eta hauei bere aitzineko zaharrek kontatua, belaunaldiz belaunaldi bidaiatutako herri sinesmenetako elezaharrek diote Harpeetako Hartza eta Larreetako Otsoaren arteko paktu batetik sortu zela ilargia.

Aspaldi, arras aspaldi, eguzkia ez omen zen inoiz sartzen, eta egun argia zen beti, ez zegoen gaurik. Ondorioz, kiskaltzeko moduko beroa egiten zuen, eta animaliek, bere ile geruza lodiarekin, ez zuten batere maite klima bero hori.

Muturreko egoera bero hura irauli nahian, eguzkiari tranpa bat paratzea adostu zuten Harpeetako Hartzak eta Larreetako Otsoak. Honela, ilargia asmatu zuten. Bien artean putz eginez bulkatu zuten gero, eta lurraren inguruan jira-biraka hasi zen ilargia.

Eguzkia, ilargiaren erran ezin ahalko distira eta edertasun biribila ikusirik, seko maitemindu egin zen, eta ilargiaren amodioa erdietsi nahian, gibeletik abiatu zitzaion. Modu honetan, eguzkia munduaren bertze aldean zebilenean ilargia konkistatu nahian, gaua etortzen zen alde honetara, bere iluntasun misteriotsuarekin. Egunean zehar berotzen zen lurra gauez hozten zen, eta bero itogarria arintzea kausitu zuten animaliek. Hotza zela eta, negua sortu zen, eta hori izan zen Harpeetako Hartza eta Larreetako Otsoaren arteko paktuaren bertze ondorioetako bat.

Hau gertatzen hasi zenetik, hartza bere kobazulora sartzen da lotara negua igarotzeko, eta otsoek ulu egiten diote ilargi beteari, hartzak ilargi beteak zenbatu ditzan kobazulo barnetik udaberrian puntual atera ahal izateko.

Kondairak dioenez, Iratiko oihanean ere, egunez arnasten den lasaitasuna urratu egiten da ilargi beteko gauetan, eta lur emankorraren azpian, zehaztu gabeko zoko batean urteen joan-etorrian atzendurik, zonaldeko erreka, mendi eta kobazuloen milurteko harrizko mapa dago.

Kobazulo sekretu horietako batean, Hiru Kaskezurren Leizea izenez ezagutzen denean hain zuzen, andere-zaldia dago marraztua sabaian, eta lepotik dilindan metalezko zintzilikario bat daraman zaldi gorrista bat bizi omen da. Egunez eguzkiaren izpietatik ezkutatzen da, eta gauez, ilargiaren distiren eraginez, zeharo erotzen omen da. Are gehiago, kontatzen denaren arabera, mendiz mendi, lepoz lepo eta zokoz zoko jauzika, trostan, irrintzika eta dantzan igarotzen ditu zaldi gorrista horrek ilargi beteko gauak.

Batzuk diote zaldi gorrista hori Europako iparraldeko gazte zelta baten arima dela, maite zuen emakume euskaldunaren istorioak jota eroturik basoetan desagertu zena, eguna eta eguzkia ia gorrotatzera ailegatu zena, eta soilik gauero ilargia ikustearen itxaropenak mantentzen duela bizirik. Ilargia gurtzen omen du zaldiak, maitasunaren sinbolotzat, bere adarbakar urdina noizbait aurkituko duelakoan.

Bertzetik, bertze batzuk diote herri zahar bat bizi dela Pirinioetako bi aldeetan, zeina, guk ikusi ala ez, botereak onartu ala ez, agertu eta desagertu egiten dena historian zehar, eta, konkistatzaileen desesperaziorako ipar poloan gertatu moduan uraren gainean dantzatzen duen izotz geruzaren mugimenduari esker, egunero askatzen dena, eta inperio, inkisizio edota demokraziaz mozorrotutako diktaduren gainetik, hil eta sortu, hil eta sortu, hil eta sortu egiten dena. Ilargia bezala.

# EPILOGOA

Nafarroako azken erregearen kaskezurraren balizko gorabeheren inguruko errelato literarioa idaztea norbaiti bururatuko balitzaio, litekeena da sinesgarria ez suertatzea. *Literatura da, asmatua* erranen genuke. Aldiz, istorio bera prentsan irakurtzen badugu, *kasu!* ez da literatura, benetako albistea baizik.

«Henrike III.aren burua» zioen prentsatik bildutako artikuluak. Antza, 1793an Frantziako iraultzaileek Henrike III.a erregea lurperatua zegoen Pariseko Saint Denis basilika asaltatu zuten, eta erregearen hilobia profanatu. Besoak eta burua moztu zizkioten gorpuari eta atal ezberdinak nonahi barreiatu. Gero, Frantziako Iraultzaren ostean, erregearen hainbat gorpuzkin agertu ziren herritarren etxeetan: hezur batzuk, behatz bat, ileak...

Baina burua ez.

Dinard izeneko zaharki erosle batek hiru liberaren truke erosi zuen burua enkante batean 1919an (errege baten burua hiru liberetan! *¿Aviso a navegantes?*), eta, Henrike III.aren burua zela zioen arren, ez zion inork sinetsi, ezta Pariseko Louvre museo ezagunak ere. Azkenean, zaharki eroslea hiltzean 1940an, berriro desagertu egin zen burua.

Berriki, eta etxekoek horren berri eduki ez arren, erretiroa hartua zuen gizon baten etxean agertu omen da burua, 1955etik armairu batean gordea zuela.

Burua ikertu duen aditu taldearen arabera Henrike III.a Nafarroako eta Frantziako IV.a erregearen buru momifikatua da, baltsamatzeko italiar teknika bati esker arras egoera onean dagoena. Buruari goiko ezpainaren

ezkerraldean antzematen zaion ebakia 1594an Jean Chatelek erregea erailtzen saiatzean emandako labankadaren zauria litzateke, belarri batean ageri den zuloak Henrike III.ak garaiko gortean belarritakoak eramateko moda jarraitzen zuela adieraziko luke, eta, dirudienez, oraindik baditu ile eta bibote hondarrak.

Zinez istorio harrigarria, ezta? Eta imajinazioa askatzen baldin badugu ez dakit noraino ailega gintezkeen berri honen haritik tiraka. Hori bai, gehienetan bezala, eta sukalde solidario batean erran zigutenaren arabera, bigarren bertsio bat ere badago, eta bertze aditu batzuek erraten dute ezetz, buru hori ez dela Francois Ravaillac katoliko sutsuak 1610ean erail zuen Nafarroako azken erregearena. Beraz, akabo ipuinak, elezaharrak eta erromantizismoak.

«Hiru Ilargi Laurden» kontakizunak bertze istorio (historia) bat kontatu nahi du, literaturatik, baina albistetik ere pixka bat daukana, eta horrendako hiru ilargi laurden baino gau iratzarri gehiago eman izan ditu istorio honen egileak, edo egileek hobeki erranda, izan ere, ilargi-laurdenak bezala, hiru izan dira, hiru, istorio honen asmatzaileak: Adolfo Mena, Tania Bunke eta Little.

Hirurek ala hirurek Ernesto baten eragina izan dute. Ernest Hemingwayk Adolfo Menaren lana baldintzatu du, eta kutsu literarioena eman dio errelatoari, edo horretan ahalegindu bederen. Ernesto Guevara de la Sernak inspirazio iraultzailea eman dio Tania Bunkeri, eta istorioan zehar agertzen diren emakume errebelde eta inkonformistak Tania Bunkeren ekarpen zuzena dira. Eta hirugarrenik eta azkenik, Ernest Shackletonek horrelako saltsa batean sartzeko beharrezkoak diren pazientzia eta abentura gogoak eman dizkio Littleri, denen ideiak bildu eta istorioa osatzeko.

Hiru eragin hauen ondorioz idatzi dituzte hiru egileek hiru ilargi-laurdenak, baina, zalantza izpirik gabe, eragin nagusi bat egon badago, eta hori, prentsarena izan da.

Errealitateak fikzioa gainditzen duela entzuten da maiz, eta aski da prentsa irakurtzea horrela dela baieztatzeko.

Istorio honen *Ilberria* atalean errate baterako, mertzenario batek aise erdiesten du Cuzcoko katedralean sartzea eta Tupac Amaru Inkaren kaskezurra ebastea. Sobera aise egia erran, eta pasartea osatu gabe dagoela uler daiteke agian. Hortaz, hiru egileek zalantzak izan zituzten tarte hori idazterakoan. Alabaina, pasarte hori idatzi eta denbora batera, prentsan irakurri ahal izan zen Galiziako Santiagoko katedraletik XII. mendeko eskuizkribua desagertu egin zela, eta, menturaz, ez zuen inork berria zalantzan paratzen. Eskuizkribuak *Codex Calixtinus* du izena, eta Donejakue bidearen lehen gidatzat hartzen da. Kutxa gotortu batean zegoen eta hiru lagunek bertzerik ez zuten gela horretara sartzeko aukera. Noski, erran beharrik ez dago, gelako ate eta sarrailak behartu gabe zeudela, inongo indarkeria arrastorik gabe. Beraz, haragizko norbaitek gure fikziozko mertzenarioaren marka hobetu du nolabait.

Tupac Amaru Inkaren hezurrez ari garela, erranen dugu hemen ere errealitateak aise gainditu zuela fikzioa, «Hiru Ilargi Laurden» istorioan ageri den Evo Morales sakrifikatzeko erritual asmatua hutsaren hurrengoa bihurtuz. Tupac Amaru Inka zaharraren ondorengoa zen José Gabriel Condorcanquik (Tupac Amaru izenez ezagututa hau ere), espainolen aurkako matxinada antolatu zuen XVIII. mendearen erdialdean, eta Peruko erregeordea zen Jauregi baztandarraren tropen esku erori eta gero, publikoki izan zen torturatua Cuzcoko Wacaypata plazan, bere emaztea, seme-alabak eta bere jarraitzaile nagusiekin batera. Mingaina moztu zioten, eta besoak eta hankak lau zaldiei lotu zizkioten bere gorputza laurdenkatzeko. Baina inkaren gorputza ez zen apurtu. Burua moztu zioten ondoren, baita gorpua nabalez zatikatu ere. Bere burua Tinta-ra igorri zuten, besoetako bat Tungasuca-ra eta bertzea Carabaya-ra, hanketako bat Santa Rosa-ra eta bertzea Livitaca-ra. Bere gorpuaren gainontzeko zatiak erre egin zituzten eta

hautsak Hatanay-en bota. Gero, bere ondorengo guziak sarraskitzea agindu zuten, laugarren belaunaldira artio. Horra hor garaiko Pater, Apostolua eta enparauen marka!

Errealitateak fikzioa gainditzen du beraz. Handiki.

Bertze aldetik, hor barna galdetzen badugu ea arkeologia ohiko albistea den prentsan, gehienetan ezezkoa izanen da erantzuna seguruenik. Horrengatik, arkeologia prentsan albistea ez dela uste duen horri erraten bazaio «Hiru Ilargi Laurden» istorioa prentsatik bildutako artikuluez osaturik dela gehienbat, harritu eginen da beharbada. Baina sinetsi ala ez, horrela da, eta kasik erraten ahal da istorio hau osatzeko erabili den dokumentazioa ez dutela egileek aukeratu, baizik eta alderantziz izan dela, hots, dokumentazioak berak aukeratu dituela egileak, kioskotik sukalde solidario ezberdinetarako bidea eginez.

Adolfo Mena eta Tania Bunke ezagutu baino lehen hasi zen Little prentsak zekarren arkeologia edo antropologia albiste oro mozten eta karpetatxo batean gordetzen. Egun batean baina, errepresioak Little eta karpetatxoa banandu zituen. Hala eta ere, noizbait karpetatxoa zegoen etxera berriro itzuliko zelakoan, prentsatik artikuluak mozten eta gordetzen jarraitu zuen Littlek. Eta orduan izan zen Adolfo Mena eta Tania Bunke ezagutu zituela, norbaiten bertze sukalde solidario batean. Denbora pasatu ahala, Adolfo Menak olerkiak eta Tania Bunkek testu politikoak idazten zituzten bizkitartean, arkeologiari buruzko artikuluak metatuz joan zitzaizkion Littleri.

Egun batean, Tania Bunkek den-dena zalantzan jartzeko duen ohitura sano horrekin, *zertarako biltzen dituk artikulu horiek guztiak?* galdetu zion Littleri. *Ez zekinat* erantzun zion Littlek, *etxera itzultzeko itxaropena pizturik mantentzen laguntzen zidan horrek nolabait.* Hitz hauek aditzean ajataka hasi zen Tania Bunke, Littlez trufaka.

—Hi Tania –sartu zen Adolfo Mena bitartekari–, utzan bakean, artikuluak bildu nahi badizkin bil ditzala.

—Bai, bai –arrapostu zuen Tania Bunkek–, nik ez diat deus erraten, baina grazia egin zidak. Edo zer uste duk hik –Tania Bunkek Littlenengana zuzentzen berriro–. Egunen batean poliziak atxilotzen bahau, kaserna zikin baten zakarrontzian bukatuko ditek artikulu horiek guztiak. Edo, hire etxean huen karpetatxoa bezala, epaitegi puta baten biltegian atzendurik.

*Etxeko karpetatxoa epaitegi puta baten biltegian atzendurik* pentsatu zuen Littlek kopetilun. Ordura artio ez zuen horretan pentsatu baina beharbada arrazoia zeukan Tania Bunkek, eta, *ze gauza gehiago eraman izan ditik poliziak nire etxetik miaketa egitera etorri zualarik?* galdetu zion bere buruari. Jarraian, joderka eta kaguendioska hasi zen Little.

—Zer duk orain? –Adolfo Menak galdetu.

—Ostia, espero diat zakurrek Chiapaseko egunerokoa hartu ez izana...

Hor zituen idatziak Littlek urte batzuk lehenago Mexikora egindako bidaiaren gorabehera guztiak. Egia erran, eguneroko horretan ez zegoen poliziarekiko deus konprometiturik baina kaier horren balio sentimentala ezin neurtuzkoa zen, izan ere, Little arras memoria txarrekoa izaki, argazkiak eta idatziak ziren oroitzapenak bizirik mantentzeko modu ia bakarra.

—Zergatik ez duk berriz idazten? –proposatu zion Adolfo Menak.

—Zer, egunerokoa? –Littlek erantzun.

—Bai, Mexikora egindako bidaia. Zehatz-mehatz ezin izanen duk baina saiatu bidaiaren gauzak gogoratzen, eta idatzi berriz.

Littlek Adolfo Menaren ideia hausnarrean ibili zuen hurrengo egunetan, eta, bere bidaia ez, baina bidaian ezagututakoarekin eta prentsatik bildutako artikuluekin zer edo zer idatz zezakeela pentsatu zuen. Eta horra hor nor-

baiten sukaldean Adolfo Mena, Tania Bunke eta Littleren arteko elkarrizketatik sortutako emaitza: «Hiru Ilargi Laurden».

*Errepresioaren joanak*
*Askatasunaren etorriak izanen direlakoan,*
*etorririk gabeko bortxazko joanik ez!*

LiTTLE

# OHARRA

Beti entzun izan dut zirriborro batek hamaika buelta ematen dituela argitaratua izan baino lehen, eta «Hiru ilargi laurden» istorioaren kasuan hala dela baiezta dezaket. Hori hain da horrela, arkeologiari buruzko artikuluak biltzen dituen karpetatxoaren etxean bertan ari naizela hondar lerro hauek idazten eta zuzentzen, iragarpen guztien kontra eta hainbat epaileren aitzinetik nahiz espetxetik pasatu ondoren (baieztatu ahal izan dudanez, Littlek Mexikora egindako bidaiaren egunerokoak bere tokian segitzen du, artikuluen karpetatxoaren ondoan, eta ez esku arrotzetan ez eta inongo epaitegian galdurik ere).

Normalki aditzen den bertze ideia bat da idazleek beren esperientzia propioak baliatzen dituztela istorioak sortzeko, eta hau baieztatzerakoan zalantzak sortzen zaizkit. «Hiru ilargi laurden» irakurrita eta hondar urteetan niri pertsonalki gertatu zaidana ezagututa, batek baino gehiagok egin dezake lotura, eta, beharbada, *Ursus* jartzen duen tokietan Little irakurriko dute aunitzek. Bada, honen inguruan, erranen dut nik ez dudala nire esperientzia baliatu Ursusen joan-etorriak sortzeko, izan ere, «Hiru ilargi laurden» istorioaren zirriborroa 2009ko irailean osatu nuen. Beraz, edo epaileren batek zirriborro hura erdietsi zuen bidean galdutako usb-ren batean eta aplikatu dit, edo, alajaina, eskuizkribu budu baten aitzinean gaude. Hortaz, agian aproposagoa litzateke Ursus irakurtzea *Little* jartzen duen tokietan. Bueno, edozein modutan, gaitz erdi, ez?

Hona ailegaturik, esker onak emateko profitatu nahi ditut hondar lerro hauek: lehenik eta behin, esker mila anitz ilargiari, inspirazio iturri amaigabea izateagatik. Esker mila anitz istorio honen zirriborroaren zirriborroa idatzi

nuen sukalde solidarioaren jabeei, baita istorio honen zirriborroa *pikatu* nuen ordenagailuen jabeei ere. Esker mila anitz unean une egunkaria erosi didaten guztiei. Esker mila anitz «Hiru ilargi laurden» istorioaren zirriborro ezberdinak gordetzen zituzten usb-ak eskuz esku (edo sakelaz sakela, edo galtzontziloz galtzontzilo, edo kuleroz kulero, edo titi-zorroz titi-zorro...) errepide zein sasi mugetan barna pasatu dituzten guztiei. Esker mila anitz istorioaren garapenean zehar zirriborroa irakurri eta bere iritzia eman didaten guztiei, baita arrazoi ezberdinengatik iritzia ematerik izan ez dutenei ere (nahi izan ez dutenei bai eta zirriborroa alferkeriaz irakurri ez dutenei ere). Esker mila anitz zirriborroaren zuzenketa hain profesionalki egin duen neskari. Esker mila anitz maketazioa eta azala egin dituen lagun dotoreari. Esker mila anitz Metaziriren editore taldeari, bertze jendarte baten alde egiten duen lanagatik. Eta azkenik, esker mila anitz zuri, zure sosak holako pitokerietan xahutzeagatik.

Eta bertzerik gabe, ohar hau finituko dut, azken urteetan prentsatik bildutako arkeologiari buruzko artikulu guztiak beren karpetatxoan sartzen arras lanpeturik bainago.

*Askatuko zaituen*
*zai bazaude*
*zaude lasai,*
*zaude ziur*
*askatuko zaituela*
*Kateak itsusiak baitira*
*hilotzaren gorputzetan.*

(Mikel Laboa)

"...Idatziak arras egitura berezia du. Ez da nobela bat. Ez da saiakera bat. Saiakera nobelatu bat edo nobela didaktikoa. Istorio nagusi baten barnean agertzen diren bertze istorioak, gertaerak. Errealitate bat bertze baten barnean. Kolore anitzetako idatzia..."

Eleberri hau estatuaren jazarpenari ebatsitako minutu bakoitzarekin egin da, sasiko egun unagarrietan, premiaz, ihesaldi itoan ilargiari begira. Ordenagailu anonimoetan, kaparra ibiltarietan, mugako bideak gurutzatuz edozein narraziok ohikoa duen hasieratik amaierarako bidean; eta, horrela gauetik egunerako segidan argitu da irakurlearengana.

Laguntzaileak:

Erratzuko
Kultur
Elkartea